-Maïte Rungis

# -Ekonomiako lehen pausoak

Bigarren partea

-Xabier Amurizak euskeratua.

Hastapenak - 20
1974 - Uztaila

M. RUNGIS
EKONOMIAKO LEHEN PAUSOAK
Bigarren partea
II

Euskeratzailea:
Xavier Amuriza

LUR editoriala
Villa Zutik, Paseo Arbola,
Donostia

Inprentatzen du:
Ellacuria
Avda. del Generalísimo, 19
Erandio-Bilbao

D. L.: BI - 13 - 74
ISBN: 84-7099-033-0

MAITE RUNGIS



# EKONOMIAKO LEHEN PAUSOAK
## Bigarren partea

XABIER AMURIZAK
EUSKERATUA

LUR Editoriala

# LAUGARREN KAPITILUA

## ESTRUKTURA EKONOMIKOAK

Frantzia... Jaun Maurras-en aldekoak bakarrik ez dira harrokeriaz mintzatzen dakitenak. Bizi garen aldiotan ba da oraintsu-lehentsuko abertzalerik De Gaullen nazio goralbenean nik al dakit zer kontsolamendu aurkitzen duenik. Zer da Frantzia ekonomia mailan?

Heldu da hauzi honi oratzeko ordua, zeren hala indibiduek nola enpresek beren bakar edo elkar ekintzak nazioko ekonomiari gorputz emateko konbinatzen baitituzte. Batzuk eta bestetzuk joko ekonomikoan zer egiten —eta irabazten— duten zehazkiago edo ez zehazkiago ikusirik dugunez gero galda dezagun orain nola funtzionatzen duen nazioak —beste maila bateko entitate ekonomiko bat—, nola eta zer neurritan parte hartzen duten hiritarrek eta enpresek nazioko produktoaren egikeran eta nazioko errentaren bana-

keran. Aitor nahiz desaitor, atsegin nahiz desatsegin, lur mugar baino askoz agiriago diren muga ekonomikoz eta juridikoz atzerritik berezitako entitate bat dugu nazioa. Ba liteke gerora gizateriak beste haro ekonomiko bat ezagutzea zeinetan oraingo muga ekonomikoak hain gaindurik geratuko baitira nola dauden orain antzinako errejimeneko udal arbitrioak. Nazioartearen geroko aurrerapenari dudarik gabe datxekon zer da hau. Baina oraingoz, eta ezepzio urri batzuz aparte, batzuren eta bestetzuren joko ekonomikuko sintesia nazioko hesian egiten da.

Arriskua ez da hau ahaztea, nazioari ez dadukan berdintsutasuna ematea baizik. Arriskua da hala arduratzea nazioko kontaduria ekonomikoaz —urrengo kapituluan hitz eginen dugu honeta—, nazioko desarroilo planean hala konparatzea —edo oposatzea— nazioko on ekonomikoa atzerriko beste nazio batzukin, nola nazioko bertako desberdintsutasuna bistatik galtzan baita.

Edozein nazio desberdintsua da, lurralde xit desberdinez osatua, enpresa estruktura diferentez, jeende egokituagoz edo ez egokituagoz, edo ekonomiaz makalez, etab. Nazioaren hedadurak zerikusi haundia daduka desberdintasunon gehitze-gutitzean: Rusia, Estatu Batuak, India etab., Beljika, Dinamarka, Luxenburgo, Frantzia etab., baino diferenteago dira. Baina, jakina, ez da hedadura kontua bakarrik, zeren beste faktore batzu sartzean, aniztu egiten baitira posibilitate diferenteak.

Ez dago desberdintasun honen kontzientzia garbiegia beti eduki beharrik geure bururik ez en-

ganatzeko honen edo horren nazioz hitz egitean. Gero ekonomia nazionalak aipatu eta beren arteko harremanak jarri beharko ditugun neurrian, hasieratik esan beharra dago ez dagoela nazio bat to ere berdintsurik. Bere barrenean desberdintasun batzu daude ez direnak oraingo unean sortu —adiuntza—, kausa askoz errotuagoekin zerikusia dutenak baino —estrukturak—.

*Diferentziak maila guztietan*

Har dezagun Frantziako adibidea. Alde guztietan irakurtzen dugu Frantzia hazten, desarroilatzen ari dela. Izan egia da hau lurralde batzutarako (Lorena, Prisalde, Isére, Marselle, etab.), baina gezurra beste batzutarako (Erdiko Mendidi, Hegoa-mendebalde, Erdiko Bretinia, etab.). Frantziako nekazaritza lore loretan omen dago: egia Beauce, Ifarralde eta Rhone-ko haranerako, gezurra guztiz abandonaturik dauden Pirinio eta Alpe hegietarako. Frantziako komertzioa bejetatzen ari omen da: egia Poujade eta Gingembre-ko klienteria osatzen duten merkatarientzat, frantziar merkatarien maila bateko pertsonaia ezagugarri —bakoitza bere motan— direnak noski, baina Frantzia merkatarian supermerkatuak ere ba daude, Prisunic kateak, konsumoko kooperatiba nagusiak, Amerikako komertzio katea nagusiei hortzak erakusten hasirik daudenak (ba da beste berri bat ere, oraindi bere geroari ondo antzematen ez zaiona, Leclerc-en tankerako almazen kateak).

Laburpen gisa, era batera anitz Frantzia dagoela esan genezake: Frantzia bat, batzu hobeto,

"haundienak", Frantzia batzu "tipienak", etab. Horregatik nazio honetan beste batzutan baino estruktura desberdintasun zorrotzagoa dagoenez gero, zaila da eta sarritan zentzurik gabea bataz besteko iritzi estadistikorik ematea. Produkzio zikloko edozein maila, industriako nahiz komertzioko edozein adar berezi, edozein sektore nahiz lurralde azterkeran, hasierako konstatazioa etengabea da: "haundiak" eta "tipiak" daudela eta bitarteko distantzia izugarria dela.

Batzuri berez bururatzen zaie nola "haundiek" ez duten "tipiak" azkarrago irensterik lortzen. Hauzi honek, bada, beharrezko guztia ekiteko haina garrantzia daduka. Lehenengo, bere dinamikan aztertzen saiatuko gara eta gero balio-iritzi bat ematen: estrukturen desberdintasuna. Guk, sozialistok, honako eta antzeko galderei erantzun behar diegu: "tipien" iraupena desiragarri al da berez? Zer kondiziotan? Joka al daiteke produkzio unitate haundiagoen alde? naturak hobeto horniturIko lurralde geografikoen alde?

Fenomenoaren deskripzioaz gainera, derrigorra da gogoeta. Guk gaurko Frantziaren berezgarri diren estrukturazko desberdintasun printzipalak aztertutakoan eginen dugu gogoeta hau, eta desaztertutakoan eginen dugu gogoeta haux, eta desberdintasunok hauxek dira: errentazko desberdintasunak, lurraldezko desberdintasunak, enpresen tamainiako desberdintasunak.

# I. ERRENTETAKO DESBERDINTASUNAK

Desberdintasun hau nabarben geratzen da zergen estadistika jeneralean, zein baita —iruzur eta guzti ere— Frantziako errenten diferentziak ondoen agertzen dituen iturria (1).

Zer erakusten dauku zergapekoek beren aurreko urteko errentei buruz fiskoari eginiko agerpenekin osaturiko estadistika honek? Lehenengo eta behin, Frantziako 14 miloi "sukaldetatik" (hitz honek estadistiketan familiako unitatea esan nahi du, dela ezkongabe, dela familia ugari bat) guti gora behera 9 miloik errenta apalegia hartzen duela zergarik ordaindu ahal izateko (36.000 franko hilean haurrik gabeko sukaldeak; 55.000 franko bi haurretako sukaldeak —franko zaharrak—) eta beraz ez duela agerpen fiskalik egiten. Hauen artean daude batez ere aita jubilaturik dadukaten sukalderik gehien gehienak (1,8 miloi sukaldetatik 1,5 miloi aita jubilatudun), langile sukaldetatik hiru laurdenak (3,8 miloitatik 2,8), enplegatuen familiarik gehienak (miloi batetik 600.000), lur langileen sukalde guztiak (500.000), beste alokatu tipi eta erdiko gehienak (650.000-tik 500.000), nekazari sukalde ia guztiak (1,7 miloitatik 1,6), beheko koadroetako zatitxo bat (700.000-tik 200.000), artisano eta merkatari tipi batzu (errenta zergarik ez ordaintzeko bezain guti irabazten dutenak) eta azkenez jubilaziorik ere ez dadukaten "inaktibo" talde batzu.

Gero, lehengo zergapekoen mailak aurkitzen ditugu —errentarik makalendunak— (tasa progre-

siboa gaur egun): 1.520.000 familia buruk hilean 50.000 frankotatik behera kobratzen duela agertzen du. Gerotxoago garrantzia ia berdineko talde bat dadukagu (1.620.000) hilean 50.000 eta 75.000 mila frankoren arteko errenta agertzen duena. Hona, bada, 14 miloitatik 12 miloi familia baino gehiagoko totalak fiskoari agerturiko errenta hilean 75.000 frankotatik behera zela 1958-n.

*Hilean 6.000 franko ala 5 miloi?*

Errenten eskalako beste ertzera jorik, 118.000 familia aurkitzen ditugu hilean 250.000 frankotatik gorako errenta agertzen diotenak fiskoari. Huetarik 23.000-k hilean 500.000 frankotatik gora agertzen du eta talde honetan 2.700 familiak hilean 1.200.000 frankotako errenta aitortzen du. Azkenez gorengo figuren taldean 514 familia daude hilean bost miloi franko inguru agertzen dutenak. Hauxek dira fiskoari agerturiko errentak.

Izatez, xosten honek ez ditu Frantziako familia guzti guztiak hartzen, ez baitiosku nortzuk daduzkaten errenta apalak (sukaldeen totaletik hiru bostenek) eta gainera ez ditu klase modutsuen benetako errentak emate, iruzurtiak baizik.

Lan Ministerioak emaniko urrengo datoek lagunduko gaituzte errenten eskalako beherengo ertzean zer dagoen argitzen. Errentarik apalenak pertsona adintsuek hartzen dituzte, hauetarik ia lau miloik (3.700.000) hilean 13.500 frankotatik behera hartzen dutelarik, bi herenek hilean 9.000 frankotatik behera, eta beherengo mailan miloi

eta erdi pertsona zaharrek hilean 6.000 franko baino gutiago.

Estadistika fiskalen bir-ukitzea oso zaila da errenta altuen kasuan. Hala ere, denok dakigu enpresa haundietako gidari alokatuek firmari ezar diezakeotela izatez beren gastu partikularrak diren gastu mordo bat: kotxe mantenu, xofer, alkiler, etxe zerbitzu, inoiz hesien alkilerrik eta iate baten gozamenik ere bai, etab. Gainera oso ohizko da fiskoari gastuak ezkutatzea, esonetaturik egonik agertu beharrik ez dagoen Estatuko tituloak ("Pinay" deritzatenak) erosirik. Beste modu bat kapitalaren errentak atzerrian gastatzea da, nazio hoietara isilpean eramanik. Errenta eskalan beheratxoago ere anitz ihesbide dago fiskoari errenta zati ederrik ohosteko: esaterako, edonork daki artista eta merkatari artean ohitura zaharra dela errealitatearen ia antzik ere ez duten errentak agertzea. Hazienda Ministerio frantseseko espezialistek jotzen dutenez, agerpeneko iruzur portzentaiak % 25 inguru omen dira zergapekoak konstrukzio enpresetako jabeak direnean, % 30 inguru profesio liberaletan, % 28 merkatarientzat, etab. Kontuak kontu, alokatu tipia eta erdikoa direla fiskoari errenta zatirik ezkutatzeko modurik ez duten bakarrak, enpresak haien errenta oso osorik agertzen baitio fiskoari e,z ordea, dohainik ematen etxe zerbitzurik, ez ehiza hesirik, ez kotxerik ez ezer.

Errealitate honek zeharo bada-ezpadatzen ditu agerpen fiskaletan oinarrituriko errenta konparazioak. Baina hoberik ezean, zifra haueixe oratu behar. Gainera nahikoa irakatsi adierazkorrik da-

maikute: Frantzian errenten piramidea miloi eta erdi zaharrek hartzen duen hileko 6.000 frankotatik zergapekorik edukitsuenek gero, bat liteke 6, 7 miloi edo gehiago izatea. Frantziako errenta eskala, bada, ez dabil, sarri uste denez, 1-tik 20, 30, edo 50-ra, 1-tik 800-ra baino. Hain eskala nabarbenki zabala da hau non berdintasunaren sen pitinik duen pertsonak xunditurik geratu behar, ez baitago justifikatzerik espirituzko talentoek edo esku-trebetasunak honenbesteko bizimaila diferentziak eramatea berekin. Errealitate honek ezer gutitan uzten du Giza Eskubideen Agerpeneko afirmazioa —teoriko hutsa—, zeinen arauera gizon guztiek omen baituzte eskubide berdinak eta nik al dakit zer gehiago.

Gorago aipaturiko beste estadistika batek baitesten du uste hau eta biziagotzen, diferentzia hauen argitara, zer marrokeria den "erdiko frantses" konzeptoa: Centre des Recherches et de Documentation sur la consommation-ek eginiko inkesta da, 20.000 familiena deritzana. Honek erakusten dauku talde bakoitza berdintsutzat hartzen da erosotasunarren, eta honek ia dezehaztasun hundia darama berakin—.

*Errenten piramidea*

1956-n (inkesta urte) erdiko lur-alokatueneko urteroko konsumoa 550.000 franko zen, hau da, hilean 46.000 franko inguru. Profesio liberaldunen edo goi-koadrokoen konsumoa aldi hartan urtean 1.850.000 franko zen, hau da, hilean 160.000 franko. Ia 1-tik 4-rainoko aldea dago lur langilearen

—Frantzian gaizkien ordainduriko alokatuaren— eta profesio gutitxoago dago CREDOC-en ustez industrialen eta merkatarien taldearekin. Baina hau talde honetan industrial guztiak nahasi direlako da, hau da, sei edo zazpi langile dituenetik Renault, Michelin edo Pechiney-ko zuzendari jeneraletaraino; eta berdin merkatari guztiak ere, bazterreko dendari tipitik almazen haundietako zuzendariraino. Talde bakoitza, desiragarri zatekeenez, subtaldeka banatu izan balitz, talde bakoitzean errenta apaleko, erdiko eta haundiko familiak berezteko moduan, CREDOC-eko zifrek ematen duten baino proportzio izugarriro haundiagorik aterako zen. Gutienez estadistika fiskaletatik ateratako proportzioetara hurbilduko zen.

Hala eta guzti ere, gogotan hartzeko da aitor--urte honetan (1956) urteko bataz besteko konsumoa 856.000 franko zela nekazarientzat, beste hainbestetsu (845.000) artisanoentzat, gutitxoago (807.000) langileentzat eta 684.000 peoientzat. Sukalde frantsesetako batazbestea 784.000 frankotako konsumoz bizi zen, goi-koadro eta profesio liberaletako taldeak 1.850.000 franko konsumitzen zuelarik sukaldeko eta erdi-koadroetakoak 1.390.000. Zifra hauek agertzen daukutenez, maila sozial bakoitzean miloi batzu pertsona bildurik ere, agirian dago gizarte klaseen esistentzia, zeren proportzioa, talde hain izugarriak izanik ere, 1-tik 4-raino baitoa.

Azterketa zehatzagorik ere posible da, jakina, 20.000 familietako inkesta zehetzen bada eta hango zifrak beste dato batzukin (fiskalekin batez ere) konparatzen badira. INSEE-k eta Haziendako

Ministerioak hauxe egin zuten hain zuzen 1961-n lehenengoz Frantzian. Fiskoaren berritze proiekto bati buruzko dokumentuan argitaratu ziren erresultatuak. Testo honek Frantziako familia guztiak beren errenta fiskal netoaren arauera klasifikatzen ditu. Honela eraturik, jakina, sailak garrantzia desberdinekoak dira. Hilean 37.500-dik 50.000--rako errenta fiskala irabazten duen sukalde sailak eta 50.000-tik 62.500-rako sukalde sailak, bakoitzak 1.600.000 sukaldetatik gora hartzen duen bitartean (berauk bakarrik egiten dute Frantziako sukalde guztietatik laurdena baino gehiago), 100.000-tik 112.000 frankotarako errenta sailak 900.000 sukalde besterik ez du hartzen eta 137.000--tik 150.000 frankotarako errenta sailak 300.000 sukalde bakarrik. Errenta piramidearen gailurrean (hilean 500.000-tik miloi bat frankotara dabiltzanak) mila batzu familia bakarrik konta ditzakegu. INSEE-k eta Haziendako Ministerioak agerturiko azken sail honek, ordea (625.000-tik gorako errentak hilean) 14.000 sukalde artzen ditu.

Argi dezagun zifra eta portzentaia batzukin Frantziako errenten piramide honen deskripzioa:

— Sukalde frantsesetarik heren bat (% 34 = 4.740.000) 50.000 frankotarako errenta fiskal netotik behera dago.

— Beste heren bat (% = 4.775.000) 50.000-tik 87.000 frankotara bitartean dabil.

— Laurden bat (% 24 = 3.400.000) 87.500-dik 150.000 frankotara bitartean.

— Gainetikoa % 10 sukalde frantses) xit desberdinki banatzen da subsail hauetan:

— Erdia baino gehitxoago (% 5,5 edo 770.000 sukalde) 150.000-tik 200.000 frankotako errenta fiskalez.

— Zerbait gutitxoago (% 4,1 edo 573.000) 200.000--tik 500.000 frankotara bitartean.

— Azkenez, gainetikoa (% 0,4 edo 56.000 sukalde) 500.000 frankotatik gora.

Xit interestsu litzateke sail sozial bakoitzerako bere "errenten piramidea" edukitzea. Tresna honekin estadistikaz frogatu ahal izanen litzateke Frantziako gizarte klase diferenteen esistentzia eta garrantzia, azaltzaile azalek sarri ahazturiko klaseak noski. Bistan dago goi-koadroen, profesio liberan eta ugazaba merkatari eta industrialen errenta piramideak ez dadukala lur-alokatuen, langileen edo enplegatuen figura berdinik. Baina dokumentuok oraindik argitaratzeko daude. Ez al dira egun-argia ikustetik urruti egonen.

Oraingoz, jarritako helburua (frantsesen desberdintasuna beren errentei buruz oroitarazi) lorturik dogu. Aurrerantzean ez zaitzue zilegi "frantsesak" esatea talde berdintsu bat balitz bezala. Ez dadukate inolako zentzurik "frantsesek honenbeste irabazten dute" edo "frantsesek honenbeste gastatzen dute" bezalako esanek, kasu multzo izugarriro desberdinak baitira. Gogoan eduki eskala 1-tik 1.000-ra baino gehiago dela.

Nola litekeen errenten konjuntoa berdintsutu, aipa berri ditugun diferentziok gutitu? Hona hauzi bat laster oratuko dioguna, Frantziako estrukturazko diferentziak azaldutakoan. Baina orindixe

esan dezakegu gizon arteko berdintasunaren idealik duenak eta ondasunen banaketa berdinkorrik nahi duenak ez dezakeela gaur bezalako diferentzia hain nabarbenik jasan.

## II. LURRALDEZKO DESBERDINTASUNAK

Egon ere, Frantziako lurralde desberdinen artean errentei buruz ikus berri ditugunak bezain diferentzia zorrotzak daude. Ez da nazio honetako kontua bakarrik, bai baitago beste nazio batzutan diferentzia askoz haundiagorik probintzia desberdinen artean: horra Italia, Estatu Batuak, Rusia, eetab. "Frantsesak" esaterik ez dugun bezala, ez dezakegu "probintzia frantsesak" edo "Frantzia" ere beste gabe aipa, zer berdintsu bat balira bezala. Zifra batzu nahikoa dirateke honen frogatzat.

Mont-Saint-Michel dik hasi eta Grenoble-raino irudizko marra bat botatzen badugu, Frantzia bi zati ia berdinetan erdibiturik, alderdi batean eta bestean gertatzen dena zeharo diferentea dela ikusiko dugu. Merezi du ariketa hau egitea irudizko marra honek bi lurralde arras diferente banatzen baititu, nahiz eta benetako muga geografikorik egon ez. Hemendik aurrera Ifarrik edo Hegoarik aipa dezagun guztian, irudizko marra honixe gagozkioke.

Marraz Ifarrean 25 miloi biztanle ditugu, Hegoan berriz, lur hedadura antzekoz, 6 miloi (laurden bat) gutiago. Jakitekoago da oraindik gerra

aurretik gora farreko baztanleria ia % 10 gehitu dela, Hegoakoa berriz ia % 1-tik ere ez. Ifarrean, probintziarik gehienetan, haurren numeroa familiako, nazioko batazbestea baino gehiago da, Hegoan berriz oso probintzia gutitan (50-tik 14) gaintzen da beatazbeste hau. Baina beren jaiotze neurri haundiagatik ezagunak diren Bretagne eta Vendée kenduz gero, ia ez da marraz hegoan geratzen nazioko batazbesteaz gorako haur numerorik familiako duen probintziarik.

*Ifarreko eta hegoago Frantzia*

Demografia mailan, ikus berri dugunez, alde ikaragarria dago Ifarretik Hegoara. Axola gaitezen orain ez ia gizonez, zer egiten duten baizik. Ifarrean, probintziarik gehienetan, industrian enplegaturiko lanesku portzentaia Frantziako batazbesteaz goitik dago (% 41 jende aktibo osotik), Hegoan ordea, probintziarik gehienetan nekazaritzan enplegaturiko lanesku portzentaia nazioko batazbesteaz goitik dago. Beste era batera esanik, Ifarreko jendea Frantziako konjuntoa baino gehiago ari da industrian, Hegoa ordea, nazioko batazbestea baino nekazariago delarik. Ohar gaitezen industria izatez, pertsonako nekazaritzak baino aberastasun gehiago dakarren aktibitatea ekonomikoa dela (zati bat emankortasun gehiago duelako erabiltzen den tresneria hobeari eskerrak: Renaulteko langile batek indar haundiko eta zehaztasun harrigarriko makinak darabiltza, erdiko nekazari batek bere traktorea erabiltzean indar mekaniko askoz tipiagoz dihardukan bitartean).

Beste gertaera jakingarri bat: Ifarreko nekazaritza askoz emankorrago da nazioko batazbestea baino, Hegoan ordea, guztiz besterik da: departamenturik gehienetako emankortasuna nazioko batazbesteaz behetik dago, nahiz eta bai egon lurlantza arras aberatsik, hala esaterako Midi-ko ardoa edo Bretagne-ko edo Rhone-ko haraneko lehenkiak. Azkenez, ohar guztiok sintesitzerik nahi badugu, per capita errentako indizea (probintziako errenta hiritarren numeroz zatitua) kalkulaturik, Ifarreko probintzia mordo haundi batek (22-k) nazioko batazbesteaz goitiko per capita errenta dadukala ikusiko dugu, Hegoan ordea, hiru probintziak bakarrik gaintzen du batazbeste hau.

Bir-bil ditzagun konstatazio hauk: Mont-Saint-Michel-dik Grenoble-raino irudizko marraz Ifarrean Hegoan baino jende gehiago bizi da eta haur gehiago dadukate familiako; enplegatu gehiago dago industrian (aktibitate aberatsa); nekazaritzari ekitean Hegoan baino emankorrago gertatzen da. Lojiko denez, bataz beste, Ifarrean Hegoan baino aberatsago dira.

Frantziaren erdibitze xit arbitrario batek eman dauku erresultatu hau. Dudarik ere ez bi zatiotarik edozeinen barrenean ere posible dela desberdintasun galanti agertuko leukegun beste anitz marra irudizko. Prozedimendu —geografiaz zentzugabe— honen interesa zer honetan datza, bistan uzten duela nola Ifarreko Frantzia eta Hegoako Frantzia argiro oposa daitezkeen, hala industria mailan nola nekazarizkoan nahiz demografikoan. Ondoriotzat konklusio honetara heltzen

gara, Frantziako berdintsutasuna —geografia ekonomikoaren mailan— gezurra dela. Zenbat lurralde hainbat Frantzia tipi dago.

*Zergatik diferentziok?*

Lurraldezko diferentzia hauen arrazoiak askotarikoak dira. Mendiak gehienean Hegoan daude eta fabrikak mendietan baino lautadetan errazago egiten dira. Ifarreko klima bigunagoa ere kultibo klase batzutarako egokiago da Hegoakoa baino, sarritan hau beroegia. Erraz ulertzeko moduko arrazoi historikoengatik, kualitate teknikoak ere, hala nekazaritzan nola industrian, zabalduago dirudite Hegoago jende artean baino. Frantziako historiak ibai bideen eta trenbide eta karretera sarearen funtzioan moldatu du bere tankera industriala, amaraun antza harturik erdirantzko marra konberjentez. Gainera meatzak, XIXgarren eta baita XXgarren mendeko bizkunde industrialean ere behar beharrezkoak, desberdinki banaturik daude eta ugariago dira Ifarrean (Pas-de-Calais, Lorraine, Alsaziako potasa) Hegoan baino (Erdiko eta Probentzako minak). Banaketa desberdin honek ere esplikatzen du zergatik aurrerapen teknikoak bizitasun desberdinez moldatu dituen lu--rraldeak.

Europako Merkatu Batuak diferentzia hauk leundu beharrean, zorroztu eginen ditu, muga inguruetako lurraldeak (nazio arteko komertzioaren zabalkunderako egokiagoak) desarroila araziko baititu gehiago, gastu gutiagoko komununikabideak edukitzeagatik (industriazko haranak, Sena-

koa esaterako). Ohar gaitezen ia urte askotatik honantz nabari dela fenomeno honen desarroiloa: aberastasun ekonomikoak lurralde aberatsetarantz jotzen du, lurralde pobreak ezerezean utzirik. Mapa ofizialik (2) argitaratu izan da alde batetik Frantzian hamar urteotan fabrika berriak non imintzen diren agertzen duena, eta bestetik urrengo hamar urteetan zehar jende aktiboa non ariko den len bila (biztanleria gehitzearen, baserriak hustutzearen eta industria zaharretako —oihalgintza, ikatz etab.— anemiaren ondorio bezala). Mapa hauk zeharo disimetrikoak dira: sortu beharreko enplegurik gehienak Hegoan egon beharrean, fabrika berrien sortzea eta daudenen zabalkundea Ifarrean egiten ari da. Nekez asma daiteke desegokitasun haundiagorik komeni litzatekeenaren eta orain gertatzen denaren artean. Gauzen joera honi jeurt eragiteko Gobernuaren interbentzio kementsurik ez bada —Vgarren Errepublikan nekez gertatuko dena—, datozen urteetan gero eta urrutitze haundiagorik ikusiko dugu industriakuntza haundiko eta subenplegu haundiko probintzien artean.

*Dezentralizazioaren balantze urria*

Gobernuaren ekintzako balantzea arlo honetan, gerratik gora, ez da hutsa izan baina bai arras urria. Dezentralizazioaren agergarritzako fabrika berrien instalazioko mapek erakusten dute 10 urteotarik honantz sorturiko edo haunditariko firmarik gehienak ez direla depresio ekonomikuko

lurraldeetan jarriak izan, aitzutik ordea, Ifarrean. Penagarri baina honelaxe da.

Mapa haúekin batera datozen zifrek (3), Amenagement du Territoire-ko zerbitzu ofizialek argitaratuek, berretu besterik ez dute egiten pesimismo hau. 7 urtetan 600 enpresa bakarrik dezentraldu dira, Parisaldi izugarritik (Frantziako jendetik bostgarren zatia eta nazioko errentaren laurdenetik gora banatzen den tokia) probintzietarantz alde eginik. Baina enpresa Parisaldetik doan fabrika bakoitzak bataz beste 25 edo 30 pertsona daramatza, sei alokatu eta beren familiak. Zergatik? Langile guti dagoelako hiritik eta hiri inguruetatik alde egiteko prest, hemengo alokairuak probintzietakoak baino askoz haundiagoak direlako eta lagunak eta sarritan etxekoak ere bertan bizi direlako. Gainera enpresak ez du nahi langile gehiegi probintzietara eramaterik, orduan bizitzetxeak egin beharko bailitikee, horrela aldatze gostuak asko gehiturik. Nahiago du laneskua erabilgarri dagoen lekuan jarri eta honela bizitzetxerik egin beharrik ez, lekuko langileak ba dadukatelako non bizi. Beraz ez du larbiztanduriko lurraldetik beharreko kodrorik gutien baizi keraman nahi, bost edo sei pertsona fabrikagintza azkar zuzenduko, lekuko laneskua eratuko eta fabrika martxan jarriko dutenak.

Ba liteke zuek uste izatea 7 urtetan Parisaldetik 4.000 alokatuk, edo berdin dena, 15.000 edo 20.000 pertsona inguruk alde egitea ez dela askotzarik (% 2-tik 0,3-ra lurralde honetako biztanleriatik), baina ba dela zerbait. Hala noski, baina jakin beharra dago Parisaldea aldi berean asko

jendeztatu dela, zeren azken estadistika ofizialen arauera, alde honetan fabrika berrien instalazioz (berez debekatua) edo lehengo tailerren haunditzez sorturiko enplegu numeroa gutienez 60.000 izan baita, eta gainera instalazio hauek dakartzaten administrazio, komertzio eta "zerbitzu" enpleguak. Aldi berean bada, lurraldean sorturiko enplegu saila ehun batzu milataraino doa. Oso zaila da zifrarik aipatzea INSEE ez baita hauzi honi buruz eginiko estudioa argitaratzera ausartu, bere zerikusi politikoengatik. Hala ere argitaratu gabeko estudio honetako zifra batzuz baliaturik (ia 50.000 enplegu berri urtero Parisaldean) eta enplegu berriokin doazen pertsona ez aktiboak erantsirik (emakumeak eta haurrak), konklusio hauxe ateratzen da: lehengo biztanleriari 100.000 edo 150.000 pertsonatik gorako gehigarri bat gaineratzen zaiola urtero. Bestalde Bizitzetxe Ministerioaren ustez, 1958-n zehar Parisaldea 213.000 pertsonatan gehitu da, hauetarik 100.000 probintzietatik etorriak direlarik. Zifra hauk nahikoa koherenteak dira eta ba damaikute dato fidagarririk Paris inguruetako benetako hazte ritmoari buruz (hiria bera apenas aldatzen da).

*Parisaldetik joanak: 15.000-tik 2Q.QQQ pertsonatara*
*Parisaldetik joanakS ET.QQQ-tik 20.000 pertsonatara*
*Etorriak: miloitik gora*

Hazte ritmo hau zazpi urtetan miloi bat biztanletatik gorako gehitzeari dagokiona da. Zifra hau dezentralmendu politikak lortutakoarekin konparatu behar: 15.000-tik 20.000-ra pertsonak

alde egin du Parisaldetik. Balantzea argi dago: Parisaldea dezentraltzeko ahalegin benetako baina ez nahikoa eta guzti ere, hura hazten eta hazten ari da eta azkena dena, itxuraz lehen baino azkarrago.

Haugatik lehetxoago nioen Frantziako lurraldeen arteko diferentziak leundu beharrean, egunetik egunera haunditiuz doazela. Zeren Parisaldeko kasu patolojikoan argi egia dena beste lurralde batzutarako ere hala baita: pilaketa urbanoak gehituz doaz kanpoaren kalterako, eta urrengo mailan, pilaketa urbanorik haundienen onerako beti. Ifarrean Lyon, Marselle, Lorraine, Rouen, Nantes, Saint-Nazaire, etab., beren urrutiko periferiaren kalterako desarroilatzen ari dira, desarroilo ekonomikuko polorantz erakarriz lurrak eta lekuko tailer tipiek elika ez dezaketen biztanleria.

Honetaz, Parisaldeari buruzko arauketak ondorio bitxi bat ekarri du. Enpresek ez dute hiritik 100 kilometro baino gutiagora instalatzerik. Ondorio bezala, enpresa berrietatik erditsuak Paris 100-dik 200 kilometrotara inguratzen duen koroan jarri dira. Honela dezentralmendua dela-eta urtean 4.000 pertsona inguru (1.000 enpleguri eta 180 fabrikari dagozkionak) instalatzen direla lurraldetik kanpora diogunean, gaineratu beharra dago erdiak ehun kilometro bakarrik aldentzen direla Paristik. Honela bada, oso guti dira probintzietara heltzen diren "dezentralduak" eta askoz gutiago lurralde subdesarroilatuetara doazenak: Erdialde, Hegoa-Mendebal, Bretainia, etab.

Irakurleak segur asko galdatuko duena da ea dezentralmenduko politika frakaso biribiltzat jo

behar den. Ezezkoan nago. Dezentralmendu politikak bere izenez adierazi gabeko eta naturala denez zuzenki bilatu gabeko erresultatu bat lortu du. Egitez dezentralmendu politikak bere lekuan gera araztea lortu bestela segur asko berak ere Paris, Lyon, Bourdees edo Marselle-rantz joko zuen probintzietako jende zati bat.

*Migrazio nekazarien gutitzea*

Dezentralizazio politikak, lurralde anemikoak zuzper araztera zuzenduriko beste neurri batzukin batera —lurraldezko desarroilo elkarteen sorrera, ekipo gaiak fabrikatzeko ekonomia mistoko elkarteen sorrera, "alde kritikoei" eta "eraberritze aldeei" subentzioak emen, lurraldezko desarroilo deei" subentzioak eman, lurraldezko desarroilo plan adierazleak argitaratu— ez du Parisaldea establetzerik lortu —are gutiago tipitzerik—, baina bai pizkanaka hiltzera zirudien probintzietako hiri mordo bat berbiztu: Evreux, Chartres, Chalon-sur-Marne, Chalon-sur-Saone, Reims, Louviers, etab. Hiri guztietan imini dute industria berririk. A fortiori da hau egia Grenoble bezalako hiri haundi batzutarako, honen hazkuntza izugarriro bizkortu delarik instalazio berrien imintzez, edo Rennes bezala, non laster imintzeko den Citroenek egundoko bizitasun lokala sor arazi baitu. Laburpenez, bada, dezentralmendu politika honek kanpo inguruan edo bertan beheratasun osoan zeuden erdi inportantziako hirietara eragin dio jendeari lan bila. Politika honegatik izan ez balitz, jendeak ia larbiztanduriko hiri nagusietarantz joko zuen, kon-

diziorik okerrenetan (bizitzetxe krisisa, paroa). Politika honek ez du konzentrazio prozesorik azpikoz goratu, abio arras hondagarririk hartzea bakarrik ebitatu du.

Merkatu Batuak, bera gabe ere bai, baina astiroago desarroilatuko liratekeen eboluzioak azeleratzea dakarrenez gero funtsean, biztu eginen du hirien konzentrazio eta lurraldean desekilibriorantzeko mugimendua. Bistan dago desekilibrio honek atzerriko konpetentziari aurre emateko ekonomiazki ondoen lekuturik dauden lurraldeak faboratuko dituela: Lorena, Parisalde, Senako Haran, Grenoble, Marselle. Dudarik ere ez datozen urteetan lurraldeen hazkuntza desarroilo polo izugarri hauen inguruan ibiliko dela. Ondorioz lurralde arteko desberdintasuna gehitu eginen da: ez da beraz, gehiegi esatea Gobernuak bi politika elkarren kontrako darabiltzala Merkatu Batua martxan imini nahiz eta lurralden bizkundea bultzatuz.

1959-n uste izan zen lurraldeko desekilibrioak oker samarrez ikusten zirela. Orduan argitalduriko estadistika batek eduki zuen errua, probintzia bakoitzeko per capita errentak (errenta osoa biztanle numeroz zatitua) antzekotzera jotzen zuela agertzen zuelako. Komentarista ofizial batzuk berehalaxe atera zuten urte batzu lehengo hasitako lurraldeen armonimuntza politikaren ondorioak zirela. Egitez estadistika honek erakusten du lurralde arteko diferentziak ez direla noski bost edo sei urte aurrerago bezain haundiak. Arrazoia da aldi honetan zehar lurralde eskasetako jende zati handi batek alde egin zuela eta beraz —telefonoak,

kotxeak, konsumituriko gasolina tonaladak..., ia beidrnak izanik— per capita konsumoak gorantz eOgiten duela.

Ez dago dokumentu kontzientik probintzia arteko desberdintasun gehikorra gaur gutitzen ari dela frogatzekorik. Ba da, bai, probintzia pobrerik aktibitate berriez probetxatzen denik —fabrika berrigintza, turismoa—: Kosta Urdina esaterako, urtean ia bost edo sei hiletan turismotik bizi da. Ba liteke egunen batez Borgoina edo Erdiko Mendialdea ere turismoko aberastasun iturri berdinez balitatzea. Oraingoz zihur dakigun bakarra desberdintasuna gorantz doala eta Vendee-tarra edo Cotes-du-Nord-tarra (probintzia oso bateko ordezkari bezala) frantses pobrea dela, Senatarrak baino hiru bider errenta tipiagoz.

Une honetan hala ere, hiritarren errenten desberdintasunaz hasieran esana gogorazi beharra dago: erdiko senatarra esateak oker haundietara darama, zeren hori ganbara batean hilean 6.000 frankoz bizi den atso koitaduaren eta hilean miloi batzutako errentaduen elkarte haundi bateko buruzagi-zuzendari jeneralaren arteko batazbestea baita. Errealitatean desberdintasunak pilatu egiten dira. Aldebatetik Senako probintziako per capita errenta Vendee-koa edo Cotes-du-Nord-koa baino iru bider haundiago da eta bestetik probintzia hauetariko bakoitzaren barrenean ere errenta desberdintasun izugarriak daude, lehenago esan bezala. Beraz Vendeetar pobrearen eta errenta gizeneko hiritar baten arteko distantzia hainbat haundiago da.

## III. ENPRESEN TAMAINIARI BURUZKO DIFERENTZIAK

Frantziako estrukturazko desberdintasunak ez dira errentazkoak edo lur-aldeetako aberastasun ekonomikuzkoak bakarrik. Enpresen tamainiari buruz ere ba da beste arloetan bezain diferentzia haundirik eta behar bada zorrotzagorik. Hala nekazaritzan nola industrian nahiz komertzioan "haundi-tipien" arteko desproportzioa agiria da. Egoera hau, jakina, bapo probetxatzen dute "haundiek", xit trebeak "tipiak" beren onerako maneiatzen.

Azter dezagun lehenengo nekazaritzako panorama. Tradizo da Frantzia lurdun tipien nazio bat dela esatea. Izan ere, % 80 nekazarik lur osotik heren bat bakarrik lantzen du. Hau da 10 nekazari frantesetatik 8-k lur-azal globaletik heren bat lantzen du. Bigarren sailean % 16 nekazari sar ditzakegu erdizko etxaldeak lantzen dituztenak: 20-tik 50 hektareatako etxaldeak (50 hektarea lur osotik beste heren bat lantzen du. Gainetiko % 4 nekazarik lur osotik beste herena lantzen du eta bakoitzak 50 hektareatatik gorako etxaldeak darabiltza.

*Etxalde arteko desberdintasuna: 1-tik 200-ra*

Dagigun konparazio bat: azkenengo sailak (4 %) lehenengoak (% 8) bezalako lur zatia lantzen du, beraz haietariko bakoitzak bataz beste 20 bider lur gehiago darabil. Baina hauk bataz-

besteak dira, "tipien" batazbesteak eta "haundien" batazbesteak eta beraz ez hain adierazkorrar. Egotez Vexin-en, Beauce-n eta., ba dago esplotaziorik 50 hektarea baino gehitxoago ez ezik 500, 800 eta 1.000-raino ere heltzen denik. Era berean Pirinioetan, Bretainian edo Erdiko Mendialdean ba da esplotaziorik 20 hektareatara ez ezik 6,5 edo gutiagora ere heltzen ez denik. Izatez bada, desberdintasuna ez da 1-tik 150 edo 200-raino baizik lur landuari buruz. Gainera kontuan edukirik lur hauk tresna mekaniko diferentez lantzen direla, kalitate oso desberdineko haziak ereiten direla eta emankortasun oso desberdinak lortzen direla, garbi ateratzen da ez dagoela Frantziako nekazaritza orotasun berdintsutzat hartzerik.

Gertaera honetatik sor daitezkeen errenten diferentziak ikaragarriak dira. Frantziako nekazaritza berdin osatzen du hala lurdun tipiak zeinentzat zaldi bat galtzea tresna gabe geratzea bezala baita, nola —eta gero eta gehiago— lurdun nagusiak (ez beti jabe), zeinek burjes eder baten antzeko bizitrena baitarama eta Dinamarkako rekorden moduko emankortasunak ateratzen baitizkio bere etxaldeari. Hauen seme-alabak kolejiora doaz. Seme nagusia karreran ari zaio eta sarri nekazaritzari dagokian karreran, honek bere egunean lurrak zuzentzeko eta familiak nekazari tipiari lehendik kentzen dion distantzia gehitzeko modua emanen diolarik. Nekazari tipiak, eskalako beste ertzean, ez dezake haurrik eskolara bidal eta bere familiarekin batera bere lurkondoan bejetatzera kondenaturik dago seme-alabek hirira alde egin arte (formazio profesionalik gabeko proletariak)

gurasoak jaiotzatik harako miserian hiltzen utzirik.

Beste zifra batzuk ere baitesten dute nekazaritzako desberdintasunaren azterketa hau. % 96 lurdunek edo ez du ezein alokatu enplegatzen edo bat edo bi gehienez. Beste % 4-ak bi alokatutatik gora daduka. Oraingo zifra hau (% 4) lehenago ere aurkitu izan dugu lur landuaren hedadurari buruzko diferentziak azaltzean.

Dagigun beste zatiketa bat enplegu estadistiketan gabe produkziokoetan oinarriturik. Lehenengo ikusten duguna da Frantziako garirik erdi —eta garia delakoan gaude baserri tipietako produkziorik bereziena— % 2 laborarik bakarrik produzitzen duela, halaber Frantziako ardorik erdi % 2 mahastunek produzitzen duela, erremolatxarik erdi % 4 produktorek produzitzen duela etab. Begien bistakoa da beraz oraingo konzentrazio egoeran, Frantziako nekazaritza batetik milaka baserritar tipi oso pobrez osaturik dagoela eta bestetik lur zati haundiz, haur direlarik nazioko lur aberastasunik gehienaren emale, baita irabazien harrapatzaile ere, jakina.

*Lur konzentrazioaren prozesoa*

Konzentrazio prozeso hau ez dago bukaturik. Frantziako Plan-Batzordearen ustez urtean guti gora behera 50.000 pertsona aktibok alde egiten du baserritik, beste hainbestetsu ez-aktibo eramanik berekin (emakumeak, haurrak gurasoak), guztira bada, 100.000 pertsona inguru. Zifra arras garrantzitsua da hau 1961-ko udako baserri gorabeheren astuntasuna hobeto ulertzeko, bueltarik ga-

beko eboluzio honek gehien jotako lurraldeetan hain zuzen (Bretainia, Erdiko Mendialde, Ekialdeko Pirinioak, Hegoa-Mendebaleko baserri tipiak).

Teknokratarentzat, ikusmira tekniko hutsez, edozein esplotazioaren, baserriko nahiz ez, destino normala konzentrazioa da. Baina belaunez belaun beren habia eta bizipide izana uztera eta non aterbetu ez non lanik bilatu ez dakiten hirietara emigratzera beharturik aurkitzen diren familiak pertsonalki ezagutzen dituenarentzat baserriko esodo honek ba du gure aldion inola ere onartu ezineko alderdi negargarririk. Baina gainera konzentrazio prozesoa ez dago bukaturik. Baserriko prezioen (establetzera edo oso motelki igotera jotzen dutenak) eta azkar —nahiz eta desberdinki— igoten ari diren industria edo zerbitzu prezioen arteko alde gero eta haundiagoak gaurko nekazariei beren gurasoak baino gehiago produzi arazten die bizi ahal izateko, eta a fortiori egokiago bizitzeko. Baina gehiago produzitzeko ez da nahikoa ale gehiago ereitea ez hobeto lantzea, lantzeko lurra gehitzea baino. Horra konzentrazio gehikorraren bueltarik gabeko prozesoaren sustraia.

Lur gehiago edukitzeko bapo datorke hauzoak, miseriak jota, kalera alde egin beharra edo alboko lurren jabea zaharregia dela lan egiteko eta utzi egiten duela etab. Laburpenez, pilaketa demografikozko prozeso bat ikusten dugu hirietan eta beste bat bataz besteko lan lurraren hedadurazkoa etxaldeko. Era baterako mekanizazio prozesoak bakarrik egin dezake prozeso biok egoki abiatzea. Lur zati haundiagorik lantzeko laneskurik gehitu ezin bada, tresna efikazagoak erabili behar: trak-

tore azkarragoak edo indartsuagoak behar, goldatze, ereite, abonatze eta biltzeko tresna haundiagorik arrasta ahal dezaten. Baina alde batetik mekanizazio honek nekazariari mementuz lur zati haundiagoak lantzeko modua ematen badio, bestetik huraxe da bere geroko emigrazioaren arrazoi. Prozesoa gorantzkoa denez gero, erabiltzen diren tresnak etengabe eguneratu behar egunean baino egunean zerbait gehitxoago produzitzekotan. Baina berritze hau ezinezko zaionez gero, emigratu egin behar, baserrian segiturik ezinen bailuke kalean edukiko lukeen bizimailarik lortu: emazteak eta seme-alabek, bidezko denez, diferentzia honetaz pentsa araziko diote. Gainera behar bezala mekanizaturik ez dagoen mementutik gora, ez du ekipoa ordaintzeko eginiko zorrei erantzuteko haina aterako. Nekazari askok zorgintzako ziklo honetantxe pot egiten du, dela bere erantzupiderako gehiegi zorpetu zelako, dela ez zuelako behar haina zor egin eta honela bere esplotazioaren derrigorreko aurrerapena lorrindu zuelako.

### *Diferentzia izugarriak industrian eta komertzioan*

Utz dezagun nekazaritza eta goazen industriara. Hemen diferentzia askoz nabarbenagorik dago oraindik. Hala ere arinkiago pasatuko gara gai honi aurreko kapituluan ekin baitiogu.

Gingembre jauna etengabe eska ari zaiku "Frantzia E.T.E.-ko nazio bat dela" enpresa tipiak eta erdizkoak). Begiratu batez pertsonaia maite honek arrazoia dadukala dirudi, zeren industriako eta komertzioko alokatuen numeroa enpresen nu-

meroz zatitzen bada, 4 edo 5 alokatu ateratzen baitira enpresako. Modu honetara industria bakarrik aztertzekotan, 9 alokatu ateratzen zaizkigu enpresako.

Ba dakigu batazbesteek ez dutela zentzu haundirik edukitzen. Lehenengo, komerzioan batez ere, enpresarik gehienek alokaturik bat ere ez dadukatelako. Bigarren, mundu guztiak dakienez, alokatu sail galanteko firma haundiak daudelako automobilgintzan, kimikan, siderurjian, metalurjian, oihalgintzan, edo aeronautikan, obra publikoetan, etab. Esaterako Renaultek 65.000 alokatu daduzka; S.N.C.F.-k 300.000-tik gora; Charbonnages de France-k 230.000. Baldin alokatuen orotasunetik nazioarteko entzutedun hiru firma nagusiotakoak kentzeko esperimenturik egiten badugu, alokatuen batazbestea enpresako 5-tik behera jausten da. Hau bai ba dela Frantziako industriaren benetako argazkia: izugarrizko firmak, bakoitzak milaka eta milaka alokatu enplegatuz, eta alboan enpresa tipi pilo haundi bat haundien inguruan, bakoitzak 2, 3, 4, 5, edo 10 alokatutatik gora enplegatzen ez duela, eta erdian, bien arteko sektorea, 50, 100, edo 200 enplegatzen dituzten erdi neurriko firmak. Frantziako estruktura industrialen ikuskera hauxe da errealitateari dagokion bakarra: Gingembre jaunaren agerpenak gezurrezko bezain fantasiazko ditugu.

*I zaio 399-ri*

Bi estadistika sail ofizialek argitzen du bueltarik gabe gagozkion gaiaren egia. Lehenengo, ne-

gozio zifren estadistikak (4). Hazienda Ministerioko estadistika honek agertzen dauku oinarri zerga bakarrik (beren inportantzia urriagatik) ordaintzen duten enpresek, nahiz eta xit ugariak izan (% 76 totaletik), industriako eta komertzioko negozio zifra osotik huskeria bat bakarrik egiten dutela (% 9). Beraz nazioko negozio zifratik bederatzi hamarren enpresarik laurdenek bakarrik seguratzen dituzte. Ba dugu ia xantzetako ez den konzentrazio indize bat. Baina honez gainera 9/10 hauetatik firma nagusiei, hau da, urtean mila miloitatik gorako negozio zifradunei, dagokien zatia bilatzen badugu, konzentrazio izugarria aurkituko dugu: 4.300 enpresak (% 0,24 totaletik) negozio zifra osotik % 45,8 egiten du.

Beste modu batera esanda 400-dik enpresa batek berak bakarrik egiten du ia gainetiko 399-k batera hainako negozio zifra. Azterketa honi segiturik zehatz genezake 280 enpresak (% 0,16 totaletik) ia nazioko negozio zifrarik laurden egiten duela (% 12,16) egiten duela, etab.

Konzentrazio izugarri hau baitetsirik uzten du alokairuei buruzko bigarren estadistika sail ofizialak (5). Frantziako alokaturik gehienek (% 55) % 0,7 enpresatan bakarrik lan egiten dutela erakusten du. Beraz 150 enpresatatik batek bakarrik gainetiko 149-k batera haina alokatu enplegatzen du. Ondorengo zifra honek aurrekoek baino zehazkiago ematen du benetako egoeraren berri: % 0,1 firmak alokatuen hirugarren partea (% 32) enplegatzen du: 1.800 firma, bakoitzak 500 alokatutik gora enplegatzen dutenak.

Frantziako industria eta komertzioko konzen-

trazio zorrotz hau ezin, jakina, adar batzutako kontuak bakarrik izan. Esaterako siderurjian 4 taldek produzitzen du % 80 altzeiru frantses; 5 elkartek irabazten du % 90 petrolio; konstrukzio elektrikoan % 4 firmak egiten ditu industria honetako negozio zifra osotik hiru laurden (% 72); beiragintzan % 3 enpresak produkzio erditik % 61; konstrukzio gaietan % 2 enpresak baino gutiagok (% 1,8) kontrolatzen ditu aktibitate honetako bi heren; kimikan ere ia beste hainbeste gertatzen da: % 6 firmak kontrolatzen du negozio zifrako 2/3-tik gora (% 69); optikan are okerrago oraindik: % 1,2 enpresak egiten du negozio zifrarik erdi, etab. Adibideak eman eta eman segi genezake.

Konzentrazio hau industriako kontua bakarrik dela pentsa ez dezazuen, ikus ditzagun orain komertzio jeneralari eta jatekoari dagozkien adibide batzu. Frantziako komertzioa dendari tipizko sare haundi bat delakoan daudenek hausnar zifra hau: almazen ez espezializatuei buruz (hau da, edozein gai eta gauza saltzen dutenei buruz), benetako irabaziaren gaineko zerga ordaintzen duten komertzioek eginiko negozio zifratik 2/3 parteak % 6 enpresari dagozkio. Jan komertzioan benetako irabazidun komertzioek eginiko negozio zifratik % 30, % 6 komertziok egina da; jaki dendei buruz negozio zifrarik erdi % 8 enpresak egiten du. Jantzi sektorean % 1 firmak kontrolatzen du negozio zifratik % 21. Esne industrian % 5 enpresak baino gutiagok seguratzen ditu sektore honetan nazioko aktibitateko 2/3 parteak (% 67), etab., etab.

*Konzentrazio prozesoa ez da geratzen*

Proportzio hauek ez dute komentariorik behar. Konzentraziorantzko prozesoaren haundiaz esan duguna sendotu besterik ez dute egiten. Konzentrazio hau berriz sektore batzutan —jan komertzio, konstrukzio, mobiliarioak— garrantzia gutikoa bada, hala ere hasi zaie ia eragiten. Izan ere mugimendu hau jeneraltzen ari da. Esaterako komertzioan hilero 500 edo 700 gutikarik (gutika saltzailek) bere dendak zerratzen ditu, elkarte haundietako 200 sukursal berri sortzen diren bitartean. Industrian ere berbera gertatzen da: urtero konzentrazioa gehituz doa eta mugimendu hau beheraldi ekonomikoetan baino goraldietan azkarrago zabaltzen da (6). Dena dela, bueltarik gabeko prozesoan aurkitzen gara. 1954-58 aldian argitalduriko zifrek agertzen dute:

— % 5 enpresa tipi (bost alokatutaik beherakoak) desgertu direla.

— gainetiko industria etxeen numeroa gehitu egin dela alokatu enplegatuen numeroaren erlazio zuzenek (% 2,2, 6-tik 500-ra alokatudunak; % 9,1 50-tik 500-ra alokatudunak; % 12 2.000-tik 5.000-ra alokatudunak; azkenez % 25, 5.000 alokatutik gorakoak).

Uste dut ez dagoela metodo hoberik konzentraziorantzko prozeso argi ikusteko. Komertzioan ere berdin: pertsonal enplegatu gutiko edo batezko almazenak % 2 gutitu dira, 6 alokatutik gorakoak % 7 gehiturik.

Orain arte —konturatuko zinetelakoan nago— enpresen estrukturazko konzentrazio teknikoaz

bakarrik mintzatu gara. Izatez botere ekonomikoaren konzentrazioa askoz haundiago da, zeren gainera enpresako autonomia juridikorik itxuraz aldatzen ez duten bi prozedimendu baitaude erabakiak zentraldu ahal izateko.

*Finantzazko partizipazioak, administrari berdinak*

1. Bi metodoetarik lehenengoa finantzazko partizipazioak hartzea da. Enpresa batek —berdin da merkatari nahiz finantzari izan— fabrika nahiz komertzio apartekoetako, edo fabrika nahiz almazen batzu dituen enpresa haundi bateko kapital zati bat erosten du (hasieran nahiz bere funtzionamenduko une eman batean). Bere kapital zati honi eskerrak, lehenengo enpresak bere abotsa entzun arazi ahal izanen du bigarren enpresako akzionista batzarretan eta, behar izanez gero, erabakiak alda arazi ere bai. Jacques Houssiaux-en liburu gaur ia klasikoak, "Monopolio indarra Frantzian" (7) adierazten du nola esaterako, Frantziako 100 enpresa haundienak 900 partizipazio finantzazko daduzkaten beste firma batzutan, hau da, bakoitzak 9. Partizipazio hauetariko zazpigarren partea (130) 100 firma hauexetakoa da: hau da, 100 "nagusietarik" bakoitzean. Banku haundi batzuk dozenaka partizipazio finantzazko dadukate beste firma batzutan (banku bakoitzeko 60, 12 haundienetan).

2. Konzentraziorako bigarren modua administrari berdinena da. Sarritan lehenengoarekin loturik dago hau. Bere interesak jagoteko, firma batek

(batzutan finantzazko partizipazio bat beste batean dadukala) bere administrari bat edo batzu beste firma bateko administrazio kontseiluan jesartzea lortzen du. Askotan ordea aulki hauk konpetentziazko edo harreman onezko arrazoiengatik ematen dira, aurretiko partizipaziorik gabe. Houssiaux-ek dioenez, 100 firmarik haundienetako 975 administrariek 3.120 aulki daduzkate administrazio kontseiluetan, hau da, bakoitzak hirutik gora bataz beste. Aulkiotarik ia 480, 100 firmarik haundienetakoak dira, beraz bakoitzak 5 bat administrari daduzka beste 99-ren berdinak.

Harreman finantzazko edo pertsonazko hauek —biek sarritan— firmen arteko harreman baketsuak seguratzen dituzte, egitez indar ekonomiko pribatuaren konzentrazio askoz haundiagora jorik negozio zifrei edo alokatuei buruzko estadistika ofizialetan —berez ere sobera argiak— agertzen dena baino.

### *Haundien indar ekonomikoa: inbersioak, alokairuak, prezioak*

Baina gertaeren deskripzio hau ez da nahikoa. Galde beharra dago zer ondorio dakarren enpresen tamainiako desberdintasuna. Ekonomia mailan, ikus berri dugun konzentrazio neurri honek mila batzu firmari uzten die nazioko produkzioa bere orotasunean seguratzeko eta gidatzeko ardura, esportazioak egiteko —edo ahazteko— (esportazioa benetako inperatibo da produzitzen duenetik hamarren bat normalki esportatzen duen naziorako). Renaultek automatizatzerik erabaki

ez balu, Citroenek Rennesen fabrika berri ultramoderno bat egiteko buruerarik eduki ez balu, Sedelor-ek Dunkerquen bilduma siderurjiko record bat imintzerik nahi izan ez balu, etab., Frantziako produkzioaren geroa asko okertuko zen. Oraingo produkzioaz harago, firma hauek era ebazkorrez taxutzen dute biharko Frantzia: beren inbersioek, gutiegiek nahiz gehiegiek, egokiek nahiz desegokiek, moldatzen dute nazioko geroko ekonomia. Gainera inbersio hauk egiteko enpresek, autofinantzazioari esker, jokatzeko askatasun osoa dadukte, eta hona nondik geroko egoera enpresarien (guti batzuren) oraingo gogoaren pentzudan dagoen zeharo.

Enpresen inperioa ez da puntu honetan bakarrik geratzen. Alokairu kontuan ere berek ezartzen dute legea. Beretariko guti batzuk "alokairu onen politika" delako kontraseinu neokapitalista jaurtiki zuten eta aurrelari izan nahiko gero eta firma gehiago saiatzen da hura praktikatzen... Berek dira baita alokairu erdigarantituzko (indemnizazioz, ordurik gutitzekotan) kontratuen formula jaurtiki zutenak, baita akzio banaketa ere (sinbolikoa) pertsonal artean. Formula honetaz hau nahiz ori uste izan, onartu beharra dago firma nagusiei dagokiela beren aitatasuna. Formazio profesionalaz ere enpresa nagusiak arduratzen dira inor baino gehiago eta berak dira produktibitatearen alde ahaleginik haundienak egiten dituztenak (automatizazioa batez ere petroliogintzan, konstrukzio mekanikoan, oihalgintzan..., desarroilatu izan da). Prezioak ere enpresa nagusiek ezartzen dituzte (sarritan elkarren arteko sokaz),

berek hautaturik nola izendatu, merkatuko burruka zorrotzez ala aurretiko akorduz. Baina haundien jokoak maila guztiak harrapatzen baditu, zer arraio egiten dute orduan "tipitek"?

### *"Tipiak" hornitzaile eginkizunera baztertuak*

Gaurko ekonomietan apurka apurka enpresa tipiak firma haundien horniketara bazterturik aurkitzen dira. Enpresa tipiak ez dezakeenez gai konplikatuegirik egin (kotxerik, obra publikoetarako makineriarik, etab.), firma nagusiak egokituko duen pieza baten edo batzuren produkzioan espezializatzen da. Gainera enpresa tipiak ez daduka klienteak bilatzeko komertzio sarerik, hain firmak egiten dizkion eskabideak hartzeaz konformatu baizik. Baina nola enpresa tipiak ez dadukan firma haundiekin eztabaidatzeko modurik —haiexen mende baitago bere bizirik irautea—, derrigorturik aurkitzen da enpresa nagusiak —edo nagusiek— jartzen dizkion prezioak onartzera. Berdin gertatzen da ordainketako atzerapenekin: enpresari tipiak onartu egin behar atzerapena, dozenako edo ehundaka enpresari tipikin konpetentzian ari baita eta haik prest egon firma nagusiko eskabideak edonoiz harrapatzeko. Laburpenez, bada, lanik egin ahal izateko hornitzaileak derrigor onartu behar firma nagusiaren kondizioak.

Enpresa tipia edonola maneiatzeko moduko firma da. Firma nagusien eskabideei erantzuteko hain harotan 80 ordu lan astero eta gero bi hiletan bere ahalaren % 50-ra jautsi. Enpresa tipio-

tako pertsonala da garai berriotako proletargoa. Lege babesik gabeko proletargoa (zeren industriadun tipiak —inoiz artisano soila— eten gabe hausten baititu lege sozialak), alokairu minimo garantiturik gabe (eskerik dagoenean bakarrik dago alokairurik), etorkizun xit urriz (enpresa hornitzaileok inbersio guti egiten dute, firma nagusiek ordainduriko prezioekin ez baitadukate beren tresneria berritzerik eta modernotzerik). Enpresa hauetako gaurko egoerak biharko kapitalismoaren ikuspegia damaiku: alokatu-jaunen ondoan (enpresa haundietakoak) gero eta alokatu-esklabo gehiago agertuko da (enpresa tipietakoak). Probintziako tailer tipietan enplegu segururik eza, alokairu minimo garantituaren pareko edo azpiko alokairuak —lege guztiak eta guzti ere— ordaintzeko ohitura, lurralde hauetako langile familietako seme-alabentzat ia kultura biderik bat ere eza, horra garai modernoetako behe-proletargoa zer izanen den zori-xarrez iragartzen duena.

*Enpresa nagusien interbentzio politikoa*

Enpresa nagusien ikuskera hau ezosoa litzateke beren garrantzia ekonomikoaz batera politikan duten pisuaz mintzatu ezik. Zati bat arlo honetako indarra beren indar ekonomikotik datorkie. Firma batek hango bizitza ekonomiko guztia oinarritzen duen lurraldeetan (esaterako Michelin-ek Clermont-Ferrand aldean), asma litezkeen presio bide guztiak daduzka lekuko agintariak eta jeneralki biztanleria osoa enpresak nahi duen zuzenbidetik joka arazteko. Zerratzeko edo orduak gutitzeko

mehatxuen aurrez —inguru guztiko beherakada automatikoa dakarkeena—, lekuko agintariak beharturik aurkitzen dira firmaren esijentziei amore ematera (esaterako zerga edo mobiliario kontuan) enpresak ez dezan aktibitaterik labur, nahiz eta esijentziok ez izan ez arrazoizkoak ez zuzenak.

Agintari-firma arteko soka hau hainbat ugariago ianen da zenbat eta firmak agintarion hautaeran gehiago lagundu. Tradizio da ia hauteskunde kanpaina bakoitzean Frantziako ugazabek beren lagunen artean dirua batzea "kandidato dezenteen" gastuei erantzuteko. Kandidato dezenteok ez dira industriako eta lurreko jabego pribatuaren on jeneralak eta lokalak zaintzera konprometatzen direnak besterik. Esaterako, Boutemy jauna urteetan arduratu zen C.N.P.E.-tiko diruen banaketaz eta Isorni jaunak (Petain-en abokatu antzina eta deputatu gero) bere "Ainsi passent les Republiques" liburuan kontatzen du nola egiten zen miloi hauen banaketa, propaganda liburuxka "onak" eta gainetiko hauteskunde gastuak ordaintzeko erabiltzen zirenak.

Firma nagusien politikan sartzea oso modu ezkutuz inguraturik dago, herritarren susmo gaitzak eskatu bezala. Enpresa nagusi pribatuek guztira lobby bat egiten dute, beren egite eta asmoez gainera lan, ohar, estudio, eta komentario mordo haundi bat argitaltzen duena, izparringiak, parlamentariak, ministro gabineteak, administrazio publikoak... elikatzeko, eta firma hoiexetako erreibindikazioak direla nazioko onari komeni zaizkion bakarrak frogatzera destinatuak. Lobby-a parlamentarien interbentzioak, hauzi idatziak eta hi-

tzaldiak oso osoan preperatzeraino heltzen da, haiek firmatzea edo esatea besterik ez dutela. Debre jaunak ba daki zerbait honetaz, senatore baino ez zenekotik. Gehienean zalapartarik gehien ateratzen duten lobbyak ez dira efikazenak. Lobbyen helburua botere publikoengandik aldeko neurriak lortzea da: bitartean batzuk hizpide asko ematea nahi, bestetzuk ezkutuan pasatzea. Gainera esan beharra dago gizon publikoei bidalitako paperketa sarritan abantaila promesaz lagundurik doala eta hau edonori zaio tentagarri. Askotan "sobreak" edo zuzenki xekeak dira, baina gaur egun xit bakana da lobbyak hain prozedimendu zikinik erabiltzea. Compagnie du Canal de Suez-ek, Nasser koronelarekin gaizki zebilela, "aldeko" hizparringi guztiei xekeak bidali zizkien hauzian hartzen zuten ardura eskertzeko. Kasu hau denak harriturik uzteko bezain erraroa izan zen.

*Lobbyak edo "presio taldeak"*

Gehienean lobby batek edo enpresa haundi batek bizitza publikoan sartzeko erabiltzen dituen medioak leunagoak izan ohi dira. Daitekeena da —modurik edukiz gero eta enpresa haundiek bakarrik permiti dezakete horrelako luxorik— iritzia sobornatzea (publizitate masiboaren bidez) edo hizparringi bat erostea botere publikoari eta nazioko sentimenari eragiteko bide emanen diona: Boussac-k L'Aurore; Provost-ek Paris-Match; Del Duca-k Paris-Jour; Hachette posse-k France-Soir eta Paris-Presse; Pouillon-ek (C.N.L.-koak) U.N.R.

Le Tac bitartekoaren bidez, Parisko astekari bat (Paris 18) eduki nahi izan du, etab.

Lobbyek eta firma nagusiek gero eta axola gehiago dadukate goiko administratiboez eta ministro gabineteez. V Errepublikako parlamentarien gainbeheratzearen ondorio da hau. Esaterako, zuek industriako ministroaren edo Haziendako ministroaren gelaurrean egun bat eman ahal bazenue eta ate-mutilei galdatu zer jende modu dabilen handik, ehuneko honenbesteko haundi bat profesio adar nagusietako edo firma nagusietako buruak direla jakinen zenukeite, subentzio bat edo esonerazio fiskal bat, prestamu bat, hobari bat, edo eskari gehigarriren bat eramatera datozenak. Baina guzti hau ez firmaren beraren (diote), nazio osoaren onerako baizik. Izan ere ez dago ezer jakinagorik profesio erakunde haundien argudioetan aurretik denen ona jartzea jartzea baino, interes pribatuen alde pribilejio gehigarriak harrapatzeko. Ia mende erditik honantz egia bilakatu da Estatu Batuetan dabilen formula hau: "General Motors-i on zaiona, Estati Batuei ere on zaie".

Publizitatearen oraingo bizkundeak era ederrik eman die firma nagusiei beren ardura denen ona bilatzea dela sinets arazteko jendeari... Eta arrazoi bakarra hartarako finantza bideak dituztela: hizparringietan publizitatezko orrialde osoak eta telebisioko programak (sarritan artezkoak) erosi, begi propaganda izugarria pankarten bidez. Kanpaina izugarriro gostutsu hauek ezerezean uzten dituzte kapitalismoaren kontrako talde politikoek egin nahiko kanpainak. Ez dago dudarik nazioko politikan sartze hau hamar bidertu egin dela fir-

ma nagusiek (nork jakin zer aberastasunekoek) sozialismoari gerra egitea erabaki dutenetik gora. Behinolako enpresek motelago zeramaten burruka hau modu gutiago zedukatelako. Ikusmira honetatik, industrian nahiz komertzioan hain argi ikusi dugun konzentrazio gehikorrak asko zailtzen du sozialisten burruka gaurko kapitalismoaren kontra, honek, aberatsago eta konzentratuago egonik, medio gehiago baitaduka burruka bebe gogara eramateko.

## IV. KAPITALISTEN SOLUZIOAK DESBERDINTASUN HAUEI

Heldu da ordua ikus berri ditugun diferentzia mota guzti hauen aurrez —errentazko, lurraldezko eta enpresen tamainiazko diferentziak— jokabideak hartzeko. Zentzuzko eta desiragarri iritzi behar al diogu lur enpresak azkar konzentratzeari, urtean 100.000 pertsonak inguru behar haina bizitzetxe gabeko hirietara alde egin behar izanik? Ontzat jo behar al da firma industrialek, gero eta haundiagoek, esklabo bihurtzea enpresa tipiak eta elkar harturik beren artean banatzea merkatuak eta klienteak? Egokitzat eman behar al da Frantziako errentetan 1-tik 2.000 edo 3.000--rainoko aldea egotea?

Frantzia osoan pertsona guti dago hiru galdera hauei baietz erantzutekorik. Denoi min ematen daukute —kontzientziaz ez bada hitzez behintzat—

on jeneralaren hain kontrako diferentzia estruktural hauek. Baita mingarri zaiku firma pribatu haundiek gero eta garrantzia gehiago edukitzea nazioko etorkizun ekonomikoan eta garrantzia honek hain sarbide haundia ematea politikan. Haugatik mundu guztia ahalegintzen da —gehiago edo gutiago, jakina— diferentzia hauei erremedioak imintzen. Baina erremedio hauk zer eratara pentsatzen diren, desberdintasun hauei buruz bi soluzio eredu haundi agiri dira: eredu bata ekonomiaz kapitalista (politikaz kontserbadore) eta beste eredua ekonomiaz dirijistago eta sozialistago (politikaz berdinkorrago). Zeintzu dira Frantziako ekonomikako desberditasun estrukturalei kapitalismoak damaizkion soluzioak?

XIX garren mendean hasierako kapitalismoak problema guti zerabilen honetaz. Bere ustez, konpetentzia hutsak eta hotzak konpondu behar zituen ahalik ondoen eragozpenak. Bizirik irauteko modurik ez zedukaten enpresak lurraldeek, hiritarrek desagertu edo morroi mailara makurtu behar. Hau gainera ederto zegoen zeren azken batez mundu guztia probetxatzen baitzen errejimen berri honetaz: langileek pozik ikusten zuten firma haundien zabalkundea alokairu hobeak ordaintzen zituztelako; klienteak prezio ohbeetan hornitzen ziren, produktibitaterik haundieneko enpresek bakarrik irauten baitzuten biizrik; jendeak harantz jotzen zuen lurradeak aberatsagoak ziren eta jende hau lurralderik pobreenetatik zetorren, etab.

Arrazoiketa hau aspaldi utzi dute kapitalistek ergelegia zelako: ez zituen kontuan hartzen mi-

serian bizi ziren familiak, enpresa tipien zerratzeak lan gabe utzitako langileak, baserriko esodoa eta pilaketa urbanoaren drama sozialak (bizitzetxe krisisa, enplegu bilaketa, etab.). Oraingo kapitalistek zazpi neurri sail proposatzen dituzte estrukturazko desberdintasunak leuntzeko (edo beren okerrak zuzentzeko): konzentrazio "bigunagoa" eta cartel-a, enpresen tamainiari buruz; joan-etortze demografikoak eta lurraldeen desarroiloari bultzadak, lurralde arteko desberdintasunei buruz; azkenez alokairuen eta zergen armonikuntza, salmentetako desberdintasunei buruz. Guzti hauetaz gainera, zazpigarren bide bezala, sektore publikoa zuhurki erabiltea.

*Konzentrazio "bigunagoa" eta cartela*

Enpresen tamainiako desberdintasunak dakartzen okerrak konpontzeko erarik onena industriako eta nekazaritzako konzentrazioa burutsuki eramatea da. Integrazio bidean urrutiago jotzeko premiarik ez den bitartean, oraingoxe egoerari eutsiko zaio. Esaterako, konzentrazioak gizarte, teknika edo zerga arrazoiengatik onena harrapatu duela uste den bakoitzean, aurrerantzko mugimendua geratu eginen da. Kapitalismoak beraz onartzen du konzentrazioa mugatzea (hortik datorren enpresa tipien ugaltzeaz), baina bakarrik konzentrazio gehikorraren ritmo jeneraleko une izendatu batzutan. Aurretik konzentraturik egoniko enpresa bat askotan zatitzerik ere gertatuko da sarritan. Erabaki hau sarritan enpresako zuzendaritzatik dator, administrazio gastuei gehiegi baiteritza

enpresa ia haundegia delako eta beraz neurriz gorako burokrazia behar, indar ekonomikoa eta emankortasuna guti araziz. Sarritan konzentrazioa (desiragarri izan arren) frenatu ere egiten da, aitor-enpresen batzu (tipiak edo erdizkoak) gorderi kagintariak bihozbera arazteko edozein profesioren zorteari buruz: honela abantaila gehigarri batzu lor daitezke (prezio garantituak, prestamuak gostu onean, laguntzak, probilejio fiskalak, etab.) edozein profesiotara zabalduko direnak (konpetentziaren izenez —esaten dute orduan—, enpresa bati —tipi nahiz erdizkobesteei baino gehiago laguntzerik agintariei debekatzen dien konpetentziaren izenez).

Konzentrazioa "biguntzeko" modu hau oso hurbil dago cartelen jokotik, firma nagusien arteko soka bat baita (tazitoa bederen) enpresa tipi batzuri bizitzen uzteko. Aurreko kapituluan nahikoa hitz egin dugu cartelen jokoaz. Orain gogoratu besterik ez dugu eginen: prezio, produkzio, publizitate gastu, esportazio eta abarri buruzko sokak. Baita sarritan —eta konpetentzia biguntzekotan— enpresa nagusiek finantza partizipazioak hartuko dizkiote elkarri (A-k B-ko kapital zati bat daduka eta honek halaber A-ko kapital zati bat daduka eta honek halaber A-ko kapital zati bat daduka); edo administrari berdinak (X eta Z era batera A, B eta D firmetako administrari dira). Finantzazko eta pertsonazko harreman hauek ebitatuko dute burruka zorrotzegia izatea eta firmen tamainiako oraingo desberdintasuna astundu gabe manten araziko da eta okerrak firma batzurentzat bigunduko.

Espiritu berberak eragiten dio neokapitalismoari lurraldezko diferentziei buruz ere. Berez "dabilela merkatua bere gisa" uzten du, hau da, enpresek lekutzeko ondoen deritzaten lurraldeetan desarroila daitezela. Era batera aktibitate ekonomikorik lekutuenak desagertzeko libre daudenez gero, prozesoaren buruan lurralde bakoitzak zertarako gehien balio huraxe produzituko du.

Baina honek —zeroiek ere ia pentsatzen zaudetenez— lurraldezko diferentziak leundu beharrean gehitu egiten ditu alde batzu bereziki horniturik baitaude aurrerapen teknikuko hain unetan desarroilatzeko. Guztiz egia. Horregatik mugimendu honek izugarrizko esodo demografikoak sor eta manten arazten ditu. Baina orduantxe sartzen dira Estatuak lurraldeen zuzperkuntza lortzeko (itxura politikoz) imintzen dituen mekanismo leuntzaileak. Bertan behara uzteko dagoen holako edo halako aktibitate zirika dezala eskatzen zaio. Holako edo halako azpi-estruktura gastuak ere bere kontu hartzeko eskatuko zaio (kanale bat, karretera bat, trenbide bat, bortu bat, aireportu bat, zentral elektriko bat, etab.) lurraldeari, desarroilo ekonomikoa bukatzean, bizitza berririk emanen diola uste dena. Laburki, bada, carteletan egin ohi den antzera, ahalak eginen dira merkatuko eta Estatuko jokoa konbinatzen.

Baina, jakina, beti jokatzen da norbaiten kalterako: dela beste lurralde baten kaltez —besteari izendaturiko eta akaso berak mereziago zituen subentzioak probetxatu ahal izanen zitukee-

lako—, dela zergapekoen kaltez, berek ordaindu behar baitituzte Gobernuak erabakitako subentzio edo prestamoak, sarritan berriz onura ekonomiko haundirik gabekoak. Orduan, konkomitante guztiok kontuan edukirik, aitor dezakegu erresultatua ez dela ederregia, ez baitago diferentzien leuntzerik, bestela gertatuko zatekeen baino okertze gutitxoago bakarrik baino. Konklusio honek ez nau askorik harritzen: lurralde arloan da hain zuzen kapitalisten soluzioak gaurko problemei gutien egokitzen zaizkiena.

*Alokairuen eta zergen armonikuntza*

Errenten desberdintasunari buruz teknika neokapitalistak are okerrago dira oraindik. Kapitalistak prest daude —alokatuen burruka zorrotzagatik, jakina— premiazkoen zaizkien langileak (pertsonal xit kualifikatua, injineruak) ondo ordaintzera, edo beren kide egin nahi duten pertsonala koadroak, zuzendaritzako pertsonala). Baina ia bost axola zaio beste mailatako errentarik, apropos utzirik geldi edo gutitzen (prezioen gora aldian).

Diferentzia funtsezko hau beti gogotan eduki behar dugu kapitalista mordotxo batek errenten diferentziak leuntzeko proposatzen dituen metodoez hitz egiten dugunean, nola baitira: alokairu garantituak (lanorduen aldatzeetatik datozen alokairu diferentziak leuntzeko), ordu-alokairuak hileko bihurtu (hile-alokairua arautzeko), jubilazio gehigarriak (koadroenak esaterako), paroaren kontrako seguroa, etab. Guzti hau —ezerez baino ge-

hiago izanik— gehiago doa alokatu maila jakin batzu (guti) faboratzera errenten piramidea haustera baino. Estadistika ofizialek erakusten dute kapital mobiliarioen errentak (elkarteetako akzioak) eta kapitalak berak ere lanaren errentak baino azkarrago gehitzen direla eta hauk jubilatu zaharren eta ekonomiaz makalen errentak baino azkarrago gehitzen direla. Laburpenez, bada fenomenoari buelta emateko ahalegin motel batzu eta guzti ere, errenten desberdintasunak —1-tik 1.000--raino baino gehiago— haunditzen segitzen du.

Estatuari, jakina, honetan ere eskua sartzeko eskatzen zaio. Esaterako, elkartasun-hondoen sortzen zaharren egoera nazioko talde aktiboei buruz are okerragotzea eragotzi nahi du. Halaber, Estatuak lur langileen seguro sozial eta familiarretako gastuak bere gain hartzeari esker, gutitu egin da nekazariek irabazten zutenaren eta komertzioko eta industriako langileek kobratzen zutenaren arteko diferentzia. Era berean lanik gabeko langileei eta gaitz fisikodunei banaturiko subentzioei esker, gutitu egin da hauen eta gainetiko hiritarren errenten arteko diferentzia. Azkenez errenta zerga progresiboei esker —zerga tasak % 0-tik, urtean 220.000 franko zaharretik beherako errentarako ezkongabeentzat (660.000 bi haurretako sukaldeentzat), % 66-raino doaz, errenta haundiagoetarako— Estatuak gutitu egiten du errentetako desberdintasuna. Baina iruzur fiskalaren gaurko haundierak eta legeak errenta efektiboko zati eder bat ezkutatzen uzteak (Estatuko tituloen errentak, enpresek ordainduriko gastu jeneralak, halako profesioei aparteko errebajak) izugarrizko mozten

dute bide honen efikazia, nazioko errentaren bir-banaketarako harma bikaina izan litekeen bidea noski —eta izan ere izan zena Attlee-ren Ingalaterra laboristan—.

Laburpenez, errejimen kapitalistek errenta diferentzien kontrako burrukan darabilten hainbat prozedimendu —pribatu nahiz publiko—, arrazoi askogatik oso efikazia urriko da. Neokapitalismoaren aldekoek ondo dakite hau. Beraz, diferentziak berak baino diferentzia hauek sor arazten duten haserrea leuntzen gehiago arduratzen dira. Honetarako "giza harremanezko" hainbat teknika erabiltzen dute. Helburua da edo langileari ordan sikolojiko bat tante bat dela sinets araziz) edo bere isiltasuna edo errespetoa erostea (hobari partikular batzuren eta enpresako izparringien bidez). Metodo hauek ez dute alokairuen desberdintasunik leuntzen, baina bai ahatz arazten saiatu, metodoon biktima direnei hain zuzenberen sortzeaz konforma arazi. Bide berdinetik Gobernuaren deiek eta deiek ere "alokatuen zentzu onari" eta sindikatoen "erantzukizun profesionalari" ez dadukate beste helbururik.

### *Sektore publikoa interes pribatua onerako erabili*

Ez dugu oraintxe arte —behar bada behin-edo, baina bide batez— sistima kapitalistak estrukturazko desberdintasunak edo behintzat hauen ondorioak leuntzeko darabilen zazpigarren eta azken prozedimendu honen berririk eman. Hala ere, sarri erabiltzen dena da eta anitz eta anitz inziden-

tzia garrantzitsu daduka: sektore publikoa interes pribatuen onerako erabiltzeaz ari naiz.

Ez dakien batek uste du sektore publikorik (sektore pribatutik aparte) egotekotan, jokabide ekonomikuko erregela berezi batzurengatik dela eta erregela hauexek justifikatzen dutela haren esistentzia eta erregela hauk botere publikoak ematen dituela, sektore publikoaren jabe eta buru delako era batera. Egitez, legez, sektore publikoaren zuzenbidea botere publikoak erabakitzen du. Baina indar pribatuek botere publikoen gain zer garrantzia duten kontuan edukiz gero, zuzenbide hau gehienean botere publikoak eta interes pribatuak elkarrekin erabakitzen dute. Hona adibide batzu:

S.N.F.C.F.-k —enpresa publikoa— tarifa berririk jartzea erabakitzen duenean, trena sarri erabili beharreko industria pribatuek (kimika, siderurjia, konstrukzio gaiak) botere publiko erantzulearengana jotzen dute (Lan Publikoetako eta transporteetako Ministeriora) tarifa berriok ez dezaten beren salmenta preziorik kehiegi graba. Behar bada, berriz, S.N.C.F.-k dadukan trenbideen esplotazio gastua bera baino tarifa tipiagorik lortzeraino ere helduko da. Kasu honetan zerbitzu publiko honek industria pribatuari subentzio bat emateko zeregina balu bezala jokatzen du, zerbitzuen benetako salmenta preziotik beherako prezioan fakturaturik haren merkantziak. Prozedimendu honekin anitz tren tarifa merkeegi jarri izan da (esaterako siderurjiarako). Tren tarifetan ere, industriako konsumitzaile nagusiak (kimika, metalurjia) izanik tarifok ordaintzen eta elabora-

tzen dituztenak. Bide berean sarri gertatzen Estatuak finantzatzea gero enpresa pribatuek, esplotatzaile gisa, automatikoki probetxatuko dituzten petrolio bilaketak (esaterako, Saharan eginiko bilaketak).

Laburpenez, kapitalismoak lan guti emankorrak egiteko erabiltzen du sektore publikoa (baina diferentzia batzu leuntzeko moduko lanak nolanahi: esaterako, lurraldezko espansioan edo eraberritze arloan, Erdiko Mendidiko harrikatz minekin gertatu bezala). Lan guti emankorrok ordea, industria pribatuetako emankortasuna bapo gehitzen dute. Botere publikoak —enpresa pribatuen eskariz edo akorduz— izugarrizko ahaleginak eskatuko dizkie enpresa publikoei: Renaultek esportatu egin behar (dolarrak irabazteko), ez Citroenek, ez Simcak, ez Peugeotek leporatu nahi izan ez dituen arriskuetan sarturik. Societe Nationale Repal-ek eta C.R.E.P.S.-k ekin behar Saharan enpresa pribatuek nahi izan ez duten petrolioaren bila. Lan desatseginok sektore publikoari ezartzean, sektore pribatuak berak egin beharrik ez, eta bere aldetik inolako ahaleginik gabe horra egina naziorako funtsezko diren lan ekonomikoak. Esaterako, langileentzako bizitzetxegintza Estatuko organismoen esku utziko da, ez baitu nahikoa irabazirik ematen. Ikatzgintza (gaur balio guti ematen zaion enerjia) enpresa publikoek eginen dute, petroliogintza ordea (espansio osoan) sektore pribatuak beretzat gordeko du, etab.

Orain uler dezakezue zergatik ez duten gaur kapitalistek enpresa publikoen "desnazionaltze-

rik" nahi, nahiz eta enpresok apenas beren presuposturik ere ekilibratu, agirian zor egile ez direnean (sektore pribatuaren onerako). Egia da nazionaltze bakoitza —S.N.C.F. izan ezik— ugazabekin burruka gogorrean egin behar izan dela. Baina behin lortuz gero, beren onerako bihurtzea bilatu dute eta gehienean lortu ere bai. Ez dadukate bada, gertatuaz damutzeko arrazoirik. Kapitalismoarentzat irtenbiderik onena da ahalegin guztiak egitea botere publikoa are mesedegarriago dakion bidetik eramaten.

*Sektore publikoaren zabalera*

Zer garrantzia da gaur sektore publikoak Frantzian? Haundia noski, industriako zazpitik alokatu batek sektore publikoan lan egiten baitu, eta Frantziako ekonomia osoan inbersio laurdenetik gora (% 28) enpresa publikoek egiten baitute (8).

Enpresa hauetako izendegi ofizialak 360 inguru (hauei 300 filial erantsi behar) kontatzen ditu Estatuan kapitalaren % 30 gutienez dadukana (enpresako zuzenbidea kontrolatzeko nahikoa portzentaia). Kontu honetan ez da sartzen P. et T.-rik (ministerioak eta ez enpresak baitira), ez Irrati--Telebisiorik, ez zerbitzu publikorik, ez Estatuak kapitalaren % 30 gutienez dadukan ehundaka enpresarik.

Zeintzu dira enpresa hauk? Enerjia adarrean sektore publikukoak dira harrikatz minak, Electricite et Gaz de France, Regie Autonome de Petroles, Bureau de Recherches des Petroles, Com-

pagnie Francaise des Petroles, S.N. Repal, C.R.E. P.S. (azken enpresa biok Saharako petrolioa topatu zutenen artean datoz), Compagnie Rhone (ibai honetako kanale lan haundiak egin dituena Donzere - Mondragon-en, Montelimar-en), baita 1960-n sarturiko elkarte berria petrolio banaketarako eta Caltex-ko sarea hartu duena. Transporte adarrean sektore publikuko enpresak dira: S.N.C. F.-ko trenbideak, R.A.T.P., Air France, Messageries Maritimes, Compagnie Transatlantique, Trapil elkartea, Le Havre-Parisko pipe-line-a imini duena), Mont-Blanc azpiko tunelaren elkartea, aeronautika, SNECMA, Sud-Aviation (Caravelle egiten ari dena), Société de Construction Aeronautique du Centre. Guzti hauei beste hainbeste industria eta enpresa erantsi behar: Alsaziako potasa industria, nitrogeno industria (O.N.I.A.), tabakoak, Renult, etab. Gainera informazioko adar berezian Havas Agentzia (publizitatekoa), Sofirad elkartea, beronenak izanik Montekarloko Irratia, Andorrako Irratia eta orain Europa 1, Actualites Francaises, eta oraintsu arte S.N.E.P., gerratik gora nazien okupazioan kolaboraturiko egunkariei kendutako inprentak zuzentzen zituena.

Kredito adarrean 36-raino seguro-enpresa publiko daude, 16 banku edo kredito-etxe publiko (beren artean 4 bankurik inportanteenak: B.N.C.I., Comptoir d'Escompte, Credit Lyonnais, Societe Generale). Azkenez 23 bat etxe publiko eta ekonomia mistoko 40 elkarte ia.

Ikus dezakezuenez, Sektore Publikoa hala industrian nola komertzioan oso zabala da. Frantziak europar nazio guztietaik sektore publikorik

haundiena daduka, Ingalaterra sozialistak berak baino ere bai, laborismoak onenean ere ez baitzuen ezagutu Frantziako gaurkoa bezain sektore publiko zabalik (bere ekonomiaren erlazioan).

Industria eta komertzioko aparatu hain izugarria helburu pribatuetarako batez ere erabiltzeak sektore hau hain haundia ez balitz edukiko ez lukeiten efikazia damaie soluzio kapitalistei estrukturazko diferentzien arloan. Hala ere, esanik dugun bezala, efikazia hau guztia beharrekoa da. Dudarik ere ez soluzio sozialistak efikazago direla.

## V. SOZIALISTEN SOLUZIOAK ESTRUKTURAZKO DESBERDINTASUNEI

Sozialistak ez dira sekula errentetako, enpresen tamainiako eta lurraldeen desarroiloko desberdintasunen aldeko izan. Jokabide honek batzu gehiegikeriara eraman ditu, "tipien" defenditzaile itsu bihurturik, direnak direlakoak izan: merkatu tipiak, erremolatxa produktore tipiak, nekazari tipiak, etab., beren tipitasunaz beste irizpiderik gabe. Esaterako, Poujade jaunaren hauteskude kanpainaren hasieran komunisten partidua ezbaitan egon zuen merkatari "tipien" klienteriari eusteko. Esan dezagun bide batez ez dela partidu honen historian behingoa bakarrik anakronikotzat eta malthustartzat garbi salaturik dauden estruktura ekonomikoei eutsi nahi izatea.

Benetan sozialista izateko jokabide konserbatzaileegi hau alde batera utzirik, nola berezi soluzio sozialistak gora aipaturiko desberdintasunetarako? Gaiari osoan oratzerik ez dugunez gero, funtsari lotu beharko.

*Lehenengo nazioko desarroilo plana zehaztu*

Lehenengo puntua —behar beharrezkoa— desberdintasunak zer apartekotzat ez hartzea da, ekonomiako desarroilo eta zuzenbidearen barrutian arazo bat gehiagotzat sartzea baizik eta hau plan urtetsu, arrazoizko eta progresibo bateko kontua da. Behar dena desarroiloko plan jenerala zehaztea, talde finantzarien interes pribatuak albora utzirik.

Plan hau demokraziaz landu behar da, Estatuko ordezkariek parte harturik, konsumitzaileekin eta produktore alokatu eta nekazariekin batera. Plana da nazioko desarroilo premia desberdinak bateratzen saiatu behar duena, hiritarrik gehienen premia biziak aurrenen asetzea bilatuz. Irizpide honexen arauera izendatuko ditu naziorako produkziorik desiragarrienak, zeintzu premia komeni den aurrenen asetzea, nola ondoen banatu laneskua (industriaka eta lurraldeka) helburu hauk lortzeko, nola banatu nazioko errenta (haundi haundika behintzat), zer eraberritze (industriazko nahiz profesiozko) egin, zer finantza bide lortu plana burutzeko, etab.

Planaren hari jeneralak asmatutakoan bakarrik pentsatu ahal izanen da aparteko neurririk sar-

tzea alde batetik klase sozialen arteko errenta diferentziak gutitzeko (eta alokatu talde bakoitzaren barrenean gehiegitzat dauden alokairu diferentziak) eta bestetik lurraldeen arteko desberdintasunak laburtzeko (nazioko aberastasunak hobeto esplotatzeko eta nazioko bizkundea lurralde batzutako jendeak bakarrik probetxa dezan ebitatzeko). Ikuskera hau zeharo diferentea da kapitalisten munduan dabilenetik, non enpresa eta iniziatiba askatasuna delakoa atxakia bat —eta bide bat— besterik ez baita errenta arteko eta lurralde arteko desberdintasun izugarriei eusteko (okerragotzeko ez denean) (9).

*Sozializazioa eta neurri bereziak*

Bego argi interes pribatuek desarroilo plan honen betetzeari kontra egin ez diezoten —planak demokraziaz prestatua izan behar du, Estatua, konsumitzaileak eta langileak batuz eta Parlamentuak herri konsulta baten ondoren botatua; esaterako, hauteskunde jeneralak direla-eta oso garrantzizko dela:

— ekonomiako oinarri sektoreak, zeinen mende baitago nazioko desarroiloa (kreditoa, siderurjia, bilduma kimikoak edo petroliozkoak, transporte bideak, itxas edo aire konpainiak, karreterako transporteak, etab.) sozialduak izatea.

— nazioko ekonomiko beste "hazte polo" nagusiak ere (enpresa pilotoak, bizkundezko lurraldetan, banaketa zirkuito-ereduak) berdin sozialduak izatea.

— azkenez planaren betetzearen kontra (egitez edo paso emanez) dauden interes pribatuak integratzea (soializazio bidez batez ere). Esaterako, sozialiazio-zigorraren aldeko gara (Renault gerra ostean ezarritako antzekoak).

Baina bego argi sozializazio hauek ez dadukatela langileentzat bat ere interesik —gerra osteko esperientziak ondo erakutsi du— enpresen zuzenbidea —planaren norabideen arloan— lanaren ordezkariei eman ezik eta ez botere publikoak izendaturiko teknodelegatuei, "oinarriaren" kontsultarik ez parte hartzerik gabe.

Eskema jeneral honetan —plan eta sozializazio— hiru neurri sail berezi sartuko dira, gorago aipaturiko estruktura desberdintasunek sorturiko problemak konpontzera destinatuak:

1. Errenten desberdintasunei buruz, berdintze progresiboko ikusmira sozialistak eskatzen du bete betean erabiltzeko:

— errenten dirijismoa (alokairuak, marjenak, prestamen sozialak eta familiarrak, jubilazioak, ikasketak, etab.) berdinkortasunez, ez berdinkeriaz (berdintasunik ez da sekula ahal izan; hala ere bertarantz jo beharra dago).

— errenta zerga progresiboak eta errentaren beste bir-banakera batzu, hasierako banaketak tente utzitako diferentziak gutitzen saiatuz.

— errenta haundirik (a fortiori kapital pilaturik) belaunetik belaunera pasatzea debekatu.

Hiru neurri sail bereziok errenten piramidea laburtu eginen dute segur asko.

2. Lurraldeen desberdintasunei buruz, aparteko ahaleginak egin beharra dago lurralde beheratuen alde. Enpresak —holako edo halako zirikadaz— alde hauetan jartzera gonbidatu beharrean, botere politikoek, planaren norabideen arauera, lurralde hauetara azpi-estrukturako inbersio masiboak destinatu behar dituzte (karreterak, kanaleak, trenbideak, preferentziazko tarifak, etab.) eta hau nahikoa izan ezik, enpresa publiko berriak imini, hauetarako lanesku espezializatua garaiz trebatuta edukirik lekuko lanesku erabilgarritik hasita. Lanesku honentzat bizitzetxe premiarik sol baledi, atxegintzako programa bereziak antolatu behar.

3. Enpresen tamainiari buruz, derrigorra da aurrerapenera egokitzeko aparteko ahaleginak egitea. Behar dena ez da enpresa publiko berriak sozialdu aurretik zedukaten tamainia berean segi araztea, ez eta pribatuak izaten dirauten enpresak ere tamainia berean segi araztea.

Ahalegin bikoitza egin beharra dago —bilaketazkoa lehenengo eta integraziozkoa gero— enpresak tamainiarik onenera hurbiltzeko, enpresari produktibitaterik haundiena damaion tamainiara noski. Behar bada on izanen da enpresa zabalegiak eta guti emankorrak (burokraziaren tamainiagatik) zatitzea. Baina sarritan beharrezko izanen da tamainia tipiegiko enpresak batzea asko emankortuko badira. Hau harrikatz minetan edo Electricite de France-n eginik dago ia gerra ostean.

Onen teknikoari buruzko bir-antoleketa hau erraz egitekoa izanen da, enpresei dagozkien dato

guztiak jakin ahal izanen baitira eta beraz botere publikoen erabakia onenari atxikiko baitzaio.

Pribatuak izaten jarraikiko diren enpresei buruz (industrian, nekazaritzan nahiz komertzioan) Estatuak produktoreei elkartzen lagundu beharko die, onen tekniko honetara hurbiltzekotan. Abentura gogoz edo bakarkeria gehiegiz, produktore tipiek elkartzeari muzin balegiote, Estatuak kasu honetan laguntza moztu egin behar likee, nazioko ona haien on partikularraren eta haien pribilejioen euspenaren mende jarri gabe.

*Onenera jo, ez statu quo-ra*

Zuek ikus dezakezue ez dadukadala inolako "a priori"rik "tipien" alde "tipi" bezala. Benetako demokrazian-eta sozialismoa da bere erarik biribilena-gehienen ona da nagusi eta ez pribilejiatu batzurena.

Errenta kontuan eta lurraldeen espansioan, jakina, denen ona nazioko errenta hobeto banatzea da hiritarren eta hauk bizi diren lurraldeen artean. Hortik bereziki arduratzea zoriak, egoerak, konforta... berdintzen, dena dela jendea bizi den lekua, leku honek nazioko bizkunde ekonomikoaz ondo bat egiten badu. Ez dago ordea inolako arrazoirik mendez mendetako klase burrukak eta jabego pribatuak eraikitako industria, nekazaritza edo omertzio estrukturei eusteko.

Sozialistontzat kontradikzio gorria litzateke alde batetik geroko mundu anaikorrago eta efikazagoaren egiletzat eduki geure buruak eta beste-

tik oraingo honetan egoera historikoaren aldeko izan, ekonomia eta giza eboluzio luze baten frutu huts besterik ez den egoera, iraganiko belaunaldien gainean eduki dituen garaitiak eta guzti ere, hiltzea zor duena.

Hautaera onurakor bakarra honetantxe datza, eboluzio hau bultzatu ala onartu soilki. Barkamenik ez duena eboluzio honen aurrean ez-jakin egitea edo atzeraturik geratzea.

# BOSTGARREN KAPITULUA

## NAZIOA ERABAKI EKONOMIKOEN AURREAN

Kapitutlu honetan, zerrendako bostgarrenean, hauzi nahasiago samarrei ekinen diegu. Aparteko arreta behar dute beraz. Izatez orain arte esaniko guztia begien bistakoa zen, zentzu hutsetik harakoa. Orain arlo konzeptualagoan sartzen gara: ekonomia nazionalaren funtzionamendua. Esanen dugunak edozein herri aurreratutako ekonomia nazionalerako balio du. FFrantziako kasuari bereziki bagagozkio, adibide bereziki arretagarria delakoan gaudelako da. Gai zabalagoak argitzeko nazio honi dagozkion zifrak konparatuko ditugu eta Frantziako arazo ekonomikorik haundienak gogoraziko. Hala ere azalpen hau —oso aldakuntza gutiz— erraz aplikatzekoa da edozein nazio desarroilatutara.

Zein toki dagokio gai honi Ekonomiako lehen pausoetako sailean? Gauza argi dago: mekanismo

ekonomikoak ez direla batzuk uste bezain konplikatuak eta beraz arreta apur batez edonork ulertzeko modukoak zirela jarritakoan, jokoko piezatariko batzu aztertu ditugu. Lehenengo, familiako presupostuak zirela-eta, konsumitzaileen kasua ikusi dugu, batetik sarrera zuzenak eta ez-zuzenak hartzen dituztela (produktore eta hiritar alderdi bikoitzez) eta bestetik konsumoan, zergetan eta aurreztean gastatzen dituztela sarrerok. Gero enpresek, ekonomiako oinarri zelulek, nola funtzionatzen duten ikusi dugu eta zelula hoien funtzionamendua zela-eta, gure nazioko estruktura hain nabarbenki desberdinak aztertu ditugu. Honek garbi ikus arazi dauku Frantziako berdintsutasunik eza ekonomia kontuan; Frantzia nekazari asko dago, Frantzia industrial asko dago, frantziar produktore mota asko.

Frantzia honela "atomizatu" ondoren, orain —alderantzizko bidetik— entitate bezala hartzen dugu. Modu honetara eta ez alderantziz jokatu badugu, "nazio" entitateari buruz inolako oker-aditurik ez sortzearrean izan da. Zergatik hartu nazioak entitatetzat, hain berdintasun gutikoak direla jakinik?

*Nazioa entitate bezala*

Konzeptu hau oso praktikoa delako hartzen dugu. Gainera produkzio, konsumo eta errentetako problema batzu —edo konkretkiago, konsumoaren eta errenten banaketako problema batzu— familietako eta enpresetako presupostuak zirela-eta aipatu ditugunak, berriro agertuko zaizkigu nazio

mailan. Eta problema hauk aztertzeko xit eroso da esan ahal izatea: errenta frantsesa (errenta berdintsua balitz bezala), konsumo frantsesa, produkzio frantsesa, biztanleria frantsesa, etab., bakoitzean hasieratik esanda dadukaguna bir-esaten ekin gabe, hau da, nazioko batazbesteek desberdintasun galantik ezkutatzen dutela.

Ikasaldi honetan beraz, galdatzen duguna da nola portatzen den kolektiboki nazioko entitatea, Frantzia: Zer produzitzen du, zer konsumitzen, zer konsumoaz beste destino damaio bere produkzioari? Zer eboluzio egin du bere produkzioak eta bere konsumoak? Eta azkenez noiz eta nola frantziar kolektibitateak, entitate bezala, erabaki du hau edo hori produzitzea, hau edo hori konsumitzea, honen edo horren modutan banatzea bere produkzioa konsumo-inbersioen artean? Ikusten denez, nazioko erabaki ekonomikoen —nola, zergatik— hauzia da lan hau argitaltzera garamatzana. Ekonomiako hatsapenetako zerrenda honetako azken koadernoan ebatziko dugu sakonkiago hauzi hau.

Ikasaldi hau lau zatitan banatuko dugu: zer da produkzio nazionala; zertan erabiltzen da; nola eboluzionatu da nazioko produktoaren banaketa gizarte-taldeen artean; eta azkenez, ikasaldiaren izenburua: nola agiri dira nazioko erabaki ekonomikoak.

# I. ZER DA PRODUKZIO NAZIONALA?

Ez dago hemen Frantziako hainbat produkzioren dekripzio zehatzik egiterik. Liburu batzu ere guti lirateke. Produkzio honen kopuru eta eboluzioaz nozio funtsezko batzu errazki emateaz konformatu beharko. Hauziari hainbat alderditatik hel dakikeo. Guk denetatik helduko diogu, produkzio honen jatorria ezagutzen ahaleginduz batez ere.

## A. *Frantziako produkzio nazionalaren jatorri eta kopurua*

*Frantziako biztanleria aktiboa*

Has gaitezen izaki biziei dagokiena aztertzen, biztanleria aktiboa estudiatuz, Frantzia produktore gisa zer den antz bat hartzeko.

Frantziako biztanleria aktiboa, 1962-ko zentsoak agertzen daukunez, 19 miloi pertsona baino gutitxoagoz osaturik dago, hau da biztanleria osotik % 40 inguru, Frantziak, zentso honen garaian 46,5 miloi biztanle baitzuen (10).

19 miloi pertsona aktibo hauetatik % 35 inguru emakumeak ziren (6,5 miloi); hiru pertsona aktibotatik beraz guti gora behera bi gizon eta emakume bat dago. Ez ahaztu ordea proportzio honen alderdi enganakorrik, bai baitago adar ekonomikorik emakumeak inportantzia erlatibo askoz haundiagorik duenik. Oihalgintzan eta josketan % 65 emakume dago eta % 4 baino ez konstrukzioan.

Estadistikek "zerbitzuak" deitzen duten multzo hedatsuegian, Bankuak, Seguroak, ikuskizunak, hospitaleak, etxe-zerbitzua, profesio liberalak eta edonolako administrazio zerbitzuak (harmada izan ezik), publikoak nahiz pribatuak hartzen dituen multzoan, emakumeen proportzioa xit ugaria da: % 64. Beraz, % 35 dioen nazioko batazbestea estadistikazko batazbeste bat besterik ez da, egitez oso proportzio aldakorrik ezkutatzen duena.

*Frantziako lauetatik hiru aktibo alokatuak dira*

Zer egiten zuten 1962-n gure 19 miloi frantses aktibo hauek? Ia hiru laurden (%71,7) alokatuak ziren (% 71,1 gure kalkulutatik militarrak kentzekotan). Gertaera honek ba du inportantziarik Frantziako biztanleria aktiboaren "alokatutasuna" asko gehitu baita azken urteotan. Bi zentsoen artean (1954-koa eta 1962-koa) Frantziako alokatuen numeroa 1.360.000-tan gehitu da (% 11,2), biztanleria aktiboaren osoak berdin zirauela. Ugazaba tipien edo langile independenteen gisako enpleguak (nekazariak, merkatariak, artisanoak) galduz etorri dira (428.000 zortzi urtetan, hau da, % 10). Halaber "etxe-enplegutan" lan egiten zutenen numeroa ere (merkatarien, nekazarien, artisanoen emazte nahiz hain zuzen (alokatuen gehitzea eta ez-alokatuen gutitzea), Frantziako biztanleria aktiboa geldi egon da azken zortzi urteotan zehar. Zortzi urtetan ordea alokatuen proportzioa, osoari buruz, % 64,9-tik % 71,7-ra pasa da. (% 67,9-tik % 73,3-ra gizonetan eta % 59,3-tik % 68,5-ra emakumetan).

Nekazaritzan —sektore honetan egundoko efektibo beherakada gertatu da: lau langiletatik bat gutiago zortzi urtetan— alokatuak, lehen ere guti izanik, gero eta mehatzago dira, emakumeetan batez ere (— % 28,2 gizon, osoari buruz eta — % 41,5 emakume). Hala eta guzti ere, 1962-n 3.850.000 pertsonak lan egiten du lurrean (bostetik batek), hauetatik 842.000 bakarrik zirela alokatuak (hamabostetik bat).

Erregaien adarrean (ikatz, petrolio, garburante) kasik langile guztiak dabiltza alokairuz: ia 250.000 pertsona dira. Konstrukzioak eta lan publikoek 1.657.000 dadukate, hauetatik ia 1.400.000 alokatuak direla. Agiri denez, adarrik inportanteena transformazio-industrietakoa da, 5,4 miloi pertsona aktibo baititu; hau da, industria ateratzaile eta konstrukzioko guztiak jorik, industrian 7,3 miloi pertsona baino gehitxoago dago (19-tik) 3,7 miloiotatik 6,5 baino gehiago alkoatuak dira: 9-tik 8. Nekazaritzako proportzioa 9-tik baino ez da.

*2,3 miloi metalgin*

Hona zifra batzu sektore haundi honen inportantzia erlatiboaz hobeto jabetzeko. Metalurjiak eta indar elektrikuko industriek 2,3 miloi pertsonatik gora enplegatzen dute (hauetatik 2,2 miloi alokatuak direla); kimikak eta konstrukzio-gaiek 560.000; oihalgintzak 900.000-tik gora eta zur eta paper sektoreak 360.000 pertsona.

Transporteek ia 800.000 pertsona enplegatzen dute, kasik den denak alokatuak. Karreterazko transporteek bakarrik daduate gero eta pertsonal

aloatu gehiago; era batera konzentrazio fenomenoak eta automobilezko komunikabideen gorakada haundiak eraginiko sektorea da hau.

Komertzioak bere aldetik —gorakada izugarria ikusi duen beste sektore bat— 2,6 miloi pertsona enplegatzen du, hau da, 1954-n baino % 8,5 gehiago. Arrazoia Frantzian garai honetan komertzio-gaiek 1/3-ko gehipena eduki dutela; era batera beraz, komertzio sektorearen ugaltzea eta nazionaltzea egon da. 100.000 bakar merkatari (emazteak ere sarturik) galtzeak eta era batera komertzio sektorea 320.000 alokatutan gehitzeak ere gauza bera nabari arazten du. 1962-n komertzio sektoreak 1.5200.000 alokatu eta 1.066.000 ez-alokatu zituen, zortzi urte lehenago berriz 1.203.000 eta 2.389.000.

Azkenez "zerbitzuak" berariaz deritzaten sektorera heltzen gara (banka, seguroak, ikuskizunak, administrazio, hospitaleetako pertsonal, profesio liberalak...), 3.950.000 pertsona aktibo hartzen dituena, hauetarik 3.500.000 alokatuak direla eta 450.000 ez-alokatuak.

*Laburpenez:* Frantziako biztanleria aktiboa zer den idea garbirik edukitzeko, bostgarren partea nekazari dela esan dezakegu, % 40 baino zertxobait gehiagok industrian lan egiten duela (enerjiako sektorea barru), % 16 frantses komertzioan eta transporteetan ari dela, eta azkenez botsgarren partea baino gehitxoago (% 21) zerbitzuetan enplegaturik dagoela: Bankuak eta administrazioa, hauei % 2 militar erantsi behar zaielarik.

Portzentaia global hauek Frantzia nazio industrial aurreratu bat dela erakusten dute, industrian

eta "hirugarren" aktibitateetan enplegaturik duen biztanleria zatiak % 80 harrapatzen baitu.

Frantziako produkzio batzuri munduko produkzioan zer parte dagokien ikusteak diagnostikoa agudo baitets araziko dauku, aurreko zifrak konbentzitzekoak izan ez balira.

*Frantzia: % 5-tik % 7-ra munduko produkziotik*

Frantziako biztanleria munduko osoaren % 1,5 baino ez izanik —zeinek ia lerdokeriatzat uzten baitu "Frantzia Haundia", "Frantzia Betikoa" eta antzekoei buruzko diskurso aberkoiak—, Frantziako produkzio zatia mundukoari buruz —nekazaritza barru— argiro haundiago da portzentaia hau baino. Frantziak urteen gorabeheran, % 4-tik 5-ra produzitzen du munduko gari garagar eta olio produkziotik; % 6 patata eta % 9 erremolatxa azukre. Portzentaia honek ordea ez du segur asko iraunen, Frantzian erreforma bat ari baita lur produkzio osotik erremolatxari dagokiona gutittzeko. Aipa dezagun gainera nekazari kontuan gure ekipoaren garrantzia erlatiboa: Frantziak mundu guztian lanean ari diren traktoreetatik % 5 daduka.

Dato hauk, jakina, globalak eta oso guti gora beherakoak dira; baina baiets dezakegu gure nekazaritzak munduko lur produkzioko % 4-tik 5-rako batazbestea produzitzen duela. Ezepzio bakarra dago, xit ezaguna, gure pisu erlatiboa gehitzen duena: mahatsa eta ardoa. Izan ere munduko ardo laurden produzitzen dugu. Ez gure lurrak be-

reziki direlako ardo lurrak; aspaldi eginiko esperientzia mordo batek agertu zuen munduan anitz eta anitz nazio dagoela kalitate bikaineko ardoa, gurearen parekoa, produzitzekorik. Ohitura historiko bat dugu hau: konsumo haundiak produkzio haundia ekarri du. Garagardo gehiago produzitzera, munduko lupulo produkzioaren indize haundiagorik genuke —Alemaniak nahiz Beljikak bezala—.

Pasa gaitezen industriara: munduko % 3 ikatz eta elektrika produzitzen dugu, % 5 altzeiru, zementu eta aluminio, nazio modernoen hazkuntzarako hiru gai oinarrizko; % 8 automobil eta % 5-tik 10-ra munduko oihalgintza guztitik (% 5 alkotoi eta % 10 artile). Sail honetan ezepzio bat jo behar: Frantziako petroliorik ez ia osoa; munduko produkziotik % 1 baino gutiago. Hau ere tradizio historiko bat dugu, zeren oraintsuko mina ikerkuntzek (Lacq, Saint-Marcet, Parisalde) erakutsi baitute gerra ostean ba zela Frantzian petrolio konpainiek esplotatu gabeko hidrogarburo erreserbarik, baina erosoago zitzaien Venezuelar, Iraktar edo, orain, Saharar petrolioa sartzea Frantzian.

Azken test-sektorea: komertzioa. Frantziak munduko komertziotik % 6 baino gehitxoago egiten du (portzentaia hau gainera gehitu egin da nazio arteko trukaketa bultzatu duen Merkatu Batua sartuz geroztik).

Oro har, zifra guztiok uste baino askoz gutiago saiheskor dira: munduko lur produkziotik % 4-tik 7-ra gabiltza, industrian % 5-tik 8-ra eta komertzioan % 6 kontrolatzen dugu.

Ikus dezakezuenez, guti gora beheratasun oso global honek biztanleria aktiboaren banaketatik ateratako lehenengo konklusioa baitetsi egiten du: Frantziak, nazio desarroilatuak, munduan hiru edo lau bider pisu ekonomiko gehiago daduke bere biztanleria munduko biztanleriari buruz dena baino.

## *P.N.B.-k toneladak, metroak eta kilowatioak batzen ditu*

Frantziako produkzioaren kalkulua —frankotan oraingoan— hirugarren hurbiltze berdin arretagarri bat da gure gaira. Nola frankotan kalkulatu Frantziako produkzioa? Gure nazioan urtean egiten edo prestatzen diren gai eta zerbitzu guztiak baturik.

Hauxe da kontaduria nazionalaren helbururik aurrena. Arlo honetan, jakina, kontaduria bakoitzak ebitatzen dago gakoa. Demagun, esaterako, neumatikogintzarako, garburadore eta motorgintzarako, automobil fabrikentzat lan egiten duten ehun artifizial enpresetako salmenta-prezioak eta azkenez automobilen salmenta-prezioak batzen ditugula. Azken partida honetan neumatiko fabriketako salmenta mordo haundi bat sarturik genuke; baita kotxearen tapizaduran erabilitako ehun artifizialak ere; azkenez, garburadoreak eta motorrak ere kotxearen prezio osoan sarturik daude. Kontu bikoitz hauk ebitatzeko, industria bakoitzak produkzio prozesoan erantsitako balioa bakarrik sumatu behar da (hau da, hitz batez, salmenta-prezio osoaren eta bere zatietariko ba-

koitzaren gostuen arteko diferentzia). Honela adar ekonomiko bakoitzean erantsitako balioak sumaturik, Frantziako produkzioaren (ondasun-zerbitzuen) balio osoa ateratzen dugu.

Honela jokatuz, kontari nazionalek (Finantza Ministerioko zerbitzu berezia) kalkulatu dute produkto nazional brutoak, 1962-n, 353.600 miloi franko berritako zifra harrapatu zuela. Kopuru hau honela banatzen da: 318.000 miloi industrien eta zerbitzuen konjuntoko barne-produkzioari dagokiona eta 29.300 miloi etxe-zerbitzuak era jeneralez deritzatenei dagokiena. Aurreko urteetako produkto nazional brutoa (P.N.B. ikasientzat) 267.400 miloi izan zen 1959-n, 296.300 urrengo urtean eta 319.700 miloi 1965-n (kontuan eduki franko "korrienteak" direla, hau da, urte bakoitzean balio intrinseko gutiago dadukatela prezioen igoeragatik).

Batzutan —nahiz eta gutiagotan— beste nozio bat erabiltzen da produkzio nazionala neurtzeko: produkto nazional netoa (P.N.N.). Oso erraz ateratzen da kontari nazionalek nazioko ekipo ondasunen amortizazioari urtean dagokiola jotzen duten kopurua kendurik P.N.B.-ri: P.N.B.-ren hamarrena baino gutitxoago. Amortizazio gisa kontariek 23.000 miloi kendu zuten 1959-n, 25.800 urrengo urtean, 28.100 1961-n eta 31.000 1962-n. P.N.N. beraz honela geratu zen (franko "korrientetan" beti): 243.600 miloi 1959-n, 270.700 urrengo urtean, 291.600 1961-n eta 322.600 1962-n.

## B. *Produkzio nazionalaren eboluzioa*

### *Lehen baino gehiago, baina nola?*

Aurrekoa bezain arretagarri da —gehiago ez bada— produkzio nazionalaren eboluzioa ere ezagutzea. Zeren erdiko gizona, milaka miloikaren artean hain erraz galtzen dena, —nola ez haren berri ulertu!— konparazioekin hobeto gidatzen baita, espiritituari hurbilago zaion bat edo bi belaun-aldiren eskalan. Egin ditzagun konparazio hauk, bestalde historilariari gehiago dagozkionak ekonomistari baino.

### *Industriako produkzioa*

Frantziako industria produkzioa mendearen hasieratik hiru bidertu baino gehiago egin da. Oraingo maila 1929-koaz, gerra bien arteko urterik onenaz, konparatuz gero —okerbide Litzateke 1938--koaz konparatzea, zeren urte hau Frantziako ekonomiarako oso gaiztoa izanik, Alemaniarako ordea, bir-harmatuz geroko gerrak atontzenari zelarik, oso urte ona izan baitzen—, Frantziako produkzio nazionala % 80 baino gehiago gehitu dela ikusten da. 1952-koaz, gerrako kalteen konponaldi luzearen azkena markatu zuenaz konparatuz gero, produkzio industrialaren gorakada % 80 baino gehitxoago da.

Ez gaitezke ordea gehiegi fida hain aldi luzerako portzentaia hauetaz. Epe laburrerа ere lanak daude industriako eboluzioa segitzen. Lehenengo eta behin negozioen ezkutuagatik: industriek ez

dute ia noiz ere produzitzen duten guztirik agertzen; baina batez ere arras zaila delako kilowatioak toneladekin edo metro kubikoekin batzea. Hona ordea nazio eta lurralde bateko produkzio industrialaren indize osokoirik edukitzekotan, metro kubiko gazak, tonelada gai fabrikatuak, kilowatioak... batu beharra dagoela. Hirugarren eragozpena: portzentaiak oinarri-dato bati erreferentziazko ere deritzanari; buruz egiten dira, baina estruktura ekonomikoak belaunaldi batean zehar asko aldatzen direnez gero, hogei urte lehenagoko erreferentzia datoan oinarrituriko kalkuluak gaur apenas daduka esanahirik. Dakusagun hau Frantziako produkzio industrial handietako adibide berezi batzu emanez.

Mendearen lehenengotara joez gero, ikatzgintza guti guti gehitu dela nabari da: % 70 bakarrik. Urte batzu geroago indize hau are tipiago izanen da Gobernuak ikatz produkzioan gutitze plan progresibo bat daramalako. Enerjia adarrari gagozkiola, petroliogintza, 1900-n hutsa, gaur neurri astronomikoetaraino heltzen ari da, nahiz eta izatez oraindik tipia izan. Automobilgintza, 1900-n ez abia bai abia zebilena, gaur mendearen lehenengotan baino 800 bider haundiago da. Hona beste gai batzuren koefizienteak: altzeirua, 1900-n baino 10 bider gehiago, elektrika, 200 bider gehiago. Hainbeste gorabehera estaltzen duen produkzio frantseseko eboluzioaren bataz besteko indizerik emateak ez du ia ezer argitzen. 1929-ri, gerra aurreko urterik onenari berari buruz ere, ba dago desberdintasun haundirik: ikatzgintza ez dela gehitu esan daiteke; automobilgintza bost bidertu

egin dela; elektrikako indizea haunditxoago dela; altzeirugintzak % 75-ko gorakada egin duela. Hemen ere, 35 urtetako eperako, ez daduka sentidurik bataz besteko indizerik emateak.

### *Lur produkzioa*

Nekazaritzan konparazioak errazago dira hazte-indizeak ahulago direla hain zuzen. Gari produkzioa 1900-koa baino apurren bat gehitxoago da. Gure aragi produkzioa erdi gehitu da 1929-ri buruz... Patatan 1900-n baino laurden bat gehiago produzitzen dugu, baina 1929-n haina bakarrik. Ardoarekin ere berbera gertatzen da. Esne produkzioa da nabarbenki gehitu den bakarra: 1929--ko dobletik gora.

### *Produkto nazional brutoaren eboluzioa: gerra aurrek dobletik gora*

Produkto nazional brutoaren eboluzioa adierazkorragotzat har daiteke balio honek produktibitate nazionalaren orotasuna biltzen baitu. Kontaduria nazionala zori-xarrez zientzia erlatiboki berri samarra dugu eta dadukagun ebaluazio zehatzik zaharrena 1938-koa da (nahiz eta eztabaida askotarako bide eman). 1938-ko produkto nazional brutoa 400.000 miloi garaiko frankotan ebalua zitekeen. 1962-n P.N.B. 35.360.000 miloi franko zaharretaraino heldu da, hau da 88 bider gehiago. Gaien prezioak ordea 38-z bakarrik bidertu dira aldi honetan. P.N.B.-ren aurrerapenak lorturiko koefizientea (franko zaharretan) prezioen alda-

kuntza koefizienteaz zatituz gero, produkto nazionalaren tamainiako aurrerapena ateratzen da (hau da, prezioek beti konstante iraun dutela emanik). Aurrerapen hau % 132 da 1938-tik 1962-ra (gogora berriro 1938 urte xarra izan zela). Kontuan eduki behar dugu aurrerapen hau ez dela konstantea izan. Ez bakarrik gerrak Frantziako ekonomia 15 urtetan atzeratu duelako, baizik eta ekonomia kapitalistek —eta ez berek bakarrik— ez dutelako oraindik hazkuntza erregularraren gakorik aurkitu. Oraintsurengo aldiari begirada bat botatzea besterik ez dago horretaz konbentzitzeko.

1950-tik 1963-ra Frantziako P.N.B. % 87 gehitu da (tamainiaz). Hau da, urtean % 4,6 bataz beste. Baina batazbeste hau batzutan gaindua izan da eta beste batzutan harrapatu ez. Aipa ditzagun urte onak: 1950 (% 7,6-tik gora), 1951 (% 6-tik gora), 1957 (% 5,9-tik gora), 1960 (% 6,4-tik gora) eta 1962 (% 5,8-tik gora). Urte gaiztoek ere beren izena dadukate: Pinay-ren Gobernua 1952-n; % 2,6-tik gora baino ez; 1953 (Laniel): % 2,6; 1958 (De Gaullek hartzen du boterea, Pinay Finantza-ministro dela): % 8-tik gora; 1959 (lehengoak berak): % 2,4. Laugarren planerako (1962--65) urtean % 5,5-ko hazkuntza preikusirik zegoen, baina 1964-n, "estabilizazio-Plana" zela-eta jakin zen Pompidou-ren Gobernuak ez betetzea erabaki zuela inflazioa sor arazteko bidurrez; azken bi urteok ere ez dira onegiak izan: % 4,4 1963-n eta % 4,8 inguru 1964-n.

Diogun batez azken hamabi urteotako hazte ritmoa bezalakorik (urtean % 4-tik 5-ra) ez zuela Frantziako ekonomiak gerra bien artean inoiz

ikusi eta ez dagoela ezer lehenengo munduko gerra aurretik ikusi zuela frogatzekorik. Ohar honek galdera arretagarririk ba dakar nola Mendebaleko ekonomia modernoek konpontzen dituzten hazte arazoak. Ez da hau kontu hoik argitzeko tokia. Kontura gaitezen ordea "guztizko xirokuntza" delako teoria komunista gertaerek hankaz gora bota dutela eta ekonomia kapitalistetan gero eta krisis astunagoen alabeharra delako beste teoria famatua ere kili-kolo jartzen duela gaurko errealitateak. Dudarik ere ez honetan teoria desfasaturik dagoela praktikari buruz: kapitalismoak bere gaztetxozaroko problemarik zorotzenak zehartzeko moduko teknikak erabiltzen ikasi du bere ekonomiaren zuzenbide eta norabidean; gaur, geroago ikusiko dugunez, ez dakideo alderdi horretatik ataka.

D. *Nola esplikatzen da eboluzio hau?*

*Hazkuntzako faktoreak*

Produkzio nazionala utzi aurretik, bila dezagun hirugarren puntuan zer faktorek eragin dion eboluzio honi eta segi arazi guk azterturiko bidetik.

Nazio bateko produkzioko eboluzio faktoreak esaten, nekazaritza dator berehalaxe burura: busti-lehorrek batzutan alderantzizko ondorioak eta bestetzutan berdinak dituzte (bata edo bestea normalak ala gehiegizkoak izan); izozteak eta eguraldi onak alderantzizko ondorioak dituzte ia gai guztietarako; harrite-uholdeen pentzudan dago uzta bat... ez dago gehiago ekin beharrik lur pro-

dukzioa batez ere klimazko kondizioen mende dagoela ulertzeko. Baina lurrekoak ez diren produkzioak? Zer aldarazten ditu? Eskema gisa hiru faktore nagusi eman ditzakegu.

— *Biztanleria aktiboaren aldakuntza*

Biztanleria aktiboaren eboluzioa Frantzian ezer guti izan da azken berrogei eta hamar urteotan. Frantziar herriko malthuskeria hau —Malthusen izenetik, autore ospetsua biztanleriari buruzko teorien historian— gure aurretiko belaun-aldien joerarik tamalgarrienetarikoa izan da. Jaiotze urritasunak, mendearen lehenengotatik bigarren munduko gerrarte, apenas dio biztanleria frantsesari konstante irauten utzi (11) bitartean gero eta emakume mordo haundiagoak enplegu bat hartzen zuela, bizi-luzetasuna gehitzean batez ere. Midikuntzan aurrerakuntza haundirik ez egitera, probable da Frantziako biztanleria aktiboa netoki gutituko zatekeela.

Mendearen hasieran, 1900-n, 20 miloi pertsona baino gehitxoagoz osaturik zegoen. Ihazko zentsoan ez zen 19 miloi biztanletatik gora. 1913-n harrapatu zuen goia, 21,4 miloi pertsonaz, eta behera 1938-n, gerra bien artean, 20,2 miloiz (hauetarik 900.000 gainera huelgan zeudela). Efektiboki enplegaturik biztanleria aktiboa —hitzaren esanahi hertsian produzitu egiten duen bakarra— mende erdian 20-tik 18,9 miloitara jautsi da. Biztanleria honen enpleguak bere numeroak haina kontatzen du, herri bateko produkzio nazionala ez baitatza pertsona aktibozko efektiboen tamai-

nian bakarrik, baizik eta pertsona hauen enplegakeran ere. Mundu guztiak daki industrian enplegaturiko pertsonek gehienean nekazaritzan enplegatuek baino produktibitate gehiago dadukatela. Era berean oso inportanteak dira nekazaritzako, industriako nahiz komertzio-zerbitzuetako taldeen artean egiten ari diren aldakuntzak.

Mendearen lehenengotatik azken zentsorarte (1962) biztanleria aktibo nekazaria erditik gora gutitu da (% 56), 8,8 miloitatik 3,4 miloitaraino jautsirik. Era batera industriako biztanleria hazi egin da, normalean uste baino gutiago bada ere (laurden bakarrik); ez nekazariak —mekanizazioak eta miseriak beren lurretatik egotziak— ez direlako industriazko enpresetara lanean joan, baizik industriako biztanleria aktiboa lanesku jarioak jo duelako "hirugarren" sektorearen onez: komertzio, transporte eta zerbitzu. Honela "hirugarren" sektorea da aldakuntza demografikuekin gehien irabazi duena. Mende erdian bere efektiboak 5,3--tik 7,7 miloi pertsonatara pasa dira, % 45 hazirik; gaur industria osoaren ere goitik dago (7,4 miloi industrian).

Frantziako adibideak beraz Collin Clark autore anglosajoiaren teoria baitesten du, zeinen arauera munduko laterri guztietan lerraera haundia omen baitago "lehenengotik" (nekazaritza eta minak) "bigarrenerantz" (transformazio industriak) eta "bigarrenetik" "hirugarrenerantz".

Eboluzio industrial hau Frantzian argi dago bi portzentaia ikusirik. Nekazari taldea duela kasik mende bat Frantziako biztanleria aktiboko maioria osoa zen: % 53. Gaur bostgarren partea ba-

karrik. Alderantziz hirugarren sektoreak (komertzio, transporte, administrazio, zerbitzu), bostetik frantses aktibo bat bakarrik (% 22) enplegatzen zuenak, gaur ia doble enplegatzen du % 40).

Mende askotan gertatu baino fenomeno aldakuntza inportanteago hauk belaunaldi bat bakarrean zehar ikusi dira. Behar bada ez gara beren inportantziaz ohartzen ez eta gaurko munduari planteatzen dion anitz problemaz ere (bizimaila, pentsakera, bizitzetxe...).

*Gehiago produzitu, lan gutiago eginez*

Nazio bateko bigarren eboluzio faktorea lanaren luzera da. Pertsona aktiboek astean hirurogei edo hirurogei eta hamar ordu lan egiten badute, agirian dago berrogei ordu lan eginez baino asko gehiago produzitzen dutela, medio tekniko berekin, jakina. Hona, bada, lanaren luzera asko laburtu dela Frantzian mendearen hasieratik, oraindik gerra aurrekoa baino haundiago bada ere. 1900-n lanaren bataz besteko luzera astean 62 ordu zen industrian; batazbestekoa, hau da, industria batzutan astean 75 ordutaraino ere lan egiten zela... 1938-n —urte okerra ekonomiarako— lanaren bataz besteko luzera 39 ordutara jausten da. Bataz besteko zifra honek esan nahi du orduan hain industriak (metalurjian batez ere) 45 ordutatik gora lan egiten zuela, beste batzuk ordea, erdizko edo osoko krisisean, 36 ordu baino askoz lan gutiago egiten zutela.

Gaur bataz besteko luzera 46 orduren inguruan dabil industrian. Dagigun kalulutxo bat: duela

mementu bat esan dugu industrian 5.900.000 langile dagoela astean 72 ordu lan eginez bataz beste; honek (bi kantitateak biderturik) astean 367 miloi lanordu ematen du. 1962-n 7.400.000 langile genedukan, astean 46 ordutako batazbestekoaz; honek astean 340 miloi lanordu inguru ematen du (guti gora behera bakarrik zeren "hilekari" askok orduka ordaintzen zaizkien langileen asteko ordugo hau baino lan gutiago egiten bahitu).

Gaur industriako langileen osoak, ugariago izanik ere, mendearen lehenengotan baino % 8 ordu inguru gutiago lan egiten du, hau da, urteroko oporrak (1900-n ez zeudenak) sartuz gero, urtean % 15 inguru gutiago 1900-n baino. Egiten duten produkzio industriala ordea, hiru bidertu egin da mendearen hasierari buruz. Hemendik argi ateratzen da orainarte aipaturiko bi faktoreak (pertsona aktiboen numero eta lanaren luzera) ez direla nahikoa produkzio nazionalaren eboluzioa esplikatzeko. Zein da bada lanordu gutiagoz gehiago produzi arazten duen hirugarren faktorea?

*Produktibitatea*

Produktibitatea da hirugarren faktore hau. Frantziako produkzio osoari (nekazaritza, industria, komertzio eta zerbitzu), artean % 4-tik 5-rako produktibitatea kalkulatzen zaio. Industriak % 6--tik gorako tasa daduka, honela hamabi urteka produkzioa dobletuko litzatekeelarik. Haugatik gerra denbora eta berrikuntza aldia (galdutako ahalmen ekonomikoa berritzera destinatua) kontuan edukirik ulertzen da nola indize honek men-

de erdian, lehen baino hiru bider gehiago bakarrik produzi arazi duen: 50 urtetan lau hamabi urteko baitaude. Kalulua, jakina, guti gora beherakoa da, zaila baita produktibitatearen neurri zehatzik ematea. Baina guti gora beherako honek orain arte aipaturiko zifren egigarritasun haundia agertzen du.

Eta produktibitatea zertan datza? Lehenengo, produktoreen trebetasun teknikoan; hemendik formazio profesionalaren garrantzia haundia nazio aurreratuetan. Denok konprenitzen dugu motor aberiatu bat berebilaren markan espezializaturik dagoen —eta beharreko lanabesak eskuan daduzkan— langile batek lehengo konpontzen duela halako motor klaseetan espezializatu gabeko edozein herri mekanikok —eta a fortiori, langile guti kualifikatuk baino. Formazio profesionalera kreditoak destinatzea etorkizunerako produktibitate ahalmen haundi bat pilatzea da, lan orduen efikazia hamar bidertu eginen duena.

*Inbertitzen dutenen etorkizuna*

Produktibitatearen beste elementu inportante bat, behar bada inportanteena: langileen eskuan jarritako lanabeseria. Makinismoko eta inbersioko problema osoa dabil hemen. Langile batek, denik trbeenenean ere, ezin gauza haundirik egin lanabes geokirik gabe. Katean lan egiten duen langile guti espezializatuak Renaulten nahiz Simcan askoz azkarrago eginen du motor bat tailer mekaniko tipi batean, lehenengo berebilak egin zituztenen antzera, bere medio hutsez motor bat egiten duen

langile askoz kualifikatuagoak baino. Espezializazio gutiagoz eta baita mila bider proportzio tipiagoz, katean lan egiten duen langileak mila bider produkzio oso gehiago duke behinolako tailerretan baino. Honexek esplikatzen du zer inportantzia izugarria dadukaten inbersioek nazio baten etorkizunerako. Nazio bateko hazte tasa biztanleriaren zifrari edo lanaren luzerari baino produktibitateari lotuago dagoenez gero, asko inbertitzen duten nazioak dira etorkizunerako toki apartik prestatzen ari direnak.

Esan izan da —eta egia da— etorkizuna, inbertitzen dutenena dela. Hau gaurko historian agiri da bereziki: guti edo deusik inbertitzen ez duten nazio subdesarroilatuak —beren sarrera urrietatik ezin dutelako inbersiorako ezer kendu— geratu eta atzeratu egiten dira, biztanleria produkzioa baino abiadura askoz haundiagoan hazten delarik. Alderantziz asko inbertitzen duten nazioak gora eta gora doaz, era batera gainera lanaren luzera ere gutituz: Estatu Batuak, Rusia, Mendebal Europako nazioak. Etorkizunean munduko lidergoa daramaketen nazioen antz bat edukitzeko, beren inbertsio indizea aztertu beharko: Rusiak gaur, urte onetan nahiz xarretan, bere produkto nazionalaren % 25 inbertitzen du. Estatu Bauek % 21. Frantziak produkto nazionalaren % 19 edo 20 bakarrik inbertitzen du.

Diogun bestalde, ikusmira honetatik balio duena inbersio produzikorra dela eta ez inbersio osoa. Sputnik bat ba liteke militarki onuratsu izatea etsaiari errespetoa sartzeko; baina hartarako mai-

la teknikorik gorena beharrik ere, Sputnikak ez du ezer produzitzen, eta ekonomiaz antzinako guda-haizkora, ezpata, tanke nahiz metrailadore-balak bezain alferreko da.

Garitza bat metrailatzeak apenas desegiten du ezer, baina abonu on baten efektorik egiten ez duela ere bai.

### *Noiz lortuko dute rusoek amerikarrei aurrea hartzerik?*

Azken ohar bat: inbersiora emaniko produkto nazionalaren portzentaiaz mintzatu gara. Baina produkzio nazionala hain diferentea denean (Estatu Batuetakoa Rusiako doble da) portzentaia berak Rusiako inbersio tamainia doblea darama Estatu Batuetan. Hazteko ahalmenak beraz ia bi bidertu egiten dira balio absolutotan. Sobietarrek epe luzera bakarrik itxadon dezakete amerikarrak harrapatzerik urtean azken urteotan bezalako produkto nazional zatia destinatzen badute inbersiora. Ez dute nolonahi ere Kruschev-ek partidu komunista sobietarrari jarritako epean lortuko.

Sobietar eta mendebaldar adituek eztabaida haunditan dabiltza zer epetan rusoek lortuko duten amerikarrak harrapatzea, hau produkzio osoz nola per capita-ko produkzioz. Neure aldetik eta alderdi bietatik lorturiko dokumentuak kontuan edukirik, ezinezkotzat dadukat rusoek, produkzio osoz, amerikarrak 1975 aurretik harrapatzea, edo

aaso aurrenen dela, 1972 aurretik, rusoek jarritako fetxa baino askoz beranduago nolanahi. A fornola sobietarrek amerikarrek baino P.N.B. zati haundiago damaioten inbertsioari, errenta erabilgarri gutiago geratzen zaie. Eta per capita errenta aipatzekotan —liteken hirugarren konparazioa— epea are luzeago doa oraindik, sobietar biztanleria, oraintxe ere amerikarraren goitik egonik, gehituz baitoa.

Bukatzeko produktibitatearen hirugarren faktore bat gogoraziko dugu, literatura ekonomikuko garai zati batean sona haundirik eduki zuena: lanerako gogoa. Gogorazteko bakarrik aipatzen dut zeren egitez, gaurko produkzio prozesoan lanerako gogoak ezer guti kontatzen baitu. Derrigorrezko zen produzio bideak guti desarroilaturik edo lanabeseria kazkarra zegoen garaian. Orduan artisanoen trebetasuna edo agudo lan egiteko gogoa zen nagusi.

Irratiz zuzenduriko edo servo-motorrez hornituriko makinak zaintzea besterik ez dagoenez geroztik, bost axola du gogo gaiztoz nahiz pozez xistuka egin: hala nahiz hola servo-motorrak hartutako aginduen arauera funtzionatzen du. Lanerako gogoak hala ere, ba du oraindik zereginik eskulaneko edo buru-profesioetako aktibitateetan. A fortiori, kontu kontuan edukitzekoa da komertzio arloan; nahiz eta hemen balio duena ez izan hainbeste lanerako gogoa nola konsumitzailea zurrupatzeko zuhurtasuna.

## II. PRODUKTO NAZIONALAREN ERABILERA

Zer eginen du bere jatorria eta eboluzioa azter berri ditugun produkzio nazionalarekin hura produzitu duen nazioak?

Zati bat erabili ez, atzerrirako gorde baizik: esportazio deritzana.

### A. *Esportazioek inportazioak ordaintzen dituzte*

Zergatik esportatzen da? Inportatzen dena ordaintzeko. Segur asko ezein naziok ez du aurreneko afantzat eduki hauzoei ematearren bera zerbaitez pribatzea. Herrien historiak alderantzizkoa du erakustenago: beste nazioak produzitzen duen zati bat bilatu —inoiz manu militari— etxean lan bat aurreztearren. Azken aldion sobera dakusagu zenbat gostatzen zaien nazioei beren produkziotik % 1 (inoiz gutiago) uztea herri atzeratuei laguntzeko. Aspaldidanik hala ere, nazio zibilizatuek berek produzitzen eta esportatzen duten zerbaitez ordaindu ohi dute hauzoei erosia. Lehenengotan merkantziaz egiten zituzten kanbioak (trukean) eta gero xanponez (nazio erosleak nazio saltzaileari azken honen xanponez, "dibisak" deritzatenez, ordaintzen dio).

Frantziak esaterako, bere produkziotik % 13--tik 15-ra, urteen gorabeheran, destinatzen du gaur esportaziora. Beste hitz batzuk esanik, "Frantziako etxean" 100 produzitzean 13-tik 15-ra atzerrira bidaltzen du bere mugaz handik erosi duena ordaintzeko. Frantziako kanpoko komertzioa, urteetan defizitun izana, gaur gainezko da (hau da,

erosi baino saldu gehiago egiten dugu) 1958-ko debaluaziotik gora. Baina 1962-tik aurrera komertziozko gainkia desagertu egin da eta salketek erosketen balioa kitatzen dute doi-doi; areago 1963-n berriro agertuko da defizita, 1964-n astunduz doala.

Dirudienaz bestera, komertzio-gainkia erreserba galtze bat zaio dadukan nazioari, hartzen duen baino merkantzia gehiago atzerriratzen baitu. Egia erreserba galtzen hau urrengo urteetan kita daitekeela eta honela urte bateko gainkiak urrengo urteko defizita berdintzeko balio du. Alderantziz defizit komertzialik agertzeak (atzerriari saldu zaion baino gai gehiago erosi) egitez atzerriaren bizkarretik bizitzea dakar, atzerriko produkzio zati bat irenstea. Berrogei urtetan zehar hauxe izan da Frantziako kasua eta 1956 eta 1957-ko urteetan gure sal-erosien kito-indizea % 70 bakarrik zela. Egoera hau, jakina, eskasa da, mementua heltzen baita atzerria bere bizkar gainean pilaturiko komertzio difizitaz aspertu egiten dena eta errenboltstzeko eskatzen duena. Zer egin orduan?

*Ordaintzalea agintzaile*

Nazio batek, edozein pertsonak bezala, ez daduka inola ere bere medioen gainetik luzaro bizi ahal izaterik. Baumgartner-ek, Frantziako Bankuko Gobernadore zela, hala gomutarazi zion sarri Parlamentuari bere kartetan, behin behintzat Gobernuaren erorrera probokaturik.

"Frantsesak (uler "Frantzia" entitatea) beren medioen gainetik bizi dira" zioen orduan Baum-

gartner jaunak, hainbeste erosten eta hain guti saltzen segitzerik ez genedukala subraiatuz.

Zergatik egiten zituen ohar hauk? Bada, Frantziako Bankuko Gobernadore gisa, amerikar adituak edo politikoak maiz ikusten zituelako bere ontuetan eta Frantziako Estatuko Presupostu kontuetan usmaka, gaineratzen zutela: "Saltzen duzuena baino gehiago erosi hori edo bestea egin behar duzue..." Honegatik 1957-n "Monnet arazoa" zeritzana zela-eta (Gaillard kontseilu buruak Jean Monnet bidali zuen Estatu Batuetara diru apur baten eske), konstrukzioa (amerikarrek inflazionistatzat zedukatena) gutitzekotan bakarrik hartu genituen "Osaba Samen" dolarrak eta frantsesen barren konsumoa mugatzekotan (garai hartan zerga gehigarri mordo bat sartu zuten herri konsumoa gutitzeko). Prezio hauxe ordaindu behar izan genuen derrigorreko dolar haik lortzeko.

Atzerriko dirua: dolarrak, markoak, lirak nahiz liberak eskatu beharrean jartzeak atzerriari bide damaio ez bakarrik finantza moraleko edo jestio ekonomikuko irakatsiak guri emateko, baizik eta gure negozioen "bir-antolamendua" eskatzeko ere honako argudio sinple batez: "zuen ordez paga dezadan nahi duzuenez gero, utz zuen kontuak pizka bat usma ditzadan".

*Ezkutuen balantza*

Orain arte gaien komertzioaz bakarrik mintzatu gara, merkantziak bakarrik sal erosiko balira bezala atzerrira. Arrazonamendu berdinak eta ondorio berdinak daude ordain balantzako "partida

ezkutuak" deritzatenetan ere, gauza agiriak diren gaien zerrendarekin batera agiri direnak. Turistena esateko komertzio "ezkutua" da: ez dugu noski atzerria bisitatzera doan frantsesik saltzen ez eta Frantzia mirestera datorren amerikarrik erosten ere, baina bai saltzen dugu frankorik Italiara, frantsesek nazio hartan gastatzen dutenean, eta bir-geuretzen dolarrik Frantziara oporretan datozen amerikarrei esker. Ba dago beraz "turismoko balantza" bat, Frantzian, frantsesik atzerrira gastatzera joateko joera duena urtean baino urtean frantses gehiago irtetzen baita kanpoak ikustera.

"Flete balantza" bat ere ba dago, ez baitago naziorik —komertziora bereziki emaniko nazio batzu izan ezik— bere komertzioa berak bakarrik egiteko haina barku duenik. Nazio bakoitzak beraz, bere ekar-eramanak seguratzeko, beste bati alkilatzen dizkio barkuak, berak ere era batere bere batzu alkilatzen dizkiolarik atzerriari. Ingalaterrak, Greziak eta afrikar nazio guti batzuk —"laket paeiloia" deritzana praktikatzen dutenak, beren banderakin nabegatzeko baimena damaielako europar harmadore batzuri, Narkos edo Onassis famatuak belazalakoei— dibisa mordo galanta irabazten dute beren barkuak atzerrira alkilatuz. Frantziak ordea "flete balantza" defizituna daduka, bere transporteetarako kanpoko barku gehiago darabilelako berak atzerriari alkilatzen diona baino. Baina Frantziako flete difizita pizkanaka gutitzen ari da alde batetik barku alkilerraren prezioa ("flete tasa" deritzana) gutituz doalako itxas komertziorako barku gehiegi baitago, eta

bestetik Frantziarantzko petrolio garraioak atzerriko barkuz bidaldia laburtu duelako: Bougie-(Saharako petrolioa irtetzen den bortua) Marselle-ko bidea behinolako Arabia-Marselle-koa baino laburrago da.

Ordain balantzako partida "ezkutuen" artean "asma patenteen balantza" ere aipatzen da. Izan ere frantsesen burua atzerritarrei alkilatzen zaie gure nazioan asmaturiko patenteak han erabiltzen utziz eta alderantziz. Lehenengo kasuan Frantziak dibisak hartzen ditu eta bigarrenean frankoak ordaintzen: den dena merkantzien komertzioa balitz bezalaxe.

Azkenez "kapitalen balantza" ere esaten da, atzerritarrak daudelako, amerikarrak eta alemanak batez ere, elkarte frantsesetako akzioak edo obligazioak erosten dituztenak —edo kapitalak Frantzian inbertitzera datozenak fabrikak edo almazenak egiteko— eta alderantziz kapital frantsesak daudelako atzerrian inbertiztera doazenak edo berekin atzerriko balioak erosten direnak.

Balantza hauen multzoa (partida agiriak: komertzioa, eta partida ezkutuak) da orain balantza deritzana. Ez dugu honetaz besterik ezer esanen. Nahikoa da komertzioko elkar-trukeei buruz lehen eginiko gogoetak gogoan edukitzea.

### B. *Barren usorako gerartzen dena*

Produkziotik esportaziorakoa kendutakoan, nazioak bere barren usorako erabiliko duena geratzen da. Gerakin hau gainera gehitu egin da nazioak kanpoko salmentei esker irabazitako dibi-

sazordaindu ahal izan dituen inportazioekin. Esaterako, Frantziako kasua zifratzeko esan daiteke "Frantziako Etxeak" 100 produzitzen duenean barren usorako geratzen zaiola: 100 — 13-tik 15-ra = = 85-tik 87-ra + inportazioak: 12-tik 14-ra (balantza gainezkoa denean); edo 14-tik 16-ra (balantza defizitun denean).

Hau da, guztira: 99-tik 101-ra, urteen gorabeheran. Zer eginen du guzti honekin? Gehiena konsumotan urtuko du (% 76 1963-n) eta zati tipiago bat inbersiotan (% 23), ondorengoek probetxatuko dutena.

Baita ba dagoke —laburki aipatzen dut— zatitxo bat (% 1-tik 2-ra) nazioko stockak gehitzeko ere, zeren produkzioa hazi-ala "Frantziako Etxeak" stock haundiagoen beharra baituke.

*Hamar urtetan sanitate gastuak bi bidertu egin dira eta janaritakoak bost bidertu*

Konsumoa ia partikular hutsen kontua da. Izan ere oraintsu aipaturiko % 76-tik % 71 inguru partikularren konsumoari dagokio eta gainetiko % 5 administrazioari.

Administrazioak ere ba du, bai, konsumitzen: alkilerrak ordaindu, lapitzak, gomak, papera eta baita kotxeak eta guztietariko administrazio gaiak erosi...

Partikularren konsumoa azkar eboluzionatzen da, pertsonen portaera, sarrerak gehitzean, aldatzen den neurrian. 1950-1960-ko tartea ez da hain haundia: hamar urte bakarrik. Hala ere aldakuntza haundia igartzen da. Tamainiaz (hau da, pre-

zioen igoera kendurik) frantses bakoitzaren batazbesteko konsumoa % 44 gehitu da. Indize hau, jakina, altuegia da nazioko aberaspenaz gutiago probetxatzen diren familientzat (alokatu tipiak, nekazariak, zaharrak, familia ugariak etab.) eta apalegia onura gehiago ateratzen diotenentzat (profesio liberalak, koadro alokatuak, zelibeak). Baina batazbestea altua da: besterik gabe da nahikoa "guztizko xirokuntza" (langileen gero eta pobreagotzea) dela-eta komunisten diskursoak barregarri uzteko.

Bestalde frantsesen konsumo gastuen banaketa arras besterik da orain hamar urte bakarrik zenaren aldean. 1950-n frantsesen konsumo erdia janaritara (% 39,3) eta edaritara (% 9,7) destinatzen zen. Hamar urte geroago % 41-ra jautsi zen (% 32,8 janaritan eta % 8,2 edaritan). Kontuz hemendik frantsesek lehen baino gutiago jan edaten dutela ateratzeaz, zeren 1960-ko % 41-a ez baita 100, 144 baizik. Egitez 1950-n jan edateko 49 gastatu zuten frentsesek hamar urte geroago 59 gastatzen dute: 12 franko inguru edaritan (lehengo 10-en kontra) eta 47 janaritan (lehengo 39-ren kontra). Frantsesen jantzitako gastuak ere beheratu egin dira 1950-i buruz: % 12,1 % 14,9-ren ordez; baina hemen ere jantzi gastuetako gorakada korrelatiboa dago (% 17 inguru) eta 1960-ko portzentaia hau oso haundiagoari dagokio.

Frantzian gainetiko gastu sail guztiak ere gehitu egin dira hamar urteotan; ez bakarrik balio absolutoz, balio erlatiboz ere baino. Hona lau adibide. Lehenengo, bizitzetxea. Honen partea frantsesen konsumo gastu osoan % 13-3-tik % 16,4-ra

pasa da; honek, 1950-tik 1960-rako gastuen gehitze globala kontuan edukirik, % 77-ren aurrerapena ematen du. Hau da, 1950-n 1960-n gastatzen duten baino 3/4 gutiago gastatzen zuten frantsesek aterbetzeko. Zergatik? Ez da beren kontua: sei-hile bakoitzean automatikoki gertatzen da gerra aurrean eginiko etxeen alkiler igotea. Gaizkien aterbeturiko frantsesei buruz, alkilerreko H.L.M. bat lortzera heltzen direnek —pribilejiatuak orduan— lehengo aterbean ordaintzen zuten bi, hiru edo bost bider gehiago ordaindu behar. Pisu baten jabe ekiteko modurik ez dadukatenek berriz karga izugarria bizkarreratu behar prestamoak errenboltsatzeko, konparaziorik ere gabeko kargak noski lehen, jendeztaturiko pisu batean edo inolao konfortik gabe, ordaintzen zuten alkilerraren aldean. Kondlizio hauetan aisa ulertzen da frantsesek bizitzetxeari damaioten partea 3/4 gehitzea.

Gorantz doan beste partida bat: sanitate gastuak, % 5,9-tik % 8,7-ra pasa direnak, hau da, balio absolutotan bi bidertu baino gehiago (+ % 112). Segurantza sozialari batez ere zor zaio hau: familiak gehiago zaintzen dira beren gastuetako parte bat errenboltsatzen zaielako. Baita egia da farmazia gaien garestitzeak (sendatzea beraz lehen baino garestiago) eta pentsioen eta erritiroen hobekuntzak (zaharrak beraz gutiago gaizki zaindurik) sanitate gastuen gehitze honi bultzada haundia eman diotela.

Gorantz doan azken partida: kultura eta jolas gastuak, % 6,5-tik % 8,1-ra pasa direnak (hau da % 80-ko gehitzea balio absolututan): erdiko eta

goiko gizarte mailen opor-aldi gero eta garestiagoak, herritar klaseen opor-aldi luzeagoak, telebisio, zine —telebisioa dela-eta lehen baino gutiago joaten dena, baina baita lehen baino garestiago dagoena ere—, hizparringiak, aldizkariak, asteburuko irteerak...

*Enpresek seguratzen dute Frantziako 2/3 inbersio*

Zer egiten da konsumitzen ez esportatzen ez denaz, konsumorako libre geratzen denaz? Inbertitu egiten da. Inbersioa —hitz itsusi samarra— nazioko hornitura gastuen multzoa da, geroago zerbait, osasun nahiz merkantzia, produzitzeko balioko duten gastuak. Enpresei inbertitzea hil-biziko zaie. Berak dira, direla industrial, nekazari nahiz merkatari, direla publiko nahiz pribatu, nazioko hornitura gastuetako zatirik haundiena seguratzen dutenak. Frantzian 1963-n inbertsiotan gastaturiko 77.300 miloi franko berrietatik 54.000 miloi, 2/3-tik gora, enpresek eginiko inbersioei zegokien. Hauei partikularrek eginiko inbersioak gaineratu behar zaizkie: lur eroste, pisu eroste, elkarteetako akzio eroste (honela elkarte hauei makineria erosteko eta beren aktibitateak zabaltzeko bide emanez)... Halaber administrazioko inbersioak (makinari, sarritan elektronikoak gaur, etxe, eskola, hospitale, karretera, zubi...

Inbersioei buruz zehaztasun bat erantsi nahi nuke. Inbersio-tasak esatean (Frantzian produkzio nazionaletik % 23 1963-n), inbersio brutoez ari gara, ez inbersio netoez. Zer alde dadukaten?

Hona adibide bat: nazioak karretera bat egin

du; berebilak karreteran zehar dabiltza, gastatu egiten duten eta hainbat urteren edo hileren buruan karretera konpondu egin beharko erabiltzen segitzekotan. Hau da hasierako inbersioaren balioa konserbatzeko bakarrik ere (ez gehitzeko) konserbazio eta berrikuntza gastu batzu egin beharra dago: hauxe da amortizazioa, enpresan nahiz nazioan behar beharrezkoa. Berak nazioak urtero egiten duen inbersio gehigarria, edo beste era batera esanda, nazioa aberasten duen ekipoaren balioa jakiteko, inbersio brutotik (orain arte esaten ibili garenetik) aurreko inbersioaren amortizazioari dagokion kopurua kendu beharra dago (12).

Eragozpena zori-xarrez zerean datza, ia ezineko dela nazioko amortiziorik zehazki kalkulatzea. Guti gora behara urteroko inbersio brutoaren 2/5-tan baloratzen da. Oinarri honekin 31.000 miloi franko berri jo diezakeogu "Frantziako Etxeko" ekipoa konserbatzeko eta urtero amortitzeko behar denari. Nazioko inbersio netoa beraz, 1963-n litzateke: 77.200 miloi (inbersio brutoa) — 31.000 miloi (amortizazioa) = 46.200 miloi. Hau da, guti gora behera, nazioko produkziotik % 13-tik % 14-ra.

## C. *Nola banatzen da produkzio nazionala?*

Produkzio nazionalaren erabilerari buruzko atal bukatzeko, dakusagun nola banatzen den; beste era batera esanik, zer errenta nazional zati tokatzen zaion gizarte talde bakoitzari.

Zori-xarrez ez dago hau zehazki kalkulatzerik, errenta estadistikek ez baitute gizarte talderik

garbiro berezten, errenta ereduen edo klaseen arteko diferentziak baizik. Esaterako: estadistika ofizialek ez dute adierazten: alokatuak, honenbeste mila miloi. Norbaitek iharduki dezake alokairua alokatutzat hartzen duela eta beraz apenas dagoela diferentziarik. Egia al da hau? Elkarte haundi bateko zuzendari jeneralak —estadistiketan— alokatu gradoa daduka; ez de hala ere —ez genuke besterik behar— alokatu tipien taldekoa, bere agindupean daduzkan eta bere enpresan ia inolako erantzukizun inportanterik uzten ez dien 2.000, 5.000 edo 20.000 langileetarikoa... Beste adibide bat: pentsa, esaterako —probintzietan sarri gertatzen dena— enpresa bateko alokatu tipietariko baten emazteak denda bat dadukala (etxeko presupostua pizka bat biribiltzeko); senarraren alokairua estadistikek toki batean dakarte eta emaztearen errentatxoa beste batean, emaztea merkataritzat jotzen baitute, eta hala ere, biak dira gizarte talde berekoak... Hirugarren adibidea: familia honetan haurrik badago, prestamen familiarrak hartzen dituzte, baina hauk ez dira alokairu zerrendan kontatzen ez eta komertzio-errentetakoan ere. Klase bereko prestamen guztiekin batera agiri dira (direnak direla hartzaileak) aparteko zerrenda batean. Honela lehen begiratuan ez dago jakiterik prestamen familiarretako zer zati joan den alokatuengana, zer merkatariengana, etab.

Lehenengo eragozpen honen erruz ezin zehazki esan errenta nazionaleko zer zati hartzen duten alokatuek, zer ugazabek, zer merkatariek... Bigarren eragozpena da estadistiketan errenta brutoak (zergak kendu aurrekoak) datozela eta ez errenta

netoak (zergak kendu eta gerokoak), eta denok dakigu batzutatik bestetzutara alde haundiak daudela, gizarte talde batzuk zerga mordoa ebita dezaketelako (iruzurrari edo legeak damaizkien mesedeei esker) eta beste batzuk ez. Bestalde errenta haundiek sarrerarik erdiraino motz dezaketen zerga progresiboa dadukate. Kotizazio sozialak —gizarte talde desberdinei dagozkienak— ez dira taldeka tasatzen ez errenta netoetatik kentzen.

*Errenta-eredu desberdinei zer tokatzen zaien*

Penagarri da beraz —1963-ko neguan ospaturiko errentei buruzko konferentzian hoska eta bozka esan eta berresan zenez— errenta brutoez bakarrik mintzatzea, estadistikak falta izatea eta gizarte talde desberdinetako sarrerak zehazkiago ezin jakitea. Segur asko arlo honetan mantentzen den argi-itzala bapo datorkie klase nagusiei, Frantziako desberdintasun sozial hobeto estaltzeko bide ematen duelako. Baina ba liteke honek honela askorik ez irautea, kontuan edukirik presio haundiak daudela, apur bat alde guztietatik —estadistikoak barru— arlo hau argitzeko.

Nola banatzen da nazioko errenta brutoa (zerga aurretik), sarrera motaka klasifikatzen den bakarra? Hona nazioko kontuak 1961-n:

| | % |
|---|---|
| Alokairuak: 105.200 miloi franko berri ... ... ... | 43 |
| "Enpresarien" errentak (industriadun, artisano, merkatari, nekazari eta profesio liberal) 68.300 miloi ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... ... | 28 |

| | |
|---|---|
| Akzio-obligazioen errentak (interesak eta dibidendoak) eta alkilerrak: 7.220 miloi ... ... ... | 3 |
| Horniturazko subentzioen eta gerrako kalteen laguntza hartzaileak: 1.440 miloi ... ... ... ... ... | 0,6 |
| Prestamen familiarrak eta sozialak (gizarte talde guztienak): 39.600 miloi ... ... ... ... ... ... ... | 16,2 |
| Asistituen sarrerak: 7.660 miloi ... ... ... ... ... ... | 3,1 |
| Beste iturri batzu: 15.000 miloi ... ... ... ... ... ... | 6,1 |

Sukaldeen errenta brutoen osoa: % 100, hau da, 244.4000 miloi. Konseilu ekonomikoa ezaskitasun hauk leuntzen saiatu izan da, metodo nahasiagoekin —nik behintzat antzik ere ematen ez diedanekin— kalkulatuz talderik inportanteenaren, alokatuen, sarrerak. Konklusiotzat atera du talde honek produkto nazionaletik % 50 inguru hartzen duela; hau da, nazioko errentatik % 60 (alokatuek harturiko prestamen familiarrak eta sozialak kontaturik, jakina).

Honelaxe dago nazioa, ahalik gutien gaizki azterturik, kontaduria nazionaleko estadistikak dauden egoeran. Bego argi hau egoera pasakor bat besterik ez dela, errenta nazionalaren kontaketa inoiz ere ez dela geldi egon. Zer da puntu honetaz dakiguna?

## III. NOLA EBOLUZIONATU DA ERRENTA NAZIONALAREN BANAKETA?

Gai zaila da hau, konparazioak apur bat arriskutsu baitira beti —estadistiken ezaskitasuna ikusirik— eta atakagarri nahiz eta zifrak ez gehiegi

birrintzeko borondaterik onenez ibili. Hala ere garrantzia izugarriko gaia dugu, zeren sakonean nazioak norentzat lan egiten duen jakitea baita. Optika politikoz honelako gaiak funtsezkoak dira: zer erantzun ematen zaion, halakoxe iritzia aterako agintean dagoen errejimen ekonomikoaz, bere zuzentasunaz edo zuzengabeaz.

Zer gertatzen da Frantzian? Honela zifra ofizialen erantzuna:

ERRENTA-EREDU DESBERDINEN EBOLUZIOA

| | % | % | % |
|---|---|---|---|
| Alokairuak eta sarrera zuzenak ... | 42 | 43 | + 1 |
| Enpresarien errentak (industriadun, merkatari, nekazari eta profesio liberalak) ... ... ... ... ... ... ... | 35 | 28 | — 7 |
| Kapitalaren errentak (akzio-obligazioa eta alkilerrak) ... ... ... ... | 13 | 3 | —10 |
| Errenta batzu ... ... ... ... ... ... ... | 1 | 6 | + 5 |
| Prestamen sozialak eta familiarrak | 5 | 16 | 11 |
| Asistentzia ... ... ... ... ... ... ... ... | 4 | 3 | — 1 |
| Ekipo subentzioak ... ... ... ... ... | — | 1 | + 1 |
| GUZTIRA ... ... ... | 100 | 100 | |

Behar bada pentsatuko da: itzel!, alokatuek eta funtzionarioek nazioko errenta zatirik ederrena daramate eraman ere, zeren, errenta osoa asko haziz (gerra aurreari buruz nazioko errenta ia erdi gehitu da), beren partea ere asko haunditzen baita. Argudio hauxe erabiltzen dute sarritan argitalben kontserbadoreek klase-burruka aspaldiko

ipuina dela frogatzeko, nazioaren espansioak gaur egun alokatu taldeari omen damaio onurarik gehien eta hau hain automatikoki egiten dela non penagarri baita alokatuek gehiago edukitzearren burrukan ekitea. Baita diote alokatuak direla prestamen sozialen eta familiarren hartzaile nagusiak, hauxe dela izugarrien gehitu den sarrera saila, laburpenez, guztira: alokairuak + prestamen sozialak eta familiarrak belaun-aldi batean % 47-tik % 59-ra pasa da. Zer besterik nahi duzue?

*Alokatuak ez dira nazioko aberaspeneko irabaztun nagusiak*

Pentsakera honek anitz solaspide ematen dauku gai hau argiago ikus arazteko.

1. Alokatuen eta funtzionarioen parte gehitze tipi hau errenta nazionalean ez zaie eskuzabalki emana, berek atzemana baizik. Azken hogei urteotan gertaturiko huelga guztien ondorio da hau. Dudarik ere ez dago ez zatekeela huelgarik eginen, gehipenak bestela lortu ahal izan balira; baita argi dago, huelga gutiago egotera, gehipen kazkarragorik egonen zatekeela. Zentzuzko konstatazio hauen arauera, berdin pentsa daiteke, huelga gehiago egotera, alokatuek dudarik gabe parte haundiago lukeitela errenta nazionalean.

Gogora Andre Tiano-ren liburua (13), aurreragoko lan batean aipatu neutzuena eta ikusmira honetatik oinarrizko dena: burruka sindikalaren eta langileei emaniko sarreren inportantziaren artean erlazio zuzena dago. Gogotan dagoke gainera

enpresen funtzionamenduari buruzko estudioan ateratzen genuen konklusioetarik bat zera zela, enpresak zergak ordaindu, prestatu dizkioten kapitalen interesak bidali eta kapital honetako zati bat errenboltsatu ondoren, sarrera zati bat geratzen dela bi alderdi interesatuek tirabiratuko dutena: kapitalistek eta alokatuek. Eman berri ditugun zifrak kapitaldunen taldea eta alokatuena. kontra imini dituen tirabira honexen ondorio dira.

2. Bigarren oharra: alokatuen eta funtzionarioen numeroa asko gehitu da 1938-tik 1961-ra. Bestalde gaitz da zer neurritan esatea, harrigarri badirudi ere... Arriskutsu da gaurko zentsoak gerra aurrekoekin konparatzea, metodo oso desberdinik erabiltzen baitzuten orduan. Funtzionarioen gaurko numeroa (Estatukoak eta kolektibitate lokaletakoak) bi miloitan jo daitezke (hauetariko 300.000 militarrak) 1936-ko 1.168.000 miloien kontra (hauetarik 156.000 militarrak). Funtzionariotan beraz, gerra aurrean baino % 70 gehiago dago.

Industria, komertzio eta nekazaritzako alokatuen numeroari buruz, 1962-n —azkenengo zenstoaren fetxa— 11,5 miloi zen (1.100.000 gehiago 1964-n baino). Zer gehitze egon da gerra aurreari buruz? Segur asko miloi eta ehun mila hau baino askoz haundiago, Frantzian alokakuntza gehikorraren mugimendua etengabee izan baita. Hona ordea estadistikek 250.000-ko (% 2) gorakada bakarrik ematen dutela gerra aurreari buruz. Hau barregarria da lur-alokatuen gutitzea kontuan edukita ere. Honen errua, lehen esan dugunez, gerra aurreko eta osteko zentsoak hain guti konparagarri izateak daduka. Diogun beraz minimora

jorik, alokatuen numeroak (funtzionarioak kanpo) gutienez miloi bat (eta dudarik gabe gehiago) gehitu behar izan duela 1936-tik 1961-ra hau da, % 9 edo 10.

Guztira, alokatuen numeroaren gehitzea (funtzionarioak barru) gerra aurreari buruz gutienez 1,8 miloitan jo daiteke, hau da, % 15-tan (14). Gehitze hau askoz nabarbenago da era batera beste pertsona talde aktibo batzu gutitu baitira (batez ere lur-langileak eta merkatari tipiak); biztanleria aktibo enplegaturik apenas gehitu da (% 3-tik 4-ra). Errenta nazionałean beraz alokairuen parteak gorantz egin behar, batez ere alokatu gehigarri hauei ordaintzeko.

3. Gaineratu beharra dago oraindik alokatuen lanaren luzera asko gehitu dela gerra aurreari buruz: % 19 orduka ordaintzen zaion pertsonalarentzat transformazio industrietan. Ikusten denez, alokatuen eta funtzionarioen partea nazioko errentan gehitzeak ez du esan nahi hauentzat hobekuntza haundirik egon denik nazioko beste gizarte mailei buruz, zeren aldi honetan 1,8 miloi alokatu funtzionario gehiago baitago parte hau banatzeko eta gainera parte hartarako eskubide edukitzeko denbora gehiago lan egin behar (nazioko beste maila aktiboek ordea ez dute lan ordurik luzatu beharrik eduki).

Azkenez argi dago, patroingoak zioenaz kontra, alokatuen partea errenta nazionalean askoz astiroago gehitu dela berek sarturiko lanorduen kopuru osoa baino. Dudarik gabe alokatuen atzerapen hau nazioko aberaspenean askoz haundiago

izanen zatekeen azken hogei urteotako huelgen sakadarik gabe.

4. Hala ere, ihardukitzen du patroingoak, alokatuen errenta diferituko partea (prestamen sozialak eta familiarrak) hobetu egin da. Dudarik ere ez, esanik dugun bezala, errenta hauk asko gehitzen direla segurantza sozialaren hedadurari eskerrak asignazio familiarretan eta erretiroetan. Baina ez dira alokatuak prestamen sozialan gehitzearen irabaztun bakarrak, aurreko koadroan nabari denez (% 11). Bakar enpresariak ere onuratzen dira "kotizatzera jartzen badira), eta gaur halako prestamenik hartzen duten nekazariak asko dira: hainbeste denboratan izentazio uts bat besterik ez zedukatela, orain behintzat komertzioko eta industriako alokatuek haina hartzen dute kasik. Laburki, gerra aurreaz konparaziorik egitekotan, pentsa beharra dago prestamen sozial eta familiar gehigarrien zati bat bakarrik doakiela alokatuei (behar bada % 6 edo 7, % 11-tik). Kontu guztiok jo eta gero, hona alokatuen parte osoaren (sarrera zuzenen eta diferituen) gehitzea errenta nazionalean % 7 edo 8 baino ez dela (% 47-tik % 54 edo 55-ra pasaturik guti gora behera). Gorakada hau askoz tipiago da alokatuek lan eginiko ordu kopuruarena baino (laurden edo bosten bat inguru).

### *Xirokuntza erlatiboa, baina ez xirokuntza guztizkoa*

Gerra aurreaz konparaturik beraz, "xirokuntza erlatiboa" egon da, hau da, alokatu bakoitzak nazioko aberaspenean, ere lan gehigarria jorik, itxa-

don zezakeen partearen gutitzea. Honek bestalde berdin balio du alokatu tipientzat nahiz erdikoentzat.

Baina ez da egon, komunista frantsesek —ez noski Rusiako Partidu komunistako teorikoek— uste zutenez kontra, "guztizko xirokuntzarik", hau da, alokatu multzoaren pobretze gero eta dramatikoagorik, eta ez da egon langileen burrukagatik batez ere. Aski zaikegu, honetaz konbentzitzeko, nola gehituz doazen ikustea —herri hauzoetan ere— berebilak, scooterrak, garbigailuak, izozgailu elektrikoak, oporretara doazen erdiko alokatuak... Gaur ez dago esaterik gizarte klase pribilejiatuak bakarrik onuratu direla nazioko aberaspenaz. Baina bai ondo esanik dago berak direla onuradun nagusiak, eta gainera lehen errenta nazionalean zedukaten partea gaindurik.

Hala eta guztiz ere, har gogotan ez dudala esan aberastasun gehikorra dela-eta, ia bizitzetxe krisisik ez dagoela edo bizitzetxe krisisa 1938-n baino gutiago gogorra dela; ez eta ez dut esan alokatuen egoera asko hobetu denik ere... Egia da, ordea, guztira alokatuen egoera hobetu egin dela 1938-ri buruz eta batez ere alokatu altuena.

### *"Enpresarien" errentak: hondorik gabeko osin*

Eta Frantziako beste gizarte taldeak? Nekazariei buruz, ez dadukagu estadistika ofizialak besterik; dokumentu ofizialetan hauen errentak beste "enpresarienekin" batera kontatzen dira: industrial, merkatari eta profesio liberalak. Multzo honetako zatia gutitu egin da gerra aurreari buruz:

% 28, % 35-en ordez. Hau nekazarien gutitzeak esplikatzen du batez ere: 3.011.000 1962-n eta 5.260.000 1938-n, hau da, % 40 gutiago. Nekazarien sarrerak apartatzea lortuz gero, beste "enpresarien" partea errenta nazionalean gehitu egin dela ikusiko genuke.

Esan al dezakegu, hau esplikatzeko, enpresari ez-nekazarien lan-luzera gehitu egin dela? Honek azterketa zehatzagorik beharko luke, baina gaurko egoeran arrikuzko litzateke baiestea: enpresariek lehen haina lan egiten dute, lehengo asteburu luze eta guzti. Ez dut uste merkatariek gerra aurrean baino ordu gehiago lan egiten dutenik; aitzitik ordea gerra aurrean baino astean egun bat gutiago irekitzen dute denda, bitartean denda astean egun batez derrigor hersteko agindua etorri baitzen.

Errenta zuzenetako hirugarren saila: estadistikek diotena: "kapitalaren errentak". Kapital gisa jarritako dirutik datozen sarrerak dira hauk, dela elkarteei prestatuz (obligazioak) dela elkarteetan parte hartuz (akzioak), edo baita inbersio inmobiliario gisa ere (sarrerak orduan inmuebleetako maizterrak ordainduriko errentak dira). Sarrera mota honetako portzentaia asko gutitzen ari da errenta nazionalean: % 3, % 13-ren ordez. Gutitze hau kaltegarri zaie beren dirua gerra aurrean inbertitu zutenei. Gainera orain gerra aurrean baino 30 bider gutiago benetan balio duen frankotan ordaintzen zaie.

Debaluazioak munduko nazio guztietan, zorren balioak gutitzeko oso modu efikazak dira, zordunak kapital prestatuaren izenezko balioa (franko-

tan) ordaintzen baitu eta ez kapital haren benetako balioa (erosteko ahalmena). Frantziako Estatuak garaitiaz erabili du gerra aurrean eta ostean urrengoz urrengoko debaluazioen politika hau; honela huskeriazko zorrarekin (benetako baliotan) bukatu zuen gerra, hasi berriz zor izugarriz hasi zuela. Dirua prestatu ziotenak galtzaile...

*Alokairuen partea gehitua joanen da*

Ikusi dugunez, belaun-aldi bakar batean aldakuntza haundiak egon dira errentaren banaketan. Eta hala ere, belaun-aldi bat ez da noski hain denboraldi luzea... Konsumoan ere, gorago esan bezala, zer aldakuntza azkarrak egon diren kontuan edukiz gero, Ekonomia agudo transformatzen ari zaikula inguruan ikusiko dugu. Gure mendekiderik gehienek honen kontzientziarik eduki ez arren, eboluzioak bere bidea darama aurrera.

Errenta nazionalaren banaketako eboluzioari buruz egin berri ditugun oharrok —zifra ofizialetatik atereak— baitetsirik geratu dira gorago aipatu dudan Kontseilu Ekonomikoaren azterketa berezi batean. Azterketa honetan Kontseilu Ekonomikoa errenta nazionaletatik alokatuei zer parte (% 60 bere ustez) zegokien ez ezik, gerra aurretik honantz zer eboluzio ekarri duen jakiten ere saiatu da. Haren eta gure konklusioak baterakoak dira: haren ustez alokatuen proportzioa errenta nazionalean % 51-tik % 60-ra (+ % 9) pasa da; gure kontuetan % 47-tik %-ra (— % ): alde tipia benetan.

Bestalde eboluzio hau ez da Frantziakoa ba-

karrik, nazio industriatu guztietan nabari dena baizik. Estatu Batuetan esaterako, alokatuei destinaturiko errenta nazional zatia 60 urtetan (1875-1935) % 54-tik % 60-ra pasa da .Gerra azkenean % 60-tik gora dago kasik. Eboluzio jeneral hau gorago nioen klase aktiboen mugimenduari dagokio: alokatuak gehituz doaz beti, batzutan lan ere ordu gehiago egiten dutela (15).

Ekonomia hazietako alokakuntza gehikorrak errenta nazionaletik alokatuei dagokien partearen gehitzea dakarke.

Gai hau bukatzeko ohar arazi nahi zaituet ez dela arreta guztia jarri behar errenta nazionaletik zer zati dagokion honen edo horren talderi, errentaren beraren haundi-tipiaz ahazturik. Ahuntz gaztaetxo baten laurdena edukitzea ezer guti da, besterik ordea, Gruyere izugarri baten laurdena. Hau da, zatien problemak ez gaitzala osoaz ahatz araz: era batera bi problemei begiratu behar diegu eta ez bati bakarrik.

*Errenta nazionalaren banaketa gizarte burrukaren ondorio da beti*

Errenta nazionalari buruzko oharrok bukatzeko, banaketa hau zeren pentzudan dagoen gogorazi nahi nuke. Gainera honela aurreko ikasaldietan bide batez sakabanaturiko anitz elementu bilduko dugu.

Errentaren banaketa indarren erlazioaren, gizarte-klaseen arteko burrukaren pentzudan dago beti. Baina gizarte burrukaren era desberdinak diren beste bide batzutatik ere eraman daiteke.

*Lehenengo kasu sailean, banaketa botere publikoen pentzudan dago*

Esaterako, fiskoari esker, Estatuak gaur Frantzian 8.000 miloi franko berri bereganatzen du (80.000 miloi franko zahar), ia 3/4 konsumitzaileren errentetatik kenduak. Estatuak dirutza izugarri hau bere gisa banatzen du, halako taldeei edo halako aktibitateei eta ez bestelakoei lagunduz; errenta batzu (funtzionarioen soldatak, jubilatuen pentsioak...) gehituz ala ez gehituz (edo guti gehituz), eta ez beste batzu... Bonba erakarle-botatzailezko mekanismo honi esker, —dagoenik inportanteena noski— Estatuak errenta nazionalaren bir-banaketa haundia egiten du.

Inflazioa da Estatuak nazioko errenta bere nahikara bir-banatzeko dadukan bigarren bide praktikoa —zergak baino ezariagoa—.. Gerratean eta gerra ostean asko erabili izan du. Gaur ere ez daduka ahazturik. Prezioak sistimazki gorantz egiten utziz, sarrera erlatiboki finkoak daduzkaten frantsesen lortzeko ahalmena, eta beraz konsumoa, mozte egiten du: jubilatuak, pentsiodunak, errentadunak. Baita beste frantsesen, batez ere alokatuen, erosteko ahalmena ere laburtzen du, neurri tipiagoz bada ere. Konsumo gastuak gutitzean, Estatuak errenta nazionalaren enplegua zuzentzeko era ezari hau batzuri onuragarri izan zaie (horrela lagundu haien fabrika jabeak, zerga esentzioen edo subentzioen bidez) eta beste batzuri kaltegarri (beren lortzeko ahalmena gutitzea). Ertzen Estatuak ekipo-industrietako (desarroiloan daudenak) langileei laguntzen zien bide batez, konsumo industrietan enplegaturiko frantsesen kaltez.

Estatuaren hirugarren esku sarkera errenta nazionalaren banaketan: legegintza soziala eta familiarra, berak bultza eta gida dezakeena. Gerra aurrean alokatu maila batzurentzat bakarrik zegoen prestamen familiarrik eta segurantza soziala ez zen jenerala. Gerra osteko legeek segurantza soziala jeneraldu egin dute eta prestamen familiarrak zabaldu eta gehitu. Lege aldatzeok familien, gaixoen, inbalidoen eta zaharren alde bana arazi dute nazioko errenta zati haundi bat (16), segurantza sozialerako eta prestamen familiarretarako kotizatzen dutenei kendurik, nahiz eta gaizorik ez egon, ez seme-alabarik eduki eta baita gazteak badira ere. Legeak honela nazioko elkartasuna bultzatzen du.

Hauxek dira, bada, Estatuak errenta nazionala bir-banatzeko eerabiltzen dituen bideak. Bistakoa da Estatua gidatzen duen maioria politikoak zer zuzenbide eman, halako edo bestelako bidea, halako eta bestelako helburuak erabiliko dituela. Norgehiagoka politikuko gerabeherek beraz, anitz ondorio dakarkete Estatuak errenta nazionala batzeko eta bir-banatzeko eran.

Estatuaren esku sartzeaz gainera, hiritarrek elkarren artean daduzkaten harreman kontratuzkoak ere izan daitezke errenta nazionalaren banapide.

Enpresa barrenan, alokatuen eta kapitaldunen (irabazi hartzaileen) arteko burrukak akzionistei ordaintzeko dibidendoen beherakada dakar, ala, bestela, alokairuen gorakada. Alokatu taldeen artean ere ba da burrukarik: alokairuen jerarkia-

gatik (haundiagoak ala tipiagoak izan), industria adar bakoitzak hartzen duen nazioko errenta zatiagatik; baita fabrikante tipien eta hauek hornitzen dituzten firmen arteko kontrasteei buruz ere: esaterako, firma menderatzaileak (haundiak) firma menderatuari (tipiari) prezio eskas bat ezartzen dionean firma haundiko alokatuek eta kapitalistek beren onerako eragiten dute errenta nazionalaren bir-banaketa; firma tipiko alokatuak esplotatu egiten dituzte. Klase burrukaren arazoko alderdi berri samarra baina oso inportantea da hau: kontratu bidez, indartsuek —kapitalistek, alokatu nagusiek eta firma menderatzaileko langileek— beren onerako antolatzen dute errenta nazionalaren bir-banaketa.

Baina edozein kasutan, lehenengo sailekoan nahiz bigarrenekoan, klase sozialen arteko errenta nazionalaren banaketa burrukan dago beti gakoa. Lehenengo kasuan burruka hau politikoa da batez ere, Estatuaz baliatu nahi delako honen edo horren banaketa lortzeko; honetarako boterea harrapatu behar edo Estatuan influentzia eduki. Bigarren kasu sailean burruka sindakala da batez ere, enpresako bertako burruka baita alokatuen eta irabazi eramaleen artean edo alokatuen maila desberdinen artean.

Azkenez gauza bat dago garbi: ez dago ez dagoenik banatzerik. Ez da nahikoa esatea: "nazioko opileko neure partea gehitu nahi dut"; opil honen tamainia ere gehitu beharko, eta honek nazioko hazte-indizearen problema nagusia dakar. Nor da nazioan nazioko desarroiloa erabakitzen duena? Noren izenean erabakitzen du?

## IV. NORK ERABAKITZEN DU NAZIOAN ETA ZERGATIK ERABAKITZEN DU HONEN EDO HORREN BIDETIK?

Produkzioaren gehitzea, dakigun bezala, produktibitatearen, lanaren luzeraren eta biztanleria aktiboaren pentzudan dago; produkzioaren banaketa, hau ere ba dakigun bezala, nazioan ari diren burruka politiko eta sindikalen pentzudan dago. Baina burrukak zein mailatan eragin zezakeen ikusirik ere, oraindik apenas aztertu dugu noren pentzudan dagoen gaurko ekonomian produkzioaren zuzenbide nagusia.

Esaterako: nork erabakitzen du etxe gehiago ala gutiago egitea Frantzian? Edo bizitzetxe baino kotxe gehiago produzitzea ala alderantziz? Nork erabakitzen du laborearen ordez mahatsa lantzea? Nork erabakitzen du karreterak, eskolak edo hospitaleak ala "force de frappe"-rako edo Harmada klasikorako gai militarrak egitea? Hauxe da esateko dadukaguna.

Oraingo errejimenean erabaki funtsezkoak, aukera nagusiak hiru pertsona saili dagozkio:

Estatuak: (eta bere ordezkariek: Gobernuak eta administrazioek) presupostuaren (produkto nazionaleko % 26), inbersio publikoen, zergen, inflazioaren, legegintza sozial eta familiarraren, kanpoko komertzioko prezioen, enpresa publikoen zuzenbidearen... bidez gidatzen du Ekonomia. Puntu hauk bata bestearen atzean, ikasaldi honetan edo aurrekoetan azaldurik ditugunez gero, ez dago gehiago ekin beharrik.

Enpresako Zuzendariek: Estatuak damaien askatasuna (errejimen kapitalistan "enpresa askatasuna") beren negozioak (hau da, produkzioa) eramateko eta ahalik dirurik gehien irabazteko darabiltenak, konsumitzaileen premiak asetuz. Egia da Estatuak, esan berri dugunez, era askotara influitzen duela enpresarien erabakietan (gauza batzu debekatuz eta beste batzu zigorpetuz, ala, bestela, laguntza edo abantaila fiskalak emanez beste gauza batzutarako); baina gaurko egoeran enpresako zuzendariek iniziatiba eta ekintza askatasuna ia osoa dadukate. Klase pribilejiatuek kontrolaturiko Estatuaren eginkizuna gaur izatez gehiago da sistima kapitalistaren funtzionamendua indartzea, aldatzea baino.

Konsumitzaileak: beren erosketekin produkzioa zuzentzen dutenak. Erosketak gehitzean, erosten diren gaiak gehiago produzitzera bultzatzen dituzte fabrikanteak; beren merkantziarik erosi ezik berriz, fabrikanteek ez produzitzera joten dute.

*Sistima honetako arriskuak*

Izatez, bizi garen munduan gogoeta apur bat aski da irabazi nahia nagusi den sistima honetako arrisku eta ondorio negargarriak ikusteko.

1. *Sistimak premia emankorrak bakarrik haintzat hartzen ditu*

Enpresako buruari bost axola zaizkio premia ez-emankorrak, ez baitakarkiote inolako onurarik. Premia ez emankorrok Estatuak beregaintzen ba-

ditu, hainbat hobeto; baina hau leungarri tipia izan, medio urriak baitaduzka. Beregaintzen ez asetzeko mediorik: irabazi gutidun gaizki aterbetuak, aterbetzeko pisu baten jabe egiteko modurik ez dadukatenak; behar haina berotzeko edo elikatzeko modurik ez dadukaten zaharrak; goi--ikasketen preziorik —oso altua zori-xarrez— ordaintzeko moduko gurasorik ez dadukaten gazteak; makalduz doazen lurraldeko berezko aberastasun guti dadukatelako eta laguntza politiko guti Estatuko subentzioez onuratzeko; nazio pobreak, bizitzeko eta beren biztanleen aurrerapen kulturalerako behar dutenez hornitzeko haina lortzeko ahalmen ez dadukatenak.

Ordaintzen ez duenak ez du ezer hartzen, enpresariek premia emankorrak bakarrik asetzeko produzitzen duten sistima gogor honetan.

## 2. *Premiarik aurrenak moden mende*

Kapritxoek —bakarrekoek edo kolektiboek— bultzatzen dute hau edo hori konsumitzera eta beraz hau edo hori produzitzera, aurreragoko premiei erantzunen likeeten beste konsumo batzuren kaltez.

Esaterako: hamar urteotan Frantziako automobilteria hiru bidertu egin da, bizitzetxe krisisa ez delarik konpondu ez eta gutiagorik ere. Nazio bati dudarik gabe on zaio automobilak edukitzea, baina segur asko urjenteago behar haina bizitzetxe edukitzea. Esperientziak erakusten du konsumitzaileak, bere gisa utziz gero, gaur automobilera

gehiago joko duela bizitzetxera baino, hau hari sakrifikatzeko arriskuz.

Beste adibide bat: Parisaldea, politika zuzen egokirik gabe —seitatik frantses bat bertan bizi da— zortzi urtetan ia miloi bat gehitu da, gehiegi noski. Bitartean agudo desbiztantzen ari dira bizitzetxe hobez eta beste zirkunstantzia batzuz bizitzeko moduan zeudekeen lurraldeak. Konsumitzaileei eta enpresako zuzendariei bakarrak uzten badiogu ardura hau, fabrika berriak batez ere Paris aldean imintzen segituko da, eta hau faktore ekonomiko batzurengatik justifikaturik dago noski, baina baita nazio osoko on goragokoaren kontra ere dudarik gabe.

Azkenez, hirugarren adibidea, oraingoan mundukoa: herri atzeratuak, gauzak dauden bezala uztekotan, gero eta pobreago izatera beharturik daude, zeren beren errenta, lehendik ere eskasa, beren biztanleria baino nekezago gehitzen baita. Herri subdesarroilatuei laguntzea, herri aberatsetako presupostu nazionalaren % 1-ra ere heltzen ez dena, ez dago batere modan, gastu militarrak ordea, mundu guztian lehenago direlarik...

### 3. *Inbersiorik aurrenei ez zaie jaramonik egiten*

Hala ere, gure seme-alabek —eta gerauk, zahar gaitezenean— nazio aberatsik eta ondo horniturik eduki dezaten nahi badugu, lehentasun haundia eman behar inbertsioei. Gaur ez da honela gertatzen. Frantzia inbersioetan oso urruti

dabil Alemaniatik eta Rusiatik, nekazaritza, inbestigazio zientifikoa eta kultura ematea bertan behera daudelarik...

### 4. *Errenta nazionalaren banaketa bidegabea astunduz doa*

Oraintxe ere banaketa hau 1-tik 1.500-ra doa (zerga aurretik) eta 1-tik 1.800-ra zerga ostean. Hona bada, gaurko eboluzioak problema astundu egiten duela: alokatuen eta irabazi jabeen, alokatu tipien eta koadro teknikoen, familien eta ezkongabeen arteko berezketa. Aberatsenen sarrerak gero eta agudoago gehitzen ari dira modurik gutiendunen aldean: gai honi buruz ba dago esplikazio ugaririk eta Ikasketa Sozialisten Etxeko aurreko libiruxka batean (27-tik 29-rako aleak: Posible eta desiragarri al da errente politika bat?) kasu dramatiko mordo bat aipatu izan da. Ez diogu gehiago ekinen.

Eboluzio hau, nolanahi, erabaki librezko sistima honen ondorio lojikoa da, indartsuei makalak gero eta menderagotzeko bide damaiena, honela haien abantaila eten gabe haundituz.

### *Frantziako planak: konponketa kazkar bat*

Nolanahi ere, ez da inondik agiri nazioko bizitza ekonomikoan frantsesen maioriaren gogoa adieraziko lukeen pentsamendu koherenterik. Ez zuei ez niri galdatu zaiku sekula zer nahi dugun Frantziak produzi edo konsumi dezan, ez eta zeintzu lehentasun jagon behar diren ere... eta hala

ere, gerau gara —produktore eta konsumitzeile gisa— nazioko joko ekonomikuko aktoreak; Frantziako nazioko autodeterminazio ekonomikoan eragiteko geure hiritar-eskubideak erabiltzeko modua eduki behar genukeen aktoreak noski. Izatez eta zori-xarrez, jokoko ikusle besterik ez gara, joko legeak urruti geratzen zaizkigularik: Bankaren, enpresa haundien, goiko funtzionarioen eta gizon politiko batzuren eskuetan.

Puntu honetan planen sistima aipatu behar. Dakigunez, Frantzian plan batzu eduki ditugu: laugarrena martxan dago eta bostgarrena prestatzen ari dira. Baina gure agintariok harro dauden plangintza honek ez du kontuan hartzen nazioak erabaki behar duela nazioko zuzenbide ekonomiko nagusia. Egitez —datorrena datorrela esatera nindoan— ekonomiako balantza maneiatzaileen edo boterean presio egin dezaktenen eskuetan uzten du zuzenbide jenerala erabakitzeko ardura eta huskeriazko parte batean gutariko bakoitzaren eskuetan geure irabazien erabilkera zuzentzeko ardura.

Planak guti batzuren eta ez demokraziaz konsultaturiko nazioaren eskuetan uzten ditu nazioko etorkizun ekonomikoari buruzko aukera nagusiak, konsumoaren tamainia jeneralaren eta beriziki konsumo bakoitzaren artean zer lehentasun jarri erabakitzea, errenta jerarkiaren eboluzioa... laburki, beharrezkoen guztia. Ez al da hauxe, kritika tekniko zehatzak alde batera utzirik, Frantziako Planifikazio sistimaren akats nagusia? Hemen ez dadukagu Frantziako planen azterketa kritikorik

egiteko tokirik. Gai honi buruz C.E.S.-ko beste liburuxka bat argitara liteke (17).

Bedi aski lehenengo hondo-kritika hauxe: inork ez du permititu —5garren Planera arte, zeinek izendatu baitu joera nagusiak Parlamentuari konsultatzeanazioak bere destino ekonomikoa hautatzerik. Frantziar hautatzaileak sekulorun sekulotan ari daitezke eztabaidaka ea zeintzu hautaskunde diren hobeak, ordezkaritasun proportzionalezkoak a la maioriazkoak, buelta batekoak, listazkoak ala izen bakarrezkoak; baita eztabaida daitezke lekuko hauteskundeak direla-eta herriko problema tipi guztiak —pizontzien tokitik maisuaren bizitzetxeraino—. Baina maioriari ez zaio sekula bere etorkizuna ekonomikoaren konturik konsultatu, zeharretara ez bada hauteskunde jeneralak direla-eta.

Lehenengo hiru Plan lau-urtekoak, ia denak, Parlamentuak botatu aurretik jarri ziren mertxan: 1goa ez zen inolako botaziora emana izan; 2garrena bukatu baino hile batzu geroago botatua izan zen; 3garrena, noizbait, aginduz iragarria izan zen; 4garrena, behar bezala eztabaidatua izanik Parlamentuan, azkenean "bai" ala "ez"-ko botaziora emana izan zen, bai-ezetzok ez Planeko 400 orrialdeei emanak noski, Gobernuak eta Plana atera zuen Batzordeak prestaturiko artikulu bakar bati baino.

Nire ustez honek sustrai sustraiki ezerezten du demokraziaren ulerkera bat; demokrazia itxurazkoegia nire ustez: herriari bigarren mailako problemak konsultatu eta hauzirik funtsezkoenetan berriz iritzirik eskatu ez.

Baina pentsa dezake norbaitek: Nola daiteke ordea nazioari bere torkizun ekonomikoa konsultatzerik? Planaren egikera demokratikoak (18) nola izan behar lukeen zehaztasunetan sartu gabe, diogun soilik biotarik bat egin lezaketela:

— Planaren formula batzutarik (A.B.D+) bat hautatu hauteskunde jeneral baten edo konsulta konkretu baten bidez, Askakunde ostean Konstituzioko proiektoei buruz egin zen bezala.

— Adarrik beharrezkoenetan halako lehentasun batzu izendatu soilki, Planaren prestaera kondizionatuko dutenak.

Lehenengo kasuan Konstituzioak ederki ager araz diezakee kandidatoei urrengo urteetan zer Plan ekonomiko modu eta zeintzu aukera nagusi martxan imintzeko asmoa dadukaten. Bigarrenean garbi esateko eska lekikee ea bizitzatxeari damaioten lehentasun osoa ala honen edo horren konsumo mozteari —edo desarroilatzeari—; ea nazioko errentaren oraingo banaketari eusteko ala berritzeko asmoa dadukaten... Nazioak bere nahiagotasunak "autodeterminatu" ondora errespeta arazteko Administrazioak zehazki elaboratzeko.

### *Ez demokratikoa ez errespetatua*

Oraingo Planaren egikera demokratikorik ezaz gainera, bigarren akats haundi bat dago: iragarritakoan ez direla errespetatzen. Ez da inola ere nahikoa talde kapitalista nagusiei (eta sozio dituzten teknokrata publikoei) Plana egiteko boterea kentzea nazio osoari emateko. Baita seguratu be-

har da, Plana ondo elaboratutakoan, errespetua izan dadin ere.

Dendaren batean sagar bat edo gaileta bat ohostu duen haurra —Legediaren hautsapenagatik— zigortu eta industria oso bateko, lurralde bateko edo behar bada nazio osoko etorkizuna honda dezaketen Plan-autsapen astunak zigor gabe utzi? Azkena litzateke hori.

Dudarik gabe honek esan nahi du problema zail bat dagoela egokiro taxutu beharrekoa, alegia, nola zaindu ekonomia planifikatuan iniziatibaren behar beharrezko bizkorgailua. Baina bistan dago herriak libreki hautaturiko Plan nazional baten lehentasuna seguratzea, enpresako zuzendarien edo konsumitzaileen bakar-aukerak —sarritan hondagarriak— alboratuz, demokrazia-sistima nahikoa itxurazkotik benetako demokrazia-sistima sozialistago edo ez sozialistago batera pasatzea litzatekeela, hemen gehienen premiak lukeitelarik aseak izateko probabilitaterik gehien. Azkenez honelaxe bakarrik liteke posible premiarik aurrenei —nahiz eta errentakorrak ez izan— lehentasuna ematea premia errentakorren baina bigarren mailakoen gainetik.

### *Itxurazko demokraziatik demokrazia sozialistara*

Nola? Bai halako premiak dituztenei asetzeko finantza bideak emanez; bai haien asepen oso prezio erosoan (edo behar bada dohainik...) iminiz... Adibide bakar bat baino ez aipatzeko: zenbat miloi familia dago Frantzian bizitzetxe dezenterik ez

erosteko modurik gabe? Eduki dezaten berriz beharrezko da: edo pisu bat eskaini beren sarrerak kontuan edukirik ordaintzeko moduko alkilerrez (hauxe da H.L.M.-ren betekizuna), edo alkiler errentakor bat (edo gastuak kitatzekoa behintzat) ordaintzeko moduko sarrerak eman, kooperatiban eginiko bizitzetxeen gostu-preziotik kalkulaturik alkilerra.

Berbera gertatzen zaie zaharrei ere, premiak eduki bai, eta haundiak gainera, baina ase ezin, bi edo hiru bider sarrera gehiago beharko bailukeite. Nazio atzeratuei ere berbera gertatzen zaie: beren errenta gehituz gero —ez bakarrik atzerriko laguntzei eskerrak, baizik eta lehegaien merkatuen berrikuntzari eta beren baliakizunen esplotazio sistimatikoari eskerrak ere—, beren premia izugarriak asetzen hasteko moduan leudeke, etab. Hiru kasuotarik bakoitzean borondate hartarako batek, deliberatu batek lor dezake gaur errentakor ez diren premien asepena irabaz-gogoaren edo interes pribatuen gainetik ezartzea.

Nork dudan jarri aldakuntza itzela litzatekeela hau? Horrexegatik hain zuzen, nire ustez, ez dago benetako beste demokraziarik demokrazia sozialista baizik. Egia da parlamentuzko demokrazia, 1789-koaren tankerakoa, bapo etorri zaikula anitz libertade, giza-eskubideen aitortza, etab. lortzeko, baina benetako demokrazia gehienen premien asepenari begira dagoena da, gehienen borondate eta sakadari eskerrak.

Niretzat ez dago benetan demokrazia izenik merezi duen beste bizikera sozialik, denek elka-

rrekin nazioko etorkizun ekonomikoa hautatzea permititzen duena baizik, denen gainetik premia nagusiak asetuz. Hemendik kanpora, beste guztiak klase menderatzaileen zerbitzuko demokraziak dira; askatasun bakarra hitz egiteko, baina ez erabakitzeko, dakarten demokraziak; Zazie-k esanen lukeen moduko demokraziak: "Hitz bala-bala, hitz bala-bala, horixe besterik ez dakizue zuek..." herriko zapalduen alde.

## HIZTEGIA

Irakurleak hobe duke hiztegi luze samar honi aurretik begiratu bat ematea, anitz hitzek edo hitz taldek zer esan nahi duen —zehazki, ez guti gora behera— atera ezinik ez ibiltzeko. Ekonomiako liburu bati honelako zerrenda bat eranstea lotsagarri dela uste duenak arrazoia daduka, lotsagarriago dela uste duenak bezala gure Etxeparek-eta duela lau mende konpondurik zeduzkaten problemekin gu burutu ezinik ibiltzea. Zer pena ez dudala deabruetan sinesten berekin elkartu ahal izateko. Ohar bat bide batez. Irakurlea laster ohartuko da liburu hau parentesiz, marratxoz eta digresioz josirik dagoela. Ahalik gehienean egitura orijinala errespetatu dut. Idazkera honek anitz problema dakar, eten gabe krask eragiten baitio gure "biribiltasuna" delakoari, konkordantzia kontuagatik batez ere. Ba nuen lehendik ere konbentzimendu haundirik euskal esandiaren lotutasunaz, urritasunaz ez esatearren. Neure senak agindu bezala atondu dut hauzia —euskal "kutsua" delakoaren ulerkera xit erlatiboz noski—, baina aitortu behar dut hauxe dela —esaldiaren egitura— euskeraren puntu gaitzetarik bat, loturak askatuz eta

soltura guztiak hartuz bakarrik konpon daitekeena. Dudarik ere ez bakoitzak nahi duen bezala idazteko askatasuna dadukala (ez da guti hain dohain haundia, nola baita askatasuna, nonbait erabili ahal izatea, hizkuntzaren izorramendurako bada ere), baina nik neure aldetik gutik asko edo askok guti ulertzekotan, nahiago dut neure askatasuna sator zuloetara piz egiten erabili.

| | |
|---|---|
| **Adibide** ... ... ... ... ... ... | Ejemplo |
| **Adiuntza: adiuntza gorabeherak** ... ... ... ... ... ... | Variaciones de coyuntura |
| **Administrari** ... ... ... ... ... | Administrador |
| **Aitor: Aitor-urte**... ... ... ... | Año-testimonio |
| **Aitor-enpresa** ... ... | Empresa-testimonio |
| **Aldakor** ... ... ... ... ... ... | Variable |
| **Aldetu** ... ... ... ... ... ... ... | Apoyar |
| **Alokairu: alokairu eredu**... | Tipo de salario; salario-tipo |
| **ama alokairu** ... | Salario maternal |
| **Alokakuntza** ... ... ... ... ... | Asalariarización |
| **Alokatu** ... ... ... ... ... ... | Asalariado |
| **Ama eskola** ... ... ... ... ... | Escuela maternal |
| **Amategi** ... ... ... ... ... ... | Maternal |
| **Amortitu** ... ... ... ... ... ... | Amortizar |
| **Anizkoitz: esplotazio anizkoitz** ... ... ... ... ... ... | Explotación polivalente |
| **Araudi** ... ... ... ... ... ... | Reglamento |
| **Arautu** ... ... ... ... ... ... ... | Regular, reglamentar |
| **Astakunde** ... ... ... ... ... | Liberación |
| **Asma patenteak**... ... ... ... | Patentes de invención |
| **Aste-buru** ... ... ... ... ... ... | Fin de semana |
| **Aterbetu** ... ... ... ... ... ... | Alojar |
| **Aurreztu** ... ... ... ... ... ... | Ahorrar |
| **Atzipetu** ... ... ... ... ... ... | Seducir |
| **Azpi-estruktura** ... ... ... ... | Infraestructura |
| **Bahimendu** ... ... ... ... ... | Embargo |
| **Baietsi** ... ... ... ... ... ... ... | Afirmar |
| **Baimendu** ... ... ... ... ... ... | Autorizar |
| **Baitetsi** ... ... ... ... ... ... | Confirmar |
| **Baldindu** ... ... ... ... ... ... | Condicionar |

| | |
|---|---|
| **Baliakizun** ... ... ... ... ... | Recurso |
| **Banaketa: banaketa zirkuito** ... ... ... ... ... | Circuito de distribución |
| **Banaketa: banaketa berdinkor** ... ... ... ... | Reparto equitativo |
| **Banaketa: banaketa efektibo** ... ... ... ... ... | Reparto efectivo |
| **Bankari** ... ... ... ... ... ... | Banquero |
| **Bataz-beste** (sustantibo gisa) ... ... ... ... ... ... ... | Media, promedio |
| **Berdintsu** ... ... ... ... ... ... | Homogéneo |
| **Berdintsutasun** ... ... ... ... | Homogeneidad |
| **Bilduka kimiko** ... ... ... ... | Complejo químico |
| **Bir: bir-banaketa** ... ... ... | Redistribución |
| **bir-egokimendu** ... ... | Readaptación |
| **bir-baliotu** ... ... ... ... | Revalorizar |
| **bir-salmenta** ... ... ... | Reventa |
| **Bizi-gostu** ... ... ... ... ... ... | Coste de vida |
| **bizi-luzetasun** ... ... ... ... ... | Longevidad |
| **Bizkartu** ... ... ... ... ... ... | Respaldar |
| **Biztandu** ... ... ... ... ... ... | Poblar, habitar |
| **Biztanle** ... ... ... ... ... ... | Habitante |
| **Biztanleria** ... ... ... ... ... | Población |
| **Bozketa: maiorazgo bozketa** ... ... ... ... ... ... ... | Escrutinio mayoritario |
| **Burkide** ... ... ... ... ... ... | Rival |
| **Buruz** ... ... ... ... ... ... ... | Sobre, en función de, en relación a |
| **Defizitun: defizitun balantza** ... ... ... ... ... ... ... | Deficitario. Balanza deficitaria |
| **Desberdintsu** ... ... ... ... ... | Heterogéneo |
| **Desberdintsutasun** ... ... ... | Heterogeneidad |
| **Desbiztandu** ... ... ... ... ... | Despoblar |
| **Desboltsatu** ... ... ... ... ... | Desembolsar |
| **Desnazionaldu** ... ... ... ... | Desnacionalizar |
| **Dezentraldu** ... ... ... ... ... | Descentralizar |
| **Ebazkor: era ebazkor** ... ... | Decisivo. Forma decisiva |
| **Egoiliar** ... ... ... ... ... ... | Residente |
| **Ehundegi** ... ... ... ... ... ... | Fábrica de tejidos |
| **Elektrika** ... ... ... ... ... ... | Electricidad |
| **Elkarrekikotasun** ... ... ... | Reciprocidad |
| **Elkarte anonimo** ... ... ... | Sociedad anónima |

| | |
|---|---|
| **Emankortasun: emankortasun gehikor** | Rendimiento creciente |
| **emankortasun gutikor** | Rendimiento decreciente |
| **Enpresari** ... ... ... ... ... ... | Empresario |
| **Epe: epe labur** ... ... ... ... | Corto plazo |
| **epe luze** ... ... ... ... | Largo plazo |
| **erdiko epe**... ... ... ... | Medio plazo |
| **Eraberritze: enpresaren eraberritze** ... ... ... ... ... ... | Reconversión de la empresa |
| **Erabilgarri: errenta erabilgarri** ... ... ... | Renta disponible |
| **hondo erabilgarriak** ... ... | Fondos disponibles |
| **Eragotzi** ... ... ... ... ... ... | Impedir |
| **Eraiki** ... ... ... ... ... ... ... | Construir |
| **Erakarle-botatzaile** ... ... ... | Aspirante-impelente |
| **Eramantza** ... ... ... ... ... | Gestión, gerencia |
| **Erantsi: balio erantsi** ... ... | Valor añadido |
| **Erantzukizun** ... ... ... ... | Responsabilidad |
| **Erantzule** ... ... ... ... ... ... | Responsable |
| **Eraskin** ... ... ... ... ... ... | Anexo |
| **Erdiko: erdiko langile**... ... | Obrero medio |
| **erdiko alokairu** ... | Salario medio |
| **Erdi-landu** ... ... ... ... ... | Semielaborado |
| **Eredu: familia eredu** ... ... | Tipo de familia; familia-tipo |
| **enpresa eredu**... ... | Tipo de empresa; empresa-tipo |
| **Erosotasun** ... ... ... ... ... | Comodidad |
| **Eros-prezio** ... ... ... ... ... | Precio de compra |
| **Erraziotu** ... ... ... ... ... ... | Racionar |
| **Erregai** ... ... ... ... ... ... | Combustible |
| **Errentakor** ... ... ... ... ... | Rentable |
| **Eskaintza-eskariak**... ... ... | Oferta y demanda |
| **Eskulan** ... ... ... ... ... ... | Manufactura; trabajo manual |
| **Eskulangile** ... ... ... ... ... | Manufacturero |
| **Etxalde** ... ... ... ... ... ... | Finca |
| **Ezaskitasun** ... ... ... ... ... | Insuficiencia |
| **Ezkutu: Partida ezkutuak. eta agiriak** ... ... | Partidas visibles e invisibles |
| **Finantzatu** ... ... ... ... ... | Financiar |

| | |
|---|---|
| **Finantzari: talde finantzari** | Grupo financiero |
| **Gainezko** ... ... ... ... ... ... | Excedentario |
| **Gainki: komertzio gainki**... | Evcedente comercial |
| **Gaitasun: kutxa gaitasunak** | Disponibilidades de caja |
| **Garantitu** ... ... ... ... ... ... | Garantizar |
| **Garbigailu**... ... ... ... ... ... | Lavadora |
| **Gaudimen** ... ... ... ... ... ... | Solvencia |
| **Gaudimendun - gaudimengabe** ... ... ... ... ... ... ... | Solvente - Insalvente |
| **Gehigarri: kapital gehigarri** | Capital suplementario |
| **eskari gehigarri** | Demanda suplementaria |
| **Gehikor** ... ... ... ... ... ... | Creciente |
| **Gidari** ... ... ... ... ... ... ... | Dirigente |
| **Goi: goi-estatu** ... ... ... ... | Estado Mayor |
| **goi-ikasketak** ... ... ... | Estudios superiores |
| **Gomendatu** ... ... ... ... ... | Recomendar |
| **Gutikor** ... ... ... ... ... ... | Decreciente |
| **Harmada** ... ... ... ... ... ... | Ejército |
| **Hasberri** ... ... ... ... ... ... | Principiante |
| **Hauteman** ... ... ... ... ... | Observar |
| **Hauteskundeak** ... ... ... ... | Elecciones |
| **Hautesle** ... ... ... ... ... ... | Elector, votante |
| **Hazkuntza** ... ... ... ... ... | Crecimiento. Cría |
| **Haztaketa: iritzi haztaketak** ... ... ... ... ... ... ... | Sondeo: Sondeos de opinión |
| **Hedadura**... ... ... ... ... ... | Extensión |
| **Hedatsu** ... ... ... ... ... ... | Extenso |
| **Hesi** ... ... ... ... ... ... ... | Coto |
| **Hiritar** ... ... ... ... ... ... | Ciudadano. Que vive en la capital |
| **Hiritargo** ... ... ... ... ... ... | Ciudadanía |
| **Hobari: hobari gehigarri**... | Prima: prima suplementaria |
| **Hondo: hondo kritika**... ... | Crítica de fondo |
| **elkartasun hondoak** | Fondos de solidaridad |
| **Horniketa**... ... ... ... ... ... | Aprovisionamiento |
| **Hornitura: hornitura mugikor** ... ... ... ... ... ... ... | Equipo: equipo móvil |
| **Huts-tarte** ... ... ... ... ... | Margen de error |
| **Ibai sare** ... ... ... ... ... ... | Red fluvial |
| **Ibai-bide** ... ... ... ... ... ... | Vía navegable |
| **Ikerkuntza: mina ikerkuntza** ... ... ... ... ... ... ... | Prospección minera |
| **Ikuskizunak** ... ... ... ... ... | Espectáculos |

| | |
|---|---|
| **Ikuspen** ... ... ... ... ... ... | Visión |
| **Industriatu - Industriakuntza** ... ... ... ... ... ... ... | Industrializar - Industrialización |
| **Iragaztegi** ... ... ... ... ... | Refinería |
| **Irazki** ... ... ... ... ... ... ... ... | Trama |
| **Irudizko marra** ... ... ... ... | Línea imaginaria |
| **Irundegi** ... ... ... ... ... ... ... | Fábrica de hilados |
| **Irazur: irazur fiskal** ... ... | Fraude: fraude fiscal |
| **Itun kolektibo** ... ... ... ... | Convenio colectivo |
| **Izendegi** ... ... ... ... ... ... ... | Empadronamiento |
| **Izozgailu** ... ... ... ... ... ... ... | Frigorífico, nevera |
| **Jabego** ... ... ... ... ... ... ... ... | Propiedad |
| **Jarraikitasun**... ... ... ... ... | Continuidad |
| **Jelatu: prezioen jelatze** ... | Congelación de precios |
| **Kito-indize** ... ... ... ... ... | Indice de cobertura |
| **Kolonitzaile** ... ... ... ... ... | Colonizador |
| **Kondaduria** ... ... ... ... ... | Contabilidad |
| **Kontari** ... ... ... ... ... ... ... | Contable |
| **Kopuru** ... ... ... ... ... ... ... | Cuantía |
| **Laborategi** ... ... ... ... ... | Laboratorio |
| **Laket pabeiloi** ... ... ... ... | Pabellón de complacencia |
| **Landadi: kautxo landadi**... | Plantación: plantación de caucho |
| **Lan-esku** ... ... ... ... ... ... ... | Mano de obra |
| **Legegintza sozial** ... ... ... | Legislación social |
| **Lehengai** ... ... ... ... ... ... ... | Materia prima |
| **Lehentasun** ... ... ... ... ... | Prioridad |
| **Lortzeko ahalmen** ... ... ... | Poder adquisitivo |
| **Lurralde** ... ... ... ... ... ... ... | Región |
| **Lur-langile** ... ... ... ... ... | Obrero agrícola |
| **Maizter** ... ... ... ... ... ... ... | Arrendatario |
| **Mendetsu** ... ... ... ... ... ... ... | Secular |
| **Merkatari**... ... ... ... ... ... | Comerciante |
| **Metalgin** ... ... ... ... ... ... ... | Metalúrgico |
| **Mugi-arazi: kapitala mugi--arazi** ... ... ... ... ... ... ... | Movilizar: movilizar el capital |
| **Mugatu: Erantzukizun mugatu** ... ... ... ... ... | Limitado: responsabilidad limitada |
| **errenta mugatu** ... | Renta limitada |
| **Norabide** ... ... ... ... ... ... ... | Directriz |
| **Oldar-aldi** ... ... ... ... ... ... | Ofensiva |
| **Oldarkoitasun** ... ... ... ... | Combatividad |
| **Ondasun-zerbitzuak**... ... ... | Bienes y servicios |
| **Ondasun iraunkor** ... ... ... | Bien duradero |

| | |
|---|---|
| **Onen tekniko** ... ... ... ... | Optimo técnico |
| **Ongizate** ... ... ... ... ... ... | Bienestar |
| **Onuradun** ... ... ... ... ... ... | Beneficiario |
| **Ordain balantza** ... ... ... ... | Balanza de pagos |
| **Ordezkari** ... ... ... ... ... ... | Representante |
| **Ordezkaritasun** ... ... ... ... | Representatividad |
| **Ordezkatu** ... ... ... ... ... | Representar |
| **Ordezko pieza** ... ... ... ... | Pieza de recambio |
| **Ordeztu** ... ... ... ... ... ... ... | Reemplazar |
| **Ordu-alokairu** ... ... ... ... | Salario-hora |
| **Ordugo** ... ... ... ... ... ... | Horario |
| **Orotasun** ... ... ... ... ... ... | Conjunto, totalidad |
| **Paperketa** ... ... ... ... ... ... | Papeleo |
| **Parlamentari** ... ... ... ... ... | Parlamentario |
| **Partaide** ... ... ... ... ... ... | Miembro |
| **Partekatu** ... ... ... ... ... ... | Compartir |
| **Partu** ... ... ... ... ... ... ... | Equilibrar, igualar |
| **Partzuergo** ... ... ... ... ... | Sociedad comanditaria |
| **Patroingo** ... ... ... ... ... ... | Patronato |
| **Patu** ... ... ... ... ... ... ... ... | Fatalidad |
| **Patukoi** ... ... ... ... ... ... | Fatalista |
| **Pentzudan (egon)** ... ... ... | Depender de |
| **Pilaketa urbano** ... ... ... ... | Aglomeración urbana |
| **Prestamen** ... ... ... ... ... ... | Prestación |
| **Saiheskor: zifra saiheskorrak** ... ... ... ... ... ... ... | Aberrante: cifras aberrantes |
| **Salmenta: salmenta prezio** | Precio de venta |
| **Sarrera** ... ... ... ... ... ... ... | Ingreso |
| **Soberakin** ... ... ... ... ... | Remanente |
| **Sorta: akzio sorta** ... ... ... | Paquete de acciones |
| **Sozialdu** ... ... ... ... ... ... | Socializar |
| **Udal arbitrio** ... ... ... ... | rAbitrio municipal |
| **Ugazaba soka** ... ... ... ... | Entente patronal |
| **Urtetsu: plan urtetsu** ... ... | Plan plurianual |
| **Uzta - uztatu** ... ... ... ... ... | Cosecha - Cosechar |
| **Xirokuntza: guztizko xirokuntza** ... ... ... ... ... ... | Depauperación absoluta |
| **Xanpon** ... ... ... ... ... ... | Moneda |
| **Zentraldu** ... ... ... ... ... | Centralizar |
| **Zerga: oinarri zerga** ... ... | Impuesto base |
| **errenta zerga** ... ... | Impuesto sobre la renta |
| **Zerbitzuburu** ... ... ... ... ... | Jefe de servicios |
| **Zientzia zehatzak** ... ... ... | Ciencias exactas |

| | |
|---|---|
| **Zihurtapen** ... ... ... ... ... | Constatación |
| **Zilindraje** ... ... ... ... ... ... | Cilindrada |
| **Zori - zorizko**... ... ... ... ... | Azar - Aleatorio |
| **Zuzen: sarrera zuzenak eta ez-zuzenak** ... ... ... ... ... | Ingresos directos e indirectos |
| **Zuzentzaile: koadro zuzentzaileak** ... ... ... ... ... ... | Cuadros directivos |

# OHARRAK

(1) Stadistiques et études financières, 1960-ko hazila (zifrak 1959-n 1958-ko errentei buruz eginiko agerpenei dagozkie).

(2) Le Monde-k (1960-ko urriak 30) aztertzen du Centre de Recherche pour l'expansion de l'economie-ko estudioa.

(3) Rapports anuals de la Direction de l'Amenagement du Territoire.

(4) Stadistiques et études financières, 1961-martxo.

(5) Stadistiques et études financières, 1960-apiril.

(6) Ikus M. Liorzu-ren estudio bikaina (Etudes stadistiques, 1960, Urtarril-Martxo).

(7) Sirev. Ed. Ikus baita aurreko kapitulako komentarioak holdingei buruz.

(8) Enpresa publikoei administrazio publikoak erantsiz gero, Frantzian banaturiko % 30 alokairu sektore publikoak ordaintzen duela ikusten da, baita Frantziako % 40 inbersio ere.

(9) Desarroilo Planaren prestaera demokratikorako erabiltzen diren metodoen berri zeatiz hemen ematerik ez dugunez gero, Perspectives Socialistes-ko bi ale (1961-ko urtarril-otsail) ikusteko gomendatzen dugu, gaiari dagozkionak.

(10) Frantziako biztanleria aktiboari buruz zehaztasun hoberik nahi duenak ikus Le Monde-ko analisia, 1963-ko ekaineko 9-10, eta izparringi honek egiten duen komentarioa I.N.S.E.E.-k argitalduriko zifrei (1963-6-8--ko Estadistika Astekaria).

(11) Biztanleria osoa bi mundu-gerrek odolustua noski, ez da, esateko, mende erdian gehitu: Frantzian 40,7 miloi biztanle zegoen 1901-n eta 40,5 miloi 1946-n.

(12) Aurrerago, partikularren kasua zela-eta, onako adibide hau jarri nuen: Scooter bat 100.000 frankotan erosten badut eta hiru urteren buruan 100.000 frankorik desenboltsatu gabe berria erosi nahi, urtean 30.000 ko aurreztu behar; 30.000 frankook ez dira nire kapitalaren hobetze, nire oraingo berritze hutserako behar den urteroko amortizazioa baizik.

(13) L'Action Syndicale Ouvrière et la Theorie Economique du Salaire. A. Tiano (Genin Ed.).

(14) % 9, zentsoko zifra brutoei, nekez konparagarriei, segitzekotan: 12,5 miloi alokatu 1936-n, 13,6 miloi 1962-n.

(15) Bigarren puntuak epe luzeetarako (50 urte, 100 urte) konparazioak okertu egiten ditu; baina epe laburrera edo erdikora egiazko izan daiteke (Frantzian, esaterako, gerra aurreari buruz).

(16) Errenta nazionalaren % 16, gerra aurreko % 5--en kontra.

(17) Problema honi bi liburuxka eman zaizkio, 18-19 eta 25-26 aleak.

(18) Ikus "Plagintza demokratikoari buruz elkar--hizketa"-ko konklusioak (1963-ko apiril, C.F.T.C.-ko egoitzan, Square Mont Tholon, Paris) edo P.S.U.-ko egoitzan, Square Mont Tholon, Paris) edo P.S.U.-ko Egitarau Ekonomikoa (Plangintza kap.) (boulevard Garibaldi 54, Paris-15).

# AURKIBIDEA

# Lur

## hastapenak 20

Lan honen lehenengo alea irakurri duena bigarren parte honen zài badago, lortu dugu lan honetan jardun dugun guztiok, eta euskeratzaileak batez ere, gure nekeen ordaina.

Bestela, hemen dugu gaurko hau hasierari jarraipen hobeago bat emateko.